

# Agurra eta Ohorea

## EUSKAL MILITANTEEN HERIOTZA KRONIKA

JOKIN URAIN LARRAÑAGA



EGILEA
**Jokin Urain Larrañaga**
1959, Mendaro

C.P HERRERA DE LA MANCHA
13200 Manzanares
Ciudad Real

Lasturren, Deban eta Donostian ikasketak burutu ondoren, baserrian jardun zuen lanean 1983. urtean ihes egin zuen arte. 1986an atxilotu zuten, 26 urte zituela. Kondena beteta 2009. urtean behar zuen libre, baina Espainiako Auzitegi Nazionaleko 197/2006 "doktrina" ezarrita 27 urte daramatza preso.

Obra oparoko idazlea da:

**Izaina** nobela, *AABB, 1990*
**Adlotse** nobela, *Txalaparta, 1992*
**Gatibu sortu nintzen** kronika, *Susa, 2000*
**Errotarria** saiakera, *Susa, 2006*
**Ez dago etxean** saiakera, *Susa, 2010*

**www.literaturakoadernoak.org**



ISBN: 978-84-940593-7-7
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL
SS-1546-2013

## Aurkibidea

# HITZAURREA

Hilei bakea, esan izan da. Horrela erakutsi ziguten. Ez da, noski, kontu berria. Antzinatetik dator hilekiko kezka, familiako edo tribuko hilei azken atsedenerako bidea egitea hileta errituen bitartez. Haitzuloetan, mendi gainetan… aurkitu dira antzinako hileten aztarnak, urrutiago joan gabe geure herrian bertan.

Hil den senide edo lagunari azken agurra eta omena egiten diogu hileten bitartez. Baina heriotza horrek inguruko bizionган uzten digun hutsunea eta eragiten digun samina osatzeko edo bideratzeko ere bada hileta errituala; bizion sentipenean hartzen du hilak atseden. Biziontzat dira hiletak.

Hil berri den senide edo lagunari hileten bitartez esaten diogu agur, edo gero arte, gure sinesteen arabera, eta beharrezkoa zaigu hiletaren erritual osoa egitea, gorpua edo errautsak aurrean direla eskuarki, elizkizun edo omenaldi zibilen batekin.

Azkenean, gorpua ehortzi edo errautsak haizetaratu eta oroitarriren bat ipiniz, hila oroitarazi eta omendu edo gurtu ahal izateko lekua zehaztuko dugu.

Diren eratakoak direla, hiletek badute euren arautegi propioa. Hiletetan, beilatik hasi eta dena amaitu arteko denbora horretan, hilaren edo haren irudiaren aurrean hedatzen den isiltasunak biltzen du, nolabait, ingurua. Gogoratu Lizardiren *Bihotzean min dut* hileta eresia, edo Txikiren amak esaten duena

isiltasunaz eta kaleetako zapata hotsaz. Hileta omenaldietaneta egiten diren oihu eta aldarriek, edo sarritan erabili *Gernika* hileta martxak edo *Agur jaunak* ez dute, formalki, isiltasun hori desegiten. Eta, isiltasun horrek, samina eta hilaren hurbilenekiko elkartasuna eta errespetua adierazten du batez ere.

Hilarekiko azken agurra "zuzen" egitea beharrezkoa zaigu. Hala ez egiteak nolabaiteko profanazioa suposatzen du hileta errituatlean edo omenaldian, eta batik bat senideen eta tribuaren –erkideen– sentimenduetan. Hilari azken bidaiarako edo azken atsedenerako "atarikoa" egiten diogunean, modu publikoan arren intimoan ari gara, geure samina eta maitasun urratua tolesgabe azalduz, eta, horrexegatik hain zuzen, iraina irainago eta saminago bihurtzen da –suminago ere bai– hiletak debekatzen dituztenean edo hileta omenaldira elkartu den jendea zafratu eta sakabanatzen dutenean indarrez eta harrokeriaz. Ondo dakigu, gainera, legearen eta agintearen totalitarismotik politikarien zinismoak eta epaile eta polizien indarkeriak mingarriago bilakatzen dituela horrelako egitateak.

Gizaki legez geure buruarekiko kontzientzia hartzeari, eta heriotzaren kontzientziari bereziki, lotua dago, dirudienez, hileta erritualen sorrera. Eta hilobiak eta asabak gurtzea giza kulturaren ezaugarri antzinakoenetatik dator, ez da, beraz, harritzekoa tamalez, boterearen aldeak, aginteak hilekiko auzia baliatzea, hain zuzen, gatazka guneetan hilaren senide, tribu edo herriaren samina areagotzeko eta umiliaketa bilatzeko. Giza ezaugarritik urrun dauden jarrerak eta ekinbideak erabiltzea, alegia, eta gehien mindu gaitzaketenak beraz, menperatu nahi dituzten herritarrak eraisteko eta haien arima zapaltzeko.

Ondo ikasi dugu euskal militante abertzaleen hiletak eta hilobiak, oroitarriak eta omenaldiak jo puntu lehenetsiak direla espainiar agintari, polizia eta epaileentzat eta euskal kolaboratzaile suharrentzat. Hileta horiek baliatu izan dituzte sarritan senideak areago mindu eta umiliatzen saiatzeko, euren oldarrarekin euskal militante erorien inguru afektiboa zapaltzen ahalegintzeko.

Horren adibideak edozein leku eta garaitan aurki ditzakegu bila hasiz gero. Matalas zuberotarraren historia gureganaino iritsi da, aginteak herritar jarkiaren hilotzaren bitartez herria bera umiliatu eta zapaldu nahiaren erakusgarri… Baina beste halako zenbat geratu dira ahanzturan ez bada isilean ordutik gaur artean?

Bai geuretzat eta bai geure ondorengoei begira, tamalgarria litzateke ahanzturaren ubera horri amore ematea. Gehiegi baitira isiltasunera kondenatuak, aginteen larderiapean isilaraziak.

Madrilgo eta Pariseko aginteek, Gasteizko eta Iruñeko gobernarien esku serbitzalen laguntza zintzoarekin, beraien hilak eta oroitarriak sakratutzat dauzkaten bitartean, ahalegin sutsuan jarduten dira euskal militanteen hileta omenaldiak zafratzen, atxilotzen eta epaitegietara eramaten. Euskal militante abertzaleen oroitarriak kendu eta kendu arazten dituzte gaur ere, epaitegien mehatxupean edo beste aitzakiaren batekin. Indarrean eta agerian erauzten dituzte hilen oroitarriak, edo isilean eta ezkutuan apurtu.

Memoriaren lekuak dira hilobiak, oroitarriak, hilerriak. Oroimen guneak dira. Senideak, lagunak… hilaren oroitzan eta omenean batzen direnen lekuak. Leku horietan datza borrokan eroriaren irudi fisiko edo izpirituzkoa.

Sinestunentzat tenplua bezain kuttun eta ukiezina da, esango nuke, senide eta lagunentzat beraien hilaren hilobia eta oroitarria. Oroimenerakoak diren leku horietan elkartuta omentzen ditugu urtez urte, belaunaldiz belaunaldi, gure aurrekoak, gure tribu kideak edo burkide hilak. Gogoratze eta omenaldi bakoitzean hila berpiztu egiten dugu nolabait; hark lagatako hutsunea osatu nahi dugu ekitaldi kolektibo horren bitartez, eta samina sendatzen dugu erritualean. Oroitzen dugun eta aipatzen dugun heinean gure artera ekartzen dugu senide edo burkide hila, eta oroitza-erritual horretan batu eta sendatu egiten gara biziok.

Giza eskubideak aipatzen dituzte autoritateek politikoen agintetik, epaileen boteretik eta mota guztietako irakaspenak eman gabeko onik ez duten ahots guztietatik. Baina gero, irakaspen eta teoria horiek guztiak eguneroko errealitatera jaisten direnean –liburu honetan datozen hainbat testigantzek adierazten duten testuinguruan–, argi baino argiago uzten digute euren giza eskubideez ari direla, eta menperatu nahi gaituztenon eskubide pertsonal eta kolektiboak ez zaizkiela axola, ez direla existitzen, ez direla kontuan hartzekoak.

Militante batzuen senideen testigantzak batuz, antzinako eta ez hain antzinako hiletei buruzko gogoetak gehituz osatua da liburu modu hau. Eskerrik beroenak eman nahi dizkiet testigantza horiek bidali dizkidaten guztiei.

Aldi berean barkamena eskatu nahi diet euren testigantza bidaltzeko prest zeuden beste guztiei ez banaiz haiengana iristeko gai izan. Ez dira gainditzen errazak honelako jarduerarako kartzelak ezartzen dizkigun trabak. Egin nahi dugun apurra bigarren edo hirugarren pertsonen bitartez bideratu beharrak, erruz moteltzeaz gain, zaildu eta nahastu egiten du edozein ekimen.

Barkamena eskatu nahi nieke, halakorik balitz, nire eskuetara bidean kartzelaren ahutzetan galdutako testigantza igorleei.

Liburu, fotokopia, eta beharrezko materiala biltzen lagundu didatenei; idatzi ahala kapituluak irakurtzeko pazientzia eta aholkuak emateko animoa izan duten modulu kideoi; lana zuzendu didan irakasleari eta argitaratzeraino eraman dutenei; nire esku idatziok ordenagailura pasa, enkarguak bideratu eta nire lainezak jasan dituzten etxekoei, eskerrik asko. Eskerrik zintzoenak guztioi.

*Herrera de la Manchan, 2013ko uztaila*

# 1. KIRRULI

Euskal presoen kolektiboan bigarrena izan zen Joseba Asensio *Kirruliren* heriotza. Aurrenekoa, gure aroari dagokionean beti ere, Jose Ramon Goikoetxearena izan zen, hark 1985eko ekainaren 26an bere buruaz beste egin baitzuen Alcala Mecoko espetxean.

Urtebete geroago gertatu zen Kirrulirena, 1986ko ekainaren 8an hain zuzen. 25 urte geroago, egun haietakoaren oroitzapenez galdegin diot Pakito Lujanbiori hemen bertan, Herrera de la Manchan:

> Oso zehatzak ditut orduko oroitzapen batzuk, oso biziak; beste batzuk lanbrotsuagoak, ez hain argiak. Bezperan, larunbatean, bisita eguna izan zuten bizkaitarrek, eta, bisita ostean, patioan paseatzen ikusten dut Kirruliren irudia.
>
> Udaberritik udara zihoan ordurako, eta eguraldia berotzen ari zen hemen. Txankleten antzeko larruzko sandalia batzuekin, praka motxetan, patioan alde batera eta bestera, presoak sarri ohi dugun paseoan ibili zen, bisitaren gorabeherak birgogoratzen, birbizitzen, dudarik gabe. Gogoan dut oso eguraldi ederra zela egun hartan. Hilabeteren batzuen buruan zigorra beteta kaleratzekoa zelakoan nago, eta horretan ere ilusio handia zeukan dudarik gabe. Politika, kaleko gizarte giroa, oso modu aktiboan bizitzen zituen Kirrulik. Kaleratzean zer aurkituko zuen, zer egin zezakeen… Kezka horiek bazituen.
>
> Gipuzkoarrek hurrengo egunean, igandean genuen bisita, eta bisita egunetako alaitasun puntu horrekin jaiki, ahalik apainen prestatu eta patiora jaitsi ginen. Gogoan dut

galeria ezberdinetan geundela; batzuk jangela aldetik jaisten ginen, eta besteak liburutegi aldetik. Orain gu gauden galeria honetan zegoen Kirruli.

Kontua da gu patiora jaitsi eta gerora ere ez zela inor agertzen galeria honetatik. Zenbait denborara, ordea, Busselo jaitsi zen; oso goibel, burumakur, jaitsi ere. Zer gertatzen zen galdetu genion.

“Kirruli hilda dago”, erantzun zigun.

“Zer ari haiz esaten?”, galdetu genion sinesgaitz.

“Kirruli hil dela!”, bota zigun berriro, bere onetik aterata.

Denok atera gintuen geure onetik gertaera hark; eguna bera hautsi zitzaigula esango nuke.

Bisitetara joan ginen, eta gogoratu uste dut iloba jaioberria ekarri zidatela lehen aldiz. Baina ezinezkoa zen bisita eguneko ohiko aldartea aurkitzea norbere baitan.

Egun hartan eguraldi txarra, lanbrotsua edo, egin zuela oroitu uste dut, baina nire memoriaren moldaketa izan daiteke, egun hartako geure tristuraren ondorio alegia. Burua jaso ezinik, elkarri begirada eta keinu tristeak eginez igaro genuen eguna… isiltasuna gogoratzen dut; gure arteko isiltasun hura.

Seguru nago bazituela hurrengo egunerako asmoak, eta agian kideren batekin hitzartua zen hau edo hori egiteko. Denok izaten ditugu biharamunerako plan txikiak, eta beharrezkoak zaizkigu aurrera jarraitzeko.

Heriotza, kide edo lagun batena denean batez ere, beldurgarria, itogarria da kartzelan.

1986 hartan hemen zeuden arren aspalditxoan kalean dauden kide ohiei galdeginda, honela diote Jose Ramon Saratxaga *Errok*, eta Inazio Mentxakak hurrenez hurren:

> Herrerako hirugarren moduluan geunden orduan, beste 50-60 kiderekin. Sasoi hartan, Herreran, Alcalan eta Carabanchel-Hospitalean geunden euskal preso politiko mutilak.
>
> Langraitzen ere bazeuden bakar batzuk. Neskak, berriz, Carabanchelen zeuden denak.
>
> Futbolean aritzen zirenetakoa zen Kirruli, eta arnasa hartzea kostatzen zitzaiolako kexaz aritu zen aurreko egunetan, partiduak amaitzean batez ere. Medikuarengana izana zen bularreko arazoengatik, baina ez zioten jaramon handirik egin. Garai hartan esaten eta eskatzen genuen, 200 kideetatik 150ek behar zutela tratamenduren bat, aurretik egin izandako borrokengatik batez ere.
>
> Kideen artean jantzi eta kartzelako zentrotik bisita lekuetara bitarteko pasillo luze zabal hartan ipini zen Kirruliren gorpua, ohatila baten gainean, ikurrin batez estalita. Bere lagun min batzuek (Medius, Joseba Zuazo, Ion Iurrebaso, gu geu) egin genion beila, gorpua familiari entregatu zitzaien arte.

Kide batzuek beila egiten zioten bitartean, gainontzekoak taldeka joan ginen gorpua ikustera. Gorpua ikustera eta azken agurra egitera. Agur xumea izan zen, baina agur sentitua eta zintzoa dudarik gabe. Kirruliren inguruan egon ginen, zutik, otoitz isilean. Otoitz

paganoa nahi bada, baina otoitza azken batean. Zer besterik da ba azken agurra, bidean erori den kideari egiten zaion aintza eskaintza, batak eskaintzen dion pentsamendu isila, besteari barru-barruan puskatzen zaion negarra?

Aiene mutua negarrean kraskatzeko baino zaurituago zeuden artean Kirruliren senideak: "Ilunabarreko bederatziak inguruan iritsi ginen Herrerara", dio arreba Begoñak. Baina eguna luzea izana zen ordurako, eta erruz luzatuko zen artean.

"Amak deitu zidan", gogoratzen du Begoñak, eta horrela jarraitzen du:

> Hil egin dute, hil egin dute…", oihu egiten zuen. Herrerako zuzendariak deitu zion berria emateko. Kartzelako zuzendariari deitu nion berehala, anaia hil al zen galdetuz. Baietz, hila zela, erantzun zidan segundo batzuen ondoren, eta familiaren zain zeudela, gorpuaren kargu egitera joan gintezen.
>
> Aitak sasoi hartan turnotan egiten zuen lan eta artean ez zekien ezer. Amarenera bidean topo egin nuen Maite Perezekin, eta hura joan zen Josebaren neskalagun Itziarri abisua ematera. Edurne Brouardi ere deitu nion eta hura hasi zen jende gehiagoren eta abokaturen baten bila. Deien anabasa hartan tentsioagatik bihotzeko larrialdia izan zuen amak. Halako batean lortu zuten aitarekin hitz egin eta etxera behar zuela esatea; gertaeren berri ematea izan zen gogorrena. Urruburu sendagilea agertu zen.
>
> Autoak bilatu eta Herrerarantz abiatu ahal izan ginen arratsaldeko ordu biak aldera. Luzea eta gogorra egiten zitzaigun bidaia.

> Kartzelako zuzendariak hartu gintuen han eta azalpen formalen batzuk eman zizkigun. Josebaren gorpua, izara zuri batean bilduta zegoen, ikurrin birekin estalita. Han zeuden bere kideak ere, beilan. Ertz batean zegoen Kirruliren motxila, bere gauzekin, gehiago erabiliko ez zituen zapatila askatuekin. Inork ez zuen ezer esaten, denok egon ginen isilik, hunkituta… Bisita lekuaren ingurura eraman genuen azkenean gorpua, eta han egin ginen gorpuaren kargu Bilbotik joandako lagun eta senideok.

"Kirruliren senideak, ezker abertzaleko kide batzuekin batera joan ziren Herrerara", diote, berriro hitza hartuz, Mentxakak eta Errok:

> Beilari zeuden presoekin batera egon ahal izan ziren papergintza eta tramiteak amaitzen ziren bitartean.
>
> Azkenean *Eusko Gudariak* eta *Agur Jaunak* txistuarekin joaz agurtu zuten Herrerako kideek Kirruliren gorpua.

Bere arreba Begoña mintzo da berriro:

> Gogoan dut gau zoragarria egiten zuela; kartzeleroen etxeetako loreen usaina iristen zen…
>
> Bi ordutatik bi ordutara Guardia Zibilaren auto bat pasatzen zen. Ordurako erabat zurrun zegoen Josebaren gorpua. Goizeko zazpietan kartzelero bat etorri zen, Josebaren hatz markak hartzera eta aita jarki zitzaion, inork ez zuela ukituko esanez, nahiko txikitu zutela-eta ordurako. Tira-bira baten ondoren hatz markarik gabe alde egin zuen kartzeleroak. Gero Hoyo de Manzanares inguruko hilerrira eraman zuten gorpua. Gogoan dut ateko plaka, 36an gorrien esku eroritakoen

gorazarrez. Memoria historikoa, badakizu. Bi forentse ekarri zituzten Madriletik eta baldintza penagarrietan egin zioten autopsia. Senide eta lagunek ikusten genuen odola eta ura atepetik jarioan…

Ondoren Josebaren gorpua laztandu genuen batzuek, Basurto ospitaleko tanatoriora eramateko agindu judizialarekin hilkutxa prezintatu aurretik.

Halako batean abiatu ginen gorpuarekin, Madriletik aurrera polizia auto kamuflaturen bat zaindari genuela. Autopista hartuta berriro Bilborantz abiatzean hasi ziren arazoak; hiru autoz osatutako gure karabanari erasoka eta joka hasi ziren poliziak euren autoekin, geratzera behartzeraino. Mirandatik abiatu eta Basurtora iristeraino, guztiaren filmaketa badu *TV3k*, oker ez banago.

Aurreneko tirabira horren ondoren aurrera egin genuen, igarotzen ginen herri guztietan elkartasun keinuak jasoz.

Bilbora heldueran, Zabalburun gerarazi gintuen poliziak, bertatik bertara erasoz auto guztiei, segizio osoari, pilotak jaurtiz eta kulataz joaz. Joseba azken aldiz etxera eramatea oztopatu eta galarazi nahi ziguten. Basurtoko ospitalera eramatea zela agindua, zioen polizietako agintari batek, "jar zaitez nire lekuan", erantzun nion.

Autonomia kalerantz jo genuen, elkarretaratze bati ekinez; jende multzoa elkartu zen poliki-poliki eta Basurtora joan ginen horrela. Goizeko ordu biak aldera, hango tanatorioan ipini zuten gorpua, eta hantxe egin zitzaion gaubeila senide, lagun eta ezker abertzaleko militanteen artean.

> Hurrengo egunean arratsaldeko bostetan abiatu zen segizioa Derioko hilerrira. Arenalean geraldia egin eta azken agurra eskaintzea zen asmoa, hauteskunde kanpaina zela-eta hantxe baitzegoen Txema Montero.
>
> Gran Viatik igarotzean gerarazi eta Maximo Agirre kalera bideratu gintuen poliziak. Hortxe gertatu ziren munduari itzulia eman zioten irudi haiek. Hilkutxa bahitu zuten! Jendeari erasoan ekin zion poliziak, basatiki. Hilkutxa puskatuta zegoen azpitik, baina hura babestu nahian ari zen jendea. Lurrean ipinita, kutxa gainean eseri ginen senide eta lagunak… Errukirik gabe jo eta zafratu gintuen poliziak. Gogoan dut agintarietako baten ondoan zebilen polizia gazte bat, zelako amorruarekin kolpatzen zituen neskak, Kirruliren arrebok ere bai. Hilkutxa bahitu zuten azkenean, eta Deriora eraman. Han polizia mordoa zegoen; batzuen esanetan hilerri osoa arakatu omen zuten txakurrekin, baita gau osoan ere. Azkenean hurrengo egunean lur eman zioten Kirruliri, *Eusko Gudariak* eta Sorozabalen hileta martxarekin.

Orduan HBko mahai nazionaleko kide zen Izaskun Larreategik honela kontatzen zituen Basurtotik Deriora joanerako gertaera haiek, 1986ko ekainaren 12ko *Egin* egunkarian:

> Polizia pila hura ikustean, gurekin ziren udaltzainei esan genien edozein probokazio ekiditea zela gure asmoa eta ibilbidea aldatuko genuela. Baina, udaltzainak aurrean genituela Ercilla eta Pozas kale-gurutzera iritsi ginenean, furgoneta Avia mordoa sartu zen Ercilla kaletik. Ez dakit zenbat izango ziren, baina asko, eta pasabidea itxi ziguten modu oso erasokorrean, armak astinduz.

> Horren aurrean, autoetatik jaitsi, Josebaren gorpua lepoan hartu eta oinez jarraitzea erabaki genuen. Polizien langa gainditu genuen. Bere neskalagun Itziar zihoan aurrean arrebetako batekin; atzean, beste bi arrebak, eta ondoren ni bere aitarekin. Beste lagun batzuek hilkutxa zeramaten. Horrela gindoazela Avia mordo bat sartu zen Rodriguez Arias kaletik; korruan bezala zabaldu, eta tiroka eraso ziguten modu basatian.
>
> Bere neskalagunari egin zioten tiro lehenengo, eta bere familiari, eta hilkutxa zeramatenak jotzen zituzten bien bitartean, garondoan eta parteetan batez ere. Baina aurrera jarraitzen zuten hala ere gorpuarekin…
>
> Hilkutxa lurrean ipini eta gainean eseri ginen, lapurtu ez zezaten. Basatiki eraso zuen poliziak. Arrebari burua ireki zioten, kulatarekin ziur aski; aita eta neskalaguna hebaindu zituzten… erori eta jaiki, erori eta jaiki egiten zen aita, eta hala esan zien: "Josebak irabazi egin dizue azken gatazka, hil-ondoan ere!". Hari laguntzera hurbildu zenean sekulakoa eman zioten Txomin Ziluagari, lurrean konorterik gabe utziz.

Berrogei lagun eraman zituzten Basurtoko ospitalera arta beharrez, aski larri haietako batzuk. Emakume batek bular bat galdu zuen gomazko pilotakadaren ondorioz. Zauritu horiez gain, beste askok jasan zituen urradura, kolpe eta abar.

Poliziak hilkutxa bahitu eta Derioko hilerrian, "hamalau-hamabost lagun eta polizia saldo demasa", dio Izaskunek, eta honela segitzen du:

> Depositura eraman zen gorpua. *Eusko Gudariak* eta *Internazionala* abestu zitzaizkion. "Agur nire bihotzeko seme, nire bizitzako onena", amaitu zuen amak.

Hurrengo egunean, azkenik, lur eman zioten Kirruliri Derioko hilerrian hainbat lagunen artean, bertso, aurresku, hitzaldi xume eta ereserkien ondoren.

## 2. LASA ETA ZABALA

1983ko urriaren 15etik 16rako gauean Baionan desagertu ziren Joxi Zabala eta Joxean Lasa tolosar errefuxiatu gazteak.

Hiru hilabete geroago, 1984ko urtarrilaren 20an, *Radio Alicantera* dei eginda, GALen izenean errebindikatu zuen pertsona batek Joxi eta Joxeanen hilketa, baina 1995a arte ez da haien aztarnarik izango.

Urte horretan, 1995eko otsailaren 17an, Alacanteko Entzutegiko Polizia Judiziala den Jesus Garcia inspektorea Madrilgo Entzutegi Nazionaleko Ignacio Gordillo fiskalaren aurrera agertzen da, 1985ko urtarrilean Busot-en nekazari batek aurkitu zituen bi gorpuak Joxi Zabala eta Joxean Lasarenak izan daitezkeela esanez. Hilabete inguru geroago, 1995eko martxoaren 21ean, baieztatuko da Joxi eta Joxeanen gorpuzkinak direla Alacanteko Busoten aurkitutakoak.

Forentseen ikerketak, epailean aginduak… egunak igarotzen dira. Senide eta lagun batzuk Busoteraino doaz martxoaren 27an, gorpuak agertu ziren lekuan lore eskaintza egitera. Alacanteko 2. instrukzio epaitegiko titular Carmen Menarquezek familia bakoitzeko hiru kideri ematen die baimena gorpuzkinak ikusteko. Menarquezek Madrilgo Entzutegi Nazionalera bidaliko du afera, eta han Carlos Bueren epailearen esku geratuko da.

Bitartean hainbat herritan, Tolosan-eta, zenbait elkarretaratze egin ziren gazte bien oroimenez. Baina lemari gogor eusten zioten EA, EAJ eta EE alderdiek, GALen hilketak eta gorpuen desagerpenak senideei eragin zien saminari eta atsedenik ezari larderiaren ozpina

jaurtiz. Horrela, auzi hartan senideei besteak beste laguntza ekonomikoa ematea eskatzen zuen mozioari ere ukoarekin erantzun zioten alderdi horiek Tolosako Udaletxean.

Denbora igaro zen, ekainaren 20an Entzutegi Nazionaleko epaileak gorpuzkinak herriratu eta hobiratzeko agindua eman zuen arte. Ebazpen berak esaten zuen familia bakoitzetik senide bat joan zitekeela, hala nahi izatera, gorpuzkinak kutxan prezintatzen zituztela ikustera Madrilgo Toxikologia Institutu Nazionalera.

Hurrengo egunean Madrildik Hondarribira abioian eraman, handik Tolosako hilerrira, eta egun horretan bertan, 21ean alegia, lurperatzeko agindua zen epailearena. Ez zion jaramonik egiten senideen nahiari.

Ekainaren 21ean, asteazkenarekin, gorpuzkinak noiz iritsiko joan ziren Lasa eta Zabalaren senideak Hondarribiko aireportura. Han, Ertzaintzaren aginteetako batek esan zien zein ateetan entregatuko zitzaizkien gorpuak, baina gero ikusi zuten beste ate batetik irteten ari zirela hilkutxak zeramatzaten autoak.

Senideez gain, lagunak eta errefuxiatu erailei azken omenaldia egin nahi zien jende ugari hurbildu zen Hondarribira. Baina baita Guardia Zibil, Polizia Nazional eta Ertzaintza ere.

Arratsaldeko bostak eta hogeita bost zirenean iritsi ziren gorpuak Hondarribira. Haiei harrera egitera hurbildu zen jendeari bi ordu lehenago oldartu zitzaion polizia nazionala. Oldar horretan laguntzera gehitu zen Ertzaintza. Aireportuko ateak eta kristalak puskatu, jendea kolpatu eta zauritu… Senideak, ezker abertzaleko ordezkari politikoak, lagunak egurtu eta zauritu zituen poliziak.

Madrildik Guardia Zibilak zainduta zihoazen gorpuzkinak, Ertzaintzak hartu zituen Hondarribian. Ordubete geroago, seiak eta hogeita bost inguruan, Tolosara abiatu ziren hil-automobilak, ertzainek zorrotz zainduta.

Hondarribitik Tolosara ahalik bizkorren joan ziren senideak, gorpuak zeramatzaten automobilei jarraika. Hilerri sarreran hartu zituzten lehen zartadak. Eta hala ere, hilerrian barruan jadanik, "kutxaren gainean, loreak ipintzera gindoazenean entzun genuen 'Eraso, eraso!' agindua, eta azalpenik ez daukan egoera eragin zuen Ertzaintzaren aginteak…".

"Orduan gertatu zena kontatzeak… eztarria larritzen dit. Koroak airean ikustea, senideak lurrean, jendea negarrez, kolpeak… oso zaila da samin hori guztia azaltzea", zioen Joxiren anaiak egun batzuk geroago *Egin* egunkarian.

Irudi haiexek izan ziren, hain zuzen, telebistako informatiboetan behin eta berriz errepikatu zituztenak; ertzainak jendea kolpatzen hilerrian, senideak eta lagunak odoletan… Gertaera bati buruzko informazio baino, GALek hasitako ekintzaren amaiera-ekitaldia zirudien sarraskia izan zen.

Gipuzkoako gobernadore zibil Juan Mari Jauregik ere esan zuen gorpuak zuzenean eramango zituztela Hondarribitik Tolosako hilerrira. Omenaldi, hileta, azken agur edo antzekorik ez, beraz, bidean.

Tolosako hilerriko kaperan ere ez zituzten bakarrik laga Lasa eta Zabalatarrak, euren senide hilei azken otoitza egiten. Kapera barruan baitziren poliziak, kale jantzitan.

"Hau umiliaketa bat izan da", zioen Zabalatarretako batek; eta helburu horixe zuten, ezbairik gabe, poliziek, epaileek, politikari totalitarioek. Baina ez zen horretan amaitu umilazio eta laido hura. Asteazkenean inguratuta bazeukaten hilerria, gorpuzkinei lur ematera joan ziren lagun eta senideak zafratu, iraindu eta zauritu ondoren ere hantxe jarraitu zuen Ertzaintzak, *hilerrietako bakea* ezarri eta mantentzeko ezin grafikokiago erakutsi zuenez.

Gau osoan ez ezik, hurrengo goizean ere hilerria zaintzen, hilak jaiki ez zitezen guardia egiten zeuden ertzainak Lasa eta Zabalaren senideak lore sortak eramatera joan zirenean. Dokumentuak erakutsi behar izan zituzten barrura sartzeko, eta hilobien ondoan intimitate apur bat aurkitu eta une batez hantxe egoteko asmoa bazuten ere, armatuta eta kaputxa jantzita barreka eta berriketan ari ziren bi poliziek eragotzi zieten bilgunea.

## 3. INAZIO MARIA GABIRONDO *DONIBANE*

1980ko uztailaren 13an ETAko bi kide eta polizia bi hil ziren ekintza batean Orion. Carlos Lucio eta Donibane ziren ETAko bi hilak.

“Hurrengo egunera arte ez genuen jakin hiletako bat gure anaia zenik”, dio Joan Mari Gabirondok.

> Gogoan dut gurasoek eskurtsio bat edo zutela, urtero egiten zuten Itziarko jende multzo batek; nonbaitera joan egun pasa, bazterren batzuk ikusi eta gero bazkari legea…
>
> Guk ere, esan beharrik ez dago, ohi genuen martxan pasa genuen igandea, Mandiopetik Txitxarrora eta azkenik Hostalera joaz, eta hamabiak alderako etxera. Hurrengo goizean jaiki eta astelehen ederrarekin joan nintzen Zumaiara, lanera. Koinatuarekin egiten bainuen lan, elektrizista. Ohitura nuen lanera bidean *Egin* erostea, koinatua eta besteak azaltzen ziren bitartean begirada bat emateko. Horrela jakin nuen Orioko ekintzaren berri, nola bi txapeloker eta bi taldekide hil ziren, baina izenik ez. Baina, egunkariari begira-begira, izenik ez agertzean burua martxan jartzen duzu, eta gogoratzen naiz barruan zerbait sentitzen nuela, bera ote zen bat… Horrela pasa nuen goiza eta, eguerdian, koinatua eta biok arrebarenera joan ginenean bazkaltzera, ohartxo bat aurkitu genuen han bazkariarekin batera; bera Itziarra joana zela eta telefonoz deitzeko, esaten zion Migeli, senarrari.
>
> Bazkaldu eta lanera joan ginen eta, handik deitu ondoren, Itziarra joan zen Migel; ni gelditzeko tailerrean eta txukuntzeko hura apur bat, laster etorriko zela. Horrela, gogoratzen

naiz ofizinan sartu nintzela berriro; Egina hartu eta begira-begira egon nintzen denbora luzean, malkotan, zeren, nahiz eta ziur ez jakin, han ikusten bainuen bi etakide erori zirela, eta ikusirik zer ari zen gertatzen –arreba Itziarra joana, errekadua, telefono deia, koinatua ere Itziarra–, dena elkarlotzen zen. Handik pixka batera, laurak aldera edo, amak deitu zidan lantokira. Telefonoa hartu bezain pronto, ama poliki-poliki hasi zitzaidan, arreba Nekane eta Migel orduantxe zihoazela nire bila, bidean zirela, Inazio Mariri zerbait gertatu zitzaiola… Bai ama, esan nion; Orion ezta? "Bai, Juan Mari, Orion".

Tailerretik irten eta ehun metrora topo egin nuen arreba eta koinatuarekin; hirugarrena anaia Isidro zela uste dut kotxean. Kotxean sartu atzeko aldean eta arreba besarkatu nuen. Beno, biok besarkatu genuen elkar, negarrez. Ezer esan beharrik ez zegoen.

Gure amari goizean deitu zion norbaitek, hamarrak-hamaikak alde horretan. Poliki-poliki, dena braust kolpean eta zakar gabe, esan zion Iñakiri zerbait gertatu zitzaiola Orion. Hortik hasi zen mugitzen ama, Nekane eta Isidrori deitu… Gero, telebista hiruretako berrietan uste dut hasi zela izenak ematen.

Gu, Zumaiatik etxeratu ondoren, berehala abiatu ginen Donostiako Polloera, Migel koinatua eta Nekane, Isidro eta neu. Hara iristean, txapelokerrez josita zegoen. Karnetak erakutsi ondoren pasatzen utzi ziguten, gorputza ezagutzera.

Isidrok esaten du lehenengo gorpuari izara jaso eta anaia ez zela ikustean halako poz zirrara bat sentitu zuela. Itomenean denaren arnasa, hondoa jo duenaren euforia hori, inoiz aipatu izan duguna, zeinek ez du sentitu noiz edo noiz, guregandik aldentzen dugun zorigaitza hurkoarengana doala jakinik

ere… Baina bigarren gorpuari altxatu zionean izara, akabo gure poxa…

Autopsiak eginda zeuden biak. Besarkatu eta aurpegia igurtzi eta igurtzi egiten zion gure arreba Nekanek… Gero amari esaten zion, gaixoak, igurtzi eta igurtzi egiten zuela, ea beroa etortzen zitzaion, berotu nahian… Baina alferrik! Ni gogoratzen naiz pauso bat atzerago nengoela; arreba ikusten nuen igurtzika eta igurtzika eta neu ez nintzen ausartzen. Horrela hamar-hamabost minutu utzi ziguten, kanpora behar genuela esan ziguten arte txapelokerrek. Orduan, agur bezala, hurbildu eta bi-hiru masaileko leun eman nizkion, Isidrok, bizkarretik helduz, "goazen" esanez, handik atera ginen arte.

Hurrengo egunean, asteartean, goiz abiatu ginen Donostiara, Polloera, gorpuaren bila. Ez dakit zehatz baina hamarrak alderako han izango ginen, amarekin. Iritsi, nortasun agiriak erakutsi eta aurrera… eta, akabo amaren desioa. Azken laztana, semeari azken igurtzia egitea baitzen amaren nahia, azken musua ematea seme hilari, baina ez zioten utzi horixe egiten ere.

Gero, gorpua etxera ekartzea, hobiratu aurretik, hileten aurretik, arratsaldeko elizkizunak arte hilkutxa etxean sartzea zen amaren desioa, ikusi nahi zuelako; eta aita eta etxeko guztiona nolabait. Baina hori ere ez ziguten utzi. Aginduak ziren gorputza Donostiatik zuzenean Itziarko hilerrira joango zela. Ondo zainduta, hori bai; aurretik eta atzetik txapelokerrek ondo zainduta.

Iritsi ginen gorputzarekin Itziarra, eta Itziar goitik behera militarki hartua zegoen, herri osoa itxita, bertakoei bakarrik uzten zietelarik sartzen. Ikuskizuna zen, txapelokerrak herrirako

sarrera guztietan, mendi bideetan, muinoetan, kanposantu bidean, zelaietan… Eta harro; pattar botilarekin ospatzen bat baino gehiago, harrokeria ondo agerian erakutsiz, ikus genezan zein pozik zeuden.

Gorpua hilerrira eraman eta gero, herrian gora eta behera ibiltzeko ere, kanposantura joateko, karneta erakutsi behar…

Arratsaldeko elizkizunetara ez zioten inori utzi sartzen, senideei eta, gezurren bat tarteko, nola edo hala aurrera egin zutenen batzuei izan ezik.

Gogoan dut Debara jaitsi behar izan genuela paperen batzuk egitera Bixente Zulaika -kontzejala zen orduan-, Isidro eta hirurok, eta bueltakoan, Bentatik gora hartu genuenean, laster geldiarazi gintuzten. Dokumentuak eskatu, kotxetik jaitsi arazi, miaketa… Eta horretan geundela, txapeloker bat zuzen eta oldarkor neuregana zetorrela ikusi nuen, probokazio ezin nabarmenagoan… Albora egin behar izan nuen, baina metro bat harantzago egon izan banintz ere berdin etorriko zitzaidan gainera. Hain zebiltzan harro, probokatzaile, pelikuletako irudietan bezala, herrirako bide alboetan pendizen gainean euren *cetme* handiekin, pattar botilarekin ospatzen batzuk, alaitasuna erakutsiz… Gero esango dute guk ospatzen ditugula!

Arratsaldeko bostetan izan ziren hiletak. Ordura arteko orduak konturatzeke pasa ziren, batera eta bestera genbiltzala. Esan bezala, hiletetan ez zioten inori utzi Itziarren sartzen, senideei eta herri kaskoan bizi zirenei baizik. Herrikoa izan arren kaletik kanpo bizi zirenei buelta emanarazi zieten. Pentsa, eguerdi aldera gazte batzuk elkartu ziren kale barrenean eta txapelokerrek berehala sakabanatu zituzten. Ez zuten uzten hiru-launako multzorik egiten.

Elizkizunak amaitzean hilerrira abiatu ginen, batzuk aurrean lore koroekin eta haien ondoren gainerakoak. Ni Iñaki Olanorekin nindoala uste dut, bion artean koroa bat generamala, eta atzean beste anai-arreba eta senideak. Elizatik kanposanturainoko bidea ere dena hartua zeukaten, beren presentzia eta harropuzkeria ondo nabarmen erakutsi nahian… Badakizu Itziar bertatik hilerrira doan bideak nola daukan pendiza goikaldean; ba, pendiz horren gainean zeuden guardia zibilak, gure buruen parean euren bota militarrak, armak ondo erakutsiz. Beren oinpean geunden sentsazioa egiten zuen, eta hori bazekiten, noski.

Hemen, beste gauza guztien gainetik, gure amaren duintasuna azpimarratuko nuke nik. Esaten da, sutan jartzean frogatzen dela eltzea, eta une zailetan pertsonok. Gure amak ondo erakutsi zien une eta egun haietan duintasuna, bere tokian burua goian izanez, malkoak gerorako gordez. Koinata Arratek behin baino gehiagotan esan izan dit kanposantura bidean negar batean zihoala bera, eta egundo ez zaiola ahaztuko gure amak ondotik esan ziona: "Arrate, ez egin negarrik, hauek (guardia zibilek) horixe ere ez dute merezi eta". Alegia, hemen dauzkagu, buru gainean, barreka, baina gero egingo dugu negar; ez eman hauei plazer hori.

Arratek dio ez dakiela nondik ateratzen zuen amak indarra; iltzearekin josita bezala geratu omen zitzaion haren esana. Eta neuk ere pentsatzen dut entzun izan balu hori kaxan zegoenak, harro eta irribarretsu izango zela bere amaz.

Tira, gaixoak gerora ere ondo asko erakutsi du une zailetan dida egiten, negarrak gerorako utziaz. Halakoxea da gure ama, ikusi batean goxo-goxoa eta ahula ematen duena, baina behar denean inor baino gogorrago izaten ere badakiena.

Elizkizun eta hiletak amaitu ondoren, etxean elkartu ginen familiakoak; Nekane, Inma, Isidro eta ni anai-arrebok, aita eta ama, koinatu-koinatak… lagunen bat. Afari pasada egin eta berriketan egon ginen, eguna nola joan zen komentatzen… Nik esango nuke harro geundela… Samina barru-barruan genuen, jakina, eta tristurak estaltzen gintuen, baina… espanturik gabeko samin adierazpenetara ohituak eta heziak gaude, noski. Ama bera genuen horretan duinen, adibiderik onena, berea izan arren seguru asko, semea galdu zuenez, saminik urragarriena. Buru makurren, tristeen, gure aita zegoen agian, hitz egiteko ere gogorik gabe.

Hiletak eta hileta ondorengo oturuntza, etxekoak elkartu eta berriketan egotea, samina sendatu eta barne urradurak osatzeko terapia ere bada, azken bidaian joan den senidea gogoratzeko ez ezik. Oroimen gozoak agerian ipintzeko, azken batean, mikatzak estaliz. Nik horrela ulertu nahi izan dut behintzat.

# 4. MIKEL ZABALTZA

1985eko azaroaren 26an atxilotu zuten guardia zibilek Mikel Zabaltza eta Intxaurrondoko koartelera eraman. Luzera gabe, baina, Guardia Zibilak berak esan zuen ihes egin ziela orbaiztarrak, zuloren bat erakustera edo Endarlatsa aldera eraman zutenean. Hogei egun geroago, Guardia Zibila bera izan zen Mikelen gorpua Bidasoa ibaian aurkitu zuena, hogei egun horietan herritarrek, DYAko sorosleek eta inon ziren guztiek ingurune osoa goitik behera arakatu arren Zabaltzaren aztarrenik aurkitu ez zuten lekuan.

Mikel atxilotu zuten egun berean atxilotu zuten bere neska-lagun Idoia Aierbe. Honek, plastikozko poltsa batekin burua estalita ikusi omen zuen Mikel, Intxaurrondoko koartelera iritsi zenean. Geroago, gizon bat ikusi omen zuen, bi guardia zibilek zeramaten ohatilan.

Horiek ziren, gutxi gorabehera, datuak eta bertsio ofiziala. Baina asko dira gure historian Zabaltzarenaren antzeko bertsio ofizialak, eta, antzekotasun horri gehiegizkoa iritzi diogulako edo ez dakit zergatik, joera temosoa izan da gurean polizia, epaile, agintari eta enparauen bertsio ofizialak asko ez sinestekoa.

Horrela gertatu zen kasu honetan ere, eta mobilizazioak etengabeak izan ziren Mikelen gorpua azaldu arteko hogei egunetan. Mikel Zabaltza azaltzeko eskatuz hainbat herritan egin ziren elkarretaratze eta grebetan gogor aritu ziren Polizia eta Guardia Zibila, jendeari eraso eta edozein protesta ekitaldi zapuztu nahian.

"Gobernador, Mikel non dago?", galdetzen zioten elkarretaratuek Julen Elgorriagari, eta elkarretaratze haiek zafratu eta sakabanatzera polizia gehiago bidaliz erantzuten zuen Gipuzkoako gobernadore zibilak.

Abenduaren 15eko igandean jakinarazi zuen azkenik Guardia Zibilak Mikelen gorpua aurkitu zuela, urpekariek eta gainerako bilatzaileek arakatutako lekuan aurkitu ere. Guardia zibilek inguratu egin zuten gorputza zegoen lekua, senideei ere hara hurbiltzea debekatuz.

Gorputza azaldu zela jakitean, asanbladak eta elkarretaratzeak egin zituzten leku askotan, eta, horietatik batzuetan, Donostian, kasurako, gogor eraso zuen poliziak.

Gorpurik ez edukitzearen larritasuna, zalantza eta ez jakitea nagusi izan bazen ordura artekoa, senide hilari beila eta azken agurra egitea oztopatu nahi zuten orain polizia eta agintariek, Mikel atxilotu eta azken modu horretara eraman zuten berberek hain zuzen.

Epailea iritsi zenean, haren baimenarekin igaro ahal izan ziren senideak gorpua zegoen lekura… "Zer egin haute, zer egin haute", errepikatzen zuen Mikelen arrebetako batek. Amak, behazuna irentsiaz, dudarik gabe, "Gu euskaldunak gaitun, neska, eta euskaldunak barruan gordetzen dinagu mina, ez espainolak bezala aldarrika. Ez negarrik egin; ixilik, neska", esaten zion albotik.

Abenduaren 18an egin zituzten Orbaiztan Mikel Zabaltzaren aldeko hiletak.

## 5. GURUTZE YANCI ETA XABIER KALPARSORO *ANUK*

1993ko irailaren 23ko goizaldean Urnietan atxilotu zuen Guardia Zibilak Gurutze Yanci, beste bost lagunekin batera. Hurrengo egunean, irailaren 24ko goizaldean, Madrilgo Tres Cantoseko ospitalera zeramatenean hil zen, zergati naturalen ondorioz, barne ministroak esan zuenez. Gogorra da osasun arazo berezirik gabe bizi den jendea modu naturalean hiltzea komisaldegietan. Kuartel eta komisaldegietako igaroaldiaren ondorio naturala heriotza dela ikusi dugu behin eta berriz, barne ministroen, epaileen edo unean uneko agintarien bertsio eta autopsia ezin aproposagoak gorabehera.

Egundo ez dira gai izan euren egitateak gordin-gordinean aitortu eta euren gain hartzeko; egundo ez dute onartu inor torturatu egin dutenik, hiltzeraino torturatu dutenik… Horixe dela esango nuke hain zuzen izu-eragile, hain aizarotsu, hain… bihurtzen dituena: egitate aitorrezinak komisaria, kuartel, kartzelako itzalgune ezkutuetan egiten dituzte, eurek eta euren atzaparretan erori direnek baizik ezagutzen ez dituzten zuloetan; larderiaz agertzen zaizkigu, inork ikusten ez duenarekin mehatxatuz.

Gurutze Yanci, 31 urteko urnietarra, atxilo eraman eta hilotz itzuli zuten. Epaileak telegramaz jakinarazi zien etxekoei Gurutze hila zela.

Egun horietan atxilotu zuten Xabier Kalparsoro *Anuk* ere, Durangon. Irailaren 23ko gaua zen, eta, gau horretan bertan, goizaldera, Basurtoko ospitalera eraman zuten Indautxuko poliziek, komisaldegiko leihotik salto eginda zauritu zela esanaz…

Egiarik ez inoiz; beti gezurra. Beti istorioak. Bertsio ofizialetan edozer esateak, beti oso antzeko ipuinak kontatzeak, boterearen harropuzkeria ez ezik, poliziak, epaileek, agintariek herritarrei dieten mespretxua eta axolarik eza adierazten du. Eta kasu zehatz bakoitzean, Gurutze Yanci eta Xabier Kalparsororen kasuetan oraingoan, zapalduta oinpean nahi duten gizartearen eta Euskal Herriaren pertsonifikazioa dira haien senideak. Horregatik iraultzen dute haiengan euren larderia eta mendeku gose guztia.

Irailaren 26an hil Anuk Basurtoko ospitalean, eta hil ondoren ere hura zaintzen jarraitu zuten poliziek, senideei ere sarbidea eta ikustea debekatuz. Areago; senide eta lagunak ospitaletik kanporatu nahi izan zituen poliziak.

Ez da, noski, debaldekoa, ez kasu hauetan eta ez beste hainbat eta hainbatetan, euskal abertzale hilen edo erailen gorpuekin eta haien senideekin polizia mota guztiek izan duten jarrera.

Hilberriaren senideak saminak erasanda dauden memento horietan erasotzea, gorpua bahituz, kenduz edo lurperatzera behartuz umiliatzea, etxeko eta lagunen iritzira hiletak egitea debekatzea, tradizio bihurtzeko adina aldiz egin izan dute agintariek, botaredunek, historian zehar.

“Templinen gorpua gestapokoen zaintzapean eraman zuten. Lakratua zegoen hilkutxa eta emazteari ez zioten utzi aurpegiari azken begirada eman ahal izateko irekitzen. Hilkutxa bi metro lurrez estali zutenean alde egin zuten zaintzaile naziek”, dio Jan Valtinek *Gaua atzera geratu zen* liburuan.

Boterea, izan demokrazia itxurakoa edo edozein tirania mota, ahalbide zabala baita, mugagabea esan genezake dela, eta botere horrek badu joera bihotz gabea izateko, ezinduenari egiteko injustizia handiena, bidegabekeriarik itsusiena.

Memoria lekua ere bada hilobia, azken agurraren denbora eta gune sakratua da hileta, senide edo lagunari beila egiten zaionean. Bakoitzak bere hilei beila egitea, haiei azken agur eta gorazarrea ahalik duinen egin eta gizalegez, edo ohi den legez, hobiratzea edo errautsak haizetaratzea nahi izaten dugu.

Hori sakratutzat dugulako, erasotzaileak ere halaxe duelako, oldartzen dira poliziak eta guardia zibilak ama edo aita mindua umiliatzera eta iraintzera. Ez zaie axola –hori da agian espresuki nahi dutena– munstro bihurtzea, gizaki baino abereago izatea, gizakion une eta bizipen hauskorrenetako horretan daudenak –senidearen hileta eta hobiratzea– giza izaera horretatik erauzi eta espiritualki xahutzea lortzen badute.

“Giza kulturaren ezaugarririk antzinakoenaren parte da hilobiak eta asabak gurtzea eta haiek aintzatestea”, dio Olaf B. Rader-ek Karl Löwithi hartuta. Eta “Gizakiak bere buruarekiko kontzientzia hartzearekin batuta doa hileta erritualen hasiera… Giza Kulturaren parte da”, gehitzen du.

Ez da, beraz, harritzekoa, arau horiek hausteko bezain ankerra den aginteak hileta ordua baliatzea menperatu nahi duena mintzen saiatzeko.

# 6. ARGALA

Jose Miguel Beñaran Ordeñana, *Argala*, 1978ko abenduaren 21ean hil zuten, Lapurdiko Angelun.

Baionako udal depositura eraman zutela autopsia egiteko, itzultzen dut Iker Casanova eta Paul Asensioren *Argala* liburutik, eta itzultzen jarraitu beharko dugu, gure historia erdaraz idazteko joera kultu edo moderno edo dena delako horrek diraueno:

> Baionan elkartu zen Axun Argalaren amarekin, hau bere seme-alabekin joan zenean, eta denen artean erabaki zuten jaioterrian lurperatuko zutela hurrengo igandean.
>
> Ostiral osoa gestio eta prestaketak egiten igaro ostean, abenduaren 23ko larunbatean eraman zuten Argalaren gorpua jaioterrira… Goizeko bederatzietan abiatu zen Baionatik Argalaren gorpua, lagunak eta senideak lagunduta. Sokoan geratu zen segizioa, eta aita Larzabalek hileta labur bat egin zion. Elizkizunaren ondoren berriro abiatu zen segizioa, errefuxiatuen dozenaka auto lagun zituela.
>
> Irunera iristean, Hegoaldetik joanak ziren ehunka jenderi batu zitzaion segizioa. Aduanan ordu erdi inguru behar dute paper kontuak egiteko. Beste Aldean geratuko da Axun Arana, Argalaren neskalaguna, malkotan…
>
> Muga igarotzean *Eusko Gudariak* abesten dio jendeak; poliziarekin tirabirak hasten dira baina ez da ezer gertatzen azkenean. Berrehun inguru autok osatutako progua autopista hartzera

behartzen du poliziak, omenaldirik ez diezaioten egin bidean dauden herrietan. Segizioaren parte batek korritu ahal izan zituen Donostiako kale batzuk, poliziak zainduta.

Arrigorriagan zain zegoen jendea goiz osoan. Herria erabat geratua zegoen Argalaren heriotzaren berri jakin zuenetik; dena itxita, dena isilpean, gertaeren protestan egin ziren mobilizazioez aparte. Ordu biak laurden gutxiagotan iritsi zen, azkenean, Argalaren gorpua Arrigorriagara.

Herri ingurura heltzean, lepoan hartu zuten hilkutxa; ikurrinarekin estalita, Beñarandarren etxeraino eraman zuten, ingurura biltzen zen jendearen agurren artean.

Axun ez beste senide guztiak bildu ziren etxean gorpuari beila egiteko.

1978ko abenduaren 24an, Gabon gauean, goizean ehunka poliziek hartuta agertu zen Arrigorriaga. Bertako ez zen inori ez zioten uzten herrira sartzen. Milaka lagun geratu ziren herri sarreretan; batzuek lortu zuten nola edo hala sartzea, baina jende gehienak Basaurira jo zuen, protesta eta omenaldia egiteko.

Arrigorriagako kaleak dozenaka polizia autoz, jeep eta furgonetaz hartuta zeuden gobernadore zibilak alkateari esan zionez, 4000 polizia zeuden herria eta inguruak zaintzen, eta horietatik erdiak inguru orduan Euskal Herrian destinatuta zeuden FOPekoak ziren.

Argalaren senideak erabaki bat hartu zuten: hiletetarako hurbildu den jende guztiak ezin badu parte hartu, ez badiete denek laguntzen, inor ez da izango hiletetan, seni-

deak ezik. “Denak ala inor ez” esango dute, eta Arrigorriagako herritar guztiei eskatzen diete etxera joan daitezela, eta leihoak eta ateak itxi ditzatela protestan. Horrela egiten du jendeak, eta hiletetarako orduan hutsik dago herria, FOPekoak bakarrik kaleetan.

Bat batean Beñarandarren etxetik ateratzen dute, sei lagunen lepoan eta ikurrin batez estalita, Argalaren hilkutxa: aurrean bere anaia Pablo eta Iñaki doaz, KASen anagramadun ikurrin gorria daramatela; haien ondoren hiru abade doaz, eta atzean hilkutxa daramate lagunek: Txomin Ziluaga eta Santi Brouard KASekoak; Telesforo Monzon HBkoa eta Alfonso Sastre dramaturgoa. Hauen atzean Argalaren ama, bere alaba Maite eta Argalaren lehengusu Joxean, alde bietara zazpi lagun zituztela lore sortekin, sei Euskal Herriaren izenean, eta arrosa gorri sorta zazpigarrenak, ETAk eskainita.

Horrela doaz elizara, poliziek eta furgonetek hartutako kalean barrena. Han, hogeiren bat lagunen aurrean egiten dute hileta elizkizuna, herriaren irteeran dagoen hilerrira segizioan joateko gero. Goizeko azken orduetan, isiltasun handian sartu zuten Argalaren hilkutxa Arrigorriagako hilerriko hobian.

## 7. ETXERA BEHARRA

2008ko urtarrilaren 24an hil zen Endika Iztueta, Cabo Verden; 1986tik zegoen han, deportatuta. Lehendik luzea den zerrenda luzeagoa egitera dator Endikaren heriotza. Zenbat dira engoitik egunen batean etxera itzultzeko ametsa bete gabe joan direnak? Ez dut zerrenda egiten hasi nahi…

Errefuxiatuta edo deportatuta edo kartzelan, urruti, etxetik urruti atzeman ditu Heriok hainbat burkide, hainbat erkide. Mapamundian urruti, irudimenaren mapan agian urrutiago, itsaso handiak tartean… Eta, igerian ez badakite gure aberkide erorien arimek? Nola itzuli behar dute etxera, minez maitatu duten herrira?

Endikaren gorpua urtarrilaren 31an iritsi zen Sondikako aireportura. Han egin zioten harrera, ikurrinak haizetan, hainbat herritarrek, preso ohik eta burkidek.

Sao Tomen deportatuta jarraitzen duen Alfonso Etxegaraik jakin behar du zerbait urruntasunez eta *saudade*z; poema hau eskaini zion burkide hilari:

> Atsekabea da etxetik urrun hiltzea,
> Uhartea inguratzen duten
> Itsasoak eta zeru urdinak
> Eguzkiaren aiztopean guztia
> Basamortu bilakatzen duen
> "Saudade"-az inguraturik.

> Gogorra da, zinez gogorra, jakitea
> Gutako beste bat itzuli dela etxera
> Harrera eta agur ikurrinekin estalita.

Bizi zen bitartean bete ezin izan zuen ametsari bide egitea da, beharbada, hil-ondoan lur hartzea, etxeratzea. Senide eta lagunengan betetzen da, senide eta lagunek betetzen dute, zenduaren nahietako bat, ametsetako bat.

Euskarazko hileta eresi zahar batek ere etxera itzuli beharraz dihardu. Arrasaten hil zen Milia Lasturkoa, eta ahizpak beilatokian edesten dio eresia:

> Zer ete da andre erdiaren zauria?
> Sagar errea eta ardo gorria.
> Alabaia, kontrario da Milia:
> Azpian lur otza, gaiñean arria.
>
> Lasturrera bear dozu, Milia.
> Aita jaunak eresten dau elia.
> Ama andreak apainketan obia.
> Ara bear dozu, Milia.
>
> Jausi da zerurean arria,
> Aurkitu dau Lasturren torre barria,
> Edegi dio almeneari erdia.
> Lasturrera bear dozu, Milia!
> …

## 8. TXABI ETXEBARRIETA

Jose Manuel Pagoaga *Peixotok* 2010eko irailaren 17ko Goienkarian kontatzen du nola bizi izan zuen Arrasaten Txabi Etxebarrietaren aldeko hileta:

> 1968ko ekainaren 7an, guardia zibilek Bentandin Txabi Etxebarrieta hil zuten. Ondoko asteetan Euskal Herriko herri askotan Txabiren aldeko hileta mezak antolatu ziren; ia guztiak egurka eta tiroka debekatu zituzten.
>
> Arrasaten samin, haserre eta egonezin handia arnasten zen herriko alor eta giro askotan. Halabeharrez sortu zen "herriko indar biziak" komitea, gazteleraz bataiatua.
>
> Komiteko ordezkaritza On Jose Luis Iñarra parrokoarekin batzartu zen, meza emateko prest bazegoen, noiz eta nola erabakitzeko. Jose Luis Iñarrak ez zigun eragozpenik jarri. Igandeko hamaiketan izango zen meza, ahoz aho hedatu behar zen berria…
>
> Hamaikak eta laurdenetarako guardia zibilek inguratua zuten San Frantzisko eliza, zakarki, oso zakarki jendeari oihuka eta bultzaka handik alde egiteko aginduz.
>
> Aurrean genituen guardia zibilek ez zuten ezer ikustekorik ordura arte bide ertzean nagi ikusten genituenekin. Erotuta edo mozkortuta zeudela ematen zuen.

San Frantzisko eliza inguruetan noraezean geundela, Biona parean, guardia zibilek kulatarekin amandre bat buruan jo eta konorterik gabe zentrora eraman zutela jakin genuenean, orduantxe hasi ziren oihuak eta takarrarak…

Arratsaldeko bostetan Elma parean elkartu behar zela hedatu zen gura artean. Hantxe elkartu ginen 200 bat neska-mutilek bidea moztuta geneukala, bi erabaki hartu behar genituen: guardia zibilak etortzearekin batera lurrean jarriko ginela, jendea erakartzea helburu izanik. Hasieran isilik eta ahal bezain poliki egitea onetsi zen. Ez zuen asko iraun egonaldiak; goizean bezain azkar azaldu ziren Zibilak, *circulen fuera de aquí* oihuka. Lurrean jartzen ginela ikusi zutenean, tarra tata… behin eta berriz. Gure arteko askok lehen aldiz entzun genuen arren, garbi zegoen hura "tiro erreala" zela. Ipurdiekin bidea epeltzeari utzi eta ausartenek, bueltan, kanposantura igo eta azpian zeuden guardia zibilak harrikatu zituztenean, egundoko "bataila kanpala" sortu zen han. Jarririk ginela bota zituzten tiroak, ziur geunden haizera egin zituztela. Orain, aldiz, garbi ikusten da jendea zebilen aldera tirokatzen zutela. Balaz zauritutakoak bi edo hiru izan zirelakoan nago… Baina puntu hau ez dut sekulan jakin ziur, batez ere, giro hartan beldurra zelako agintari goren. Taldetxo bat Oxinagatik bueltan trenbidez sartu ginen herrira, kaleetan urduritasuna eta beldurra arnasten zen… Bederatziak jotzearekin batera hasi ginen plazan biraka. Hamarrak inguru zirenerako, 400 edo 500 lagun beti biraka eta alkatea azaldu zedila eskatuz. Gure pozerako, plaza inguru guztia jendez bete-betea zegoen…

Plaza alboko harmaila gainera jo nuen, neure begiekin ikusi gura nuen jendetza hura. Han zegoen herria, orduan sentitu nuen barne poza bizirik daramat oraindik; eta hara, neure baitan hitz bakoitza azpimarratuz, hauxe pentsatu nuen: hemendik aurrera ez dik inor gehiagok esaten ahalko hau gazte buru bero batzuen kontua dela…

Gero eta konbentzituago nago Txabi Etxebarrietaren gorpuarekin batera ehortzi zela euskaldun asko eta askoren etsipena.

# 9. HILERRIAK, ASABEN HERRIAK

Aztarnen bila dabil oraindik gizakia, asaben urratsen bila, umezurtz, eta sakratutzat dauzkagu haien arrastoak. Zenbat historiatan ez da madarikazio iturri hilobien profanazioa! Leku bat, lurralde bat ematen diegu hilei, gure aurrekoek –antzinateko haiek ere bai– eman zieten erara, eta haien espirituarekin topo egiten dugu edo egin nahi dugu hilerrietan, ezabamenetik gorde eta ahanzturarik berreskuratu diren aztarnategietan.

Asun Garikanoren *Far Westeko Euskal Herria* liburutik hartu nahi dut Idahoko mendietan artzain zegoela, Wagantown herri fantasman nola hilerria aurkitu zuen Joe Eigurenek 1935ean:

> Egun batean, ardiak errekara jaitsita zeudela, buelta bat ematera joan nintzen, monotonia hausteko zerbaiten bila. Hilerri batekin egin nuen topo Wagontownen. Hilerri hartan, batere espero ez nuena aurkitu nuen. DeLamarretik hiru edo lau miliara dago hilerria. Garai batean meatze-herria izandakoa, ordurako bertan behera utzia zegoen. Batere etxerik ez zegoen leku hartan. Hala ere, hilerrian aurkitu nuena benetan harrigarria egin zitzaidan. Hilerria ez zegoen batere zaindua. Belarrez, txamisoz eta belar txarrez josita zegoen, eta hilarrien artean hiru abizen euskaldun zeudela konturatu nintzen. Ezin nuen sinistu pertsona haiek Idahoko paraje urrun hartan ehortzita egotea, eta hirurak Euskal Herrian jaioak eta haziak ziren, Estatu Batuetara etorri, eta hementxe hil zirenak. Bat hogeita bost urteko gizona zen, Domingo Aldekoa izenekoa. Bestea Liburia Yturri, hemeretzi urteko neska, eta hirugarrena

> Anakabe. Ez naiz gogoratzen zenbat urte zituen Anakabek hil zenean, ezta zer izen zuen ere. Zera pentsatu nuen, Jainkoak ahazturiko toki honetan ehortziak izateko etorri zirela Euskal Herri ederretik honaino, eta honek deprimitu egin ninduen.

"Paraje urrun hartan", dio Joe Eigurenek; baina, urrun nondik?, galdetu beharko genuke. DeLamarretik hiru edo lau miliara dago hilerria; gertu, beraz, hangoentzat.

Hilarrietan aurkitu zituen izen abizenak ematen dute urruntasunaren neurria, eta, urruntasunarekin, desolazioa esango nuke. Hain urruti, ahaztuta agian, inork zaindu gabeko hilerrian…

Aurrerago, *Azkenean arbasoen etxean* azpitituluarekin, honela dio Garikanok:

> Bigarren, hirugarren edo laugarren belaunaldiko euskal amerikar asko etorri dira arbasoen lurra ezagutzera. Euskal Herria aurrenekoz ikustean, zergatik utzi zuten hain lur ederra, non eta Far Westeko eremu latzetan bizitzeko, galdetzen diote beren buruari. Hala galdetu zion Jo Arrizak Lekeition, bere ama Toribia Retolazaren baserri aurrean. Arriza Andreak berak jarri zuen erantzuna ere: Paisaiaren ederrak ez du gosea arintzen.

Euskal Herrian egin zituen egonaldietan, Robert Laxaltek ehun hilerri bisitatu zituen:

Ehun hilerrietan ibili naiz.

Ehun hilerrietan ibili naiz lur ñimiño honetan, eta ehun herrietako leinuak irakurri ditut.

Gurutzeek nire jendearen izenak daramatzate. Harriz egindako loreak bezala inguratzen dituzte elizak. Zainduz gero, zutik jarraitzen dute. Zaindu ezean, okertzen hasten dira. Eroriz gero, hilerriaren ertzera eramaten dituzte, harresiaren aurka atseden hartzera, ondorengotza amaitua duten gurutzeen alboan.

Beste hilarri batzuk ere badaude bertan behera utzita hesiaren kontra. Biribilak dira, eta *carving* (grabatu) primitiboak dauzkate, nire jendea Kristau Jainkoaren eta Eguzki, Ilargi eta urtaroen erlijio zaharraren artean bizi zen garaikoak.

Nire arbasoen milaka belaunaldi jaitsi dira lur honetara. Batzuetan, harrizko pasillo artean nabilela, lurraren usaina igotzen da. Zaharra eta familiarra da, eta berehala dakit lur hori nigan dagoela.

Hemen ehortzia izan naiz ehun hilerri txikitan.

## 10. MIKEL GOIKOETXEA *TXAPELA*

1983ko abenduaren 23an tirokatu zuten Txapela, Donibane Lohitzunen, eta egun batzuk larri igaro ondoren hil zen Bordeleko ospitalean.

Txapelari eskaini zitzaion azken agurraren harira, Kristian Etxaluzi galdetu nahi izan dizkiot orduko oroitzapenak:

> Txapela hil zelarik estreinatu ginuen ehorzketa mota berri hau. Lehenago, Larzabalek Sokoako kapela edo elizan muntatzen zituenak, politikaz josiz erritual giristinua, untsa ziren, egokiak gure gustuko. Baina Larzabal xahartzen hasi zen eta senditzen zen huts bat bazegoela, gainera gero eta gehiago baziren erraiten zutenak berek giristinokeririk ez zutela nahi hiltzean.
>
> GAL hasi zelarik, gogoratzen naiz Katturen ehorzketaz. Bere gorputza luxuzko kutxa batean zegoen, Azkoititik familiak ekarria, eta agur bat egin ginion St. Andresko plazan, auzian manifestaldi giroa sartuz, diskurtso militantea, gorak. Gero ere, kotxeekin joaiten baitzen muga artio laguntzera, manifestaldi giroa segituz.
>
> Txapela jo zutelarik ez zen berehala hil, aste bat edo Bordeleko ospitalean pasatu zuen koman. Orduan, bere lagunek astia ukan zuten deliberatzeko bere hiletari buruz. Bestalde, baginakien ere Izaskun, bere emazteak, familiarekin egin ahalak egiten zituela onhartaratzeko bere xedea: batek edo besteak, hiltzen balitz, nahi zuela errea izan eta hautsak itsasoan hedatuak izan daitezen. Hortan eta *Izarren Hautsak* kondatzen duenean bazuten beren sinismen erlixioso Jainko gabekoa. Txapelaren omenaldiaren aintzin, ukan ginuen bilera bat errefuxiatuen

komiteko arduradun bat edo biekin, bai gure Xamanarekin (hiltzea hain hurbil pasatu zaion nun bista galdu zuen).

Bakotxak ematen zuen bere iritzia. Xamanak nahi zuen omenaldia leku bildu eta austero batean pasatzea; arduradunek aipatu zuten hemen goian idatzi dutana, informazioa helarazi zuten erraiteko giristinokerirekin mozte bat suposatuko zuela; ni, aldiz, sinbologiaren garrantziari apuntatzen. Hortan, adostu ginuen eszena tokia: hilaren aurpegia koadro batean marraztua, eta aurrean mahai bat, ikurrina gainean, nun pausatuko ziren hautsak ("gorputza" dio Xamanak). Agertuko ziren ere Arrano Beltza, bai eta ere Eguzki Lorea, bainan gehiagorik ez. Nere ideia zen eszenifikazioa ez zela manifestaldi batena izan behar bainan bai omenaldi batena, abertzale guziak juntatzen ahalko lituzkeena, bai momentukoak bai eta ere gudari guzientzat eskaintzen ahal dena, ia beren erakunde berezia utzia dutelarik bizia eman dutelakoan aberriarengatik, ia beren hautu dorpetik askatuak.

Bi edo hiru egun gelditzen ziren dena prestatzeko: jenden parte hartzea, marrazkilarien ekoizpenak, lekua lortzea eta apaintzea, eta jakinaraztea zeremonia bat antolatzen ginuela, azken agur-omen bat, Donibane Lohitzuneko Jai Alaian.

Uste dut arduradun izendatu ninduela Xamanak. Bilera horren ondotik, etxera etorri zitzaizkidan beste bi lagun, animatzeko. Erran nahi dut kontziente ginela sorkuntza bat izanen zela eta garrantzia bazuela gure ixtorioan. Galdegiten banauzu nire inpresioak, erran nezake senditzen nintzela antzerki direktore bat bezala, "primera"ren bezperan, bai eta "konpañera" bezela erakundeari eskertzeko egin behar batekin.

Egin nuen lehen gauza izan zen Jai Alaira joatea eta lekua senditzea publikoaren aldean jarriz, argia nundik ixurtzen zen, ingurumenaren kolorea hartu.

Orduan, behar nuen hautatu, eszena tokia frenteko paretan jartzea edo jenden aurrean. Jakin behar da Jai Alaia ez zela baliatzen pilota partidoetatik aparte. Nabari da hurbiltasuna hautatu nuela eta biziki ederra zela negu goizetako argi hotz hura.

Gero, Xamanarekin (ondo gogoratzen baniz) izan ginen alkatearen ikustera, herriko etxearen leku batean omenaldi horren antolatzeko baimena aurkitzeko. Iturralde deitzen zen eta euskalduna izanik ere ez zuen bere burua abertzaletzat emaiten. Eskuinekoa eta abar, bainan jendea. Ez zen problemarik izan eta gogoratzen naiz, geroago kondatu nuelarik lagun batzuei nola pasatu zen, begiak malkoz betetzen zitzaizkiela, zeren eta oso argi nuen alkatea eta gu bere komunitatekoak senditzen ginela momento hartan, komunitate atakatu batekoak. Gidoia prestatu, jenderi beren ekarpenak eskatu, dena problemarik gabe.

Bainan beldurra ere sartzen ari zen ni baitan: GALekoek hortaz profitatzen bazuten berena egiteko? Fotoak egiten bazizkiguten? Orduan, galdegin nuen ordena zerbitzu diskreto bat izendatzea eta antolatu nuen periodistendako filtraje bat. Beren paperak erakutsi beharko zuten eta besoko bat “prensa” ezarri beharko. Beste guziek ezingo zuten fotorik egin. Egia erraiteko, horrek ninduen gehienik preokupatzen.

Gidoiaren ideia zen gutti gorabehera eleizakoa kopiatzea: lehen partean bi lekukotasun, prediku erdian musikarekin esan

nahi bat hiltzeari ematea, "komuniatze" bat hilaren gorputzarekin, eta azkenean musikarekin berriz "goazen aurrera" transzendental bat.

Jendea etorri zen Jai Alaia lepo artio betetuz. Sartzen zirelarik, barnean Sorozabalen *Gernika* musika grabatua emaiten zen. Kantxan eszena toki apal bat bainan zabala, erdiaren eskuinean; ezkerrean banko batzuk familia eta hurbilentzat, bai eta ere parte hartu behar zutenentzat; erdian Txapelaren koadroa, ikurrin haundi bat paretan eta aurrean arrano beltza; haren gainetik eguzki lore eder bat; mahaiaren gainean saski bat minbrez espres egina hautsen urna hor barruan ezartzeko. Eszenaren gainean, pianoa eta musika instrumentuak, mikroak. Urrunago, frenteko paretaren kontra, txalaparta eta sartu ziren periodisten tokia.

Hastean txalapartarekin Izaskun sartzen da urnarekin, Xamanaren besotik. Uzten du urna eta bere ondotik sartzen dira, haiek ere pilotariak sartzen diren atetik, lagun hurbilak eta familia, 30 bat orotara.

Bi hitz erraiteko zertara bilduak ginen (ez naiz oroitzen nork erran zituen, nik behar ba?). Anartean, *amona metralleta* deitzen ginuen batek, mahai gainean *bietan* bat jartzen du. Ez zen programan. Jendea berotzen hasten da, xutitzen eta gorak oihukatzen. Hori ere ez zen programan. Pentsatzen nuen hobe izanen zela ixil guneak uztea, "meditatzeko" bezala, bainan publikoak du manatzen. Aurreskua kantxan emanda, egun guzietako arropa eta zapatekin.

Horren ondotik, Santi bertsolariak bizpahiru bertso bota zituen eta gero bi ume, ikastolan preparatutako texto bat irakurri

zuten bien artean. Gero Eltzegor taldeak *Izarren Hautsa* kantatzen du. Gero Xamanaren predikua, harri gorri bat eskuetan. Orduan, Izaskunen urna berriz hartzen du eskuetan eta gesto izugarri eder batean altxatzen du jenderi eskeiniz bezela. Bi hitz erraiten ditu berak ere, jendea gonbidatuz bera eta familiarekin hautsen botatzera itsas bazterrean, Hendaian. Eltzegor berriz kantuz: *Hil, ez da ezer hiltzen* (Iparraldeko bi militante hilen omenetan sortua), bukatzen dena gaitarekilako aire eder batekin. Jendea xutitzen da eta azken *Eusko Gudariak*.

Ondotik Hendaiara joan ziren guztiak…

Han, Hendaian, izan ginenok ez dugu seguru asko berehalakoan ahaztuko Bidasoa itsasoarekin batzen den gunean egin zen Txapelaren errautsen ur-haizetaratzea. Hondarribitik atera zen txalupa bat errautsak zeramatzatela eta, Hendaia aldetik uraren ertzean geundenon erdibidera etorrita, ur eta haizetara hedatu zituzten hautsak.

# 11. HILEN KONDENA

*Ahozko historia: oroimenean lokartutako ahotsa –Gerra zibilaren (1936-1939) eragina Gipuzkoako herri bateko bizitza sozialean– Andoain: Askatasunaren alde eta frankismoaren aurka borrokatu zutenak oroituz.* Xabier Lasa Bergararen liburua da; luzea du goiburua, eta luzea da, orriz orri, liburua bera, hamaika xehetasunez osatua. Ez dakit egingarria ote litzatekeen, gerra hartako lekukoak desagertu samarrak direlako besteak beste, baina historiaren korapilo eta kontuak argitzeko, ez legoke gaizki egitea Xabier Lasak egin duenaren antzeko lanak. Bai baitira oraindik, eta ez gutxi, lurpe ezjakinetara eta oroitzapenik ezera kondenatuta dirauten sasoi hartako hilak.

> Erailketaren ekintza gupidagabeaz aparte, 'post mortem' zigorra ezarri zitzaien, nola fusilatu horiei, hala euren senideei. Ez baitugu ahaztu behar gure gizartearen hileta-kulturan, atzo arte ia erabat kristaua izan dena. Fusilatuak herriko hildakoen komunitatetik at utzi ziren, zibilizatutzat edo leku sakratutzat jotzen den edozein gunetik at, alegia. Eta ondoren, senideei galarazi egin zitzaien hildako euretarrei agur eta ohore egiteko edozein zeremonialik burutzea; ezin izan zuten erritualik zein ekitaldi sinbolikorik antolatu, zeinak lagunduko zieten senide hilaren galerak eragindako barru-mina kontsolatzen.

"Krimenen aztarnak garbitzeaz gain, inposaketa horien egileek bazuten beste helbururik: fusilatu edo desagertarazitakoek herritarren gogoan pizten zuten oroitzapenik txikiena deuseztatzea erabat espazio guztietatik (fisikotik, sinbolikotik… memoria kolektibotik hitz batez esanda)", dio Xabier Lasak artez eta zoli.

“Nazioarteko Hitzarmenaren arabera, gerraren kodeak dio hil den arerioari gutxieneko begirunea zor zaiola, identifikatua eta hilerrian ehortzia izan dadin”, ohartematen du beste lerro batzuetan. Baina gerrak izan ohi dira gizalegezko hitzarmen eta kode guztiak gehien aipatu eta gutxien konplitzen diren abaguneak, eta gerrarik ez denean ere baliabide zikinenak erabili ohi ditu botereak, kode sakratuekiko errespetu handirik gabe. Gogoratu besterik ez dago nola dauden oraindik bide bazterretan eta edozein zulotan 1936-1939ko gerran hilak; irabazleek hilak, zehazkiago esateko. Badirudi bizien arteko legeriatik ohiltzeko garbitu eta jaurti zituztela bidertzera edo leizera edo edozein lekutara eta bertan estali. Eta esan liteke halaxe dirautela oraindik, kondena amaitu ezinean. Ez baita ulertzen bestela zergatik dauden hainbeste oztopo eta arazo haiek lurpetik atera eta senideek nahi luketen arabera ehorzteko, gizalegezko hiletak egin ondoren.

Eliza bera gogaide eta bidaide ezin maitekorragoa izan du sarritan botereak, eta 1936-1939ko hartan, eta ondorenean batik bat, halaxe izan zuen. Honela kontatzen du Maria Jesusek eman eta Xabier Lasak jaso duen testigantzan:

> Migel eta biek kaperan egin zuten gaua. Goizeko sei eta erdietan, egunsentiko lehen argi izpiekin batera fusilatu zituzten patioan. Juanitak tiro deskargak aditu zituen hormaz bestaldetik. Anaiari bezperan leporatutako izugarrikeriekin sinetsi ezinda geratu zen emakumea, eta, hantxe, gau beilan igaro zuen goizalde guztia.
>
> Biharamonean bi hilotzak Polloeko kanposantura eramaten dituzte. Lekuko bakarra Juanita dela, hobi komunean lurperatzen dituzte.

> Bi kristauen memoria duintzeko asmoz, Andoainen elizkizuna ospatzea pentsatu zuten familiarrek. Rosendo Rekondo erretorearen erantzuna laburra bezain etsigarria izan zen: “Mezarik ezin da atera, eta isil-isilik lurperatu behar dira”.

Eta halaxe diraute oraindik haietako askok, lurpean, isil-isilik.

## 12. LUR BAT

“Hileta erritualak eta pertsonak bere buruarekiko kontzientzia hartzea, bata besteari lotuta daude; hileta erritualak eta heriotzarekiko kontzientzia hartzearen hastapena daude, batez ere, lotuta”, dio Olaf B. Raderrek *Tumba y Poder* liburuan, eta, aurrerago, beste datuok dakartza:

> Ikertzaile batzuen arabera, duela 500.000 urtetik 300.000 urtera bitarteko Homo Erectusek egiten zituzten jadanik hileta erritualak. Beste batzuek Behe Paleolitikoraino daramatzate erritual horiek, duela 40.000 urteraino.

Eta liburu beretik Karl Lowithen esaldi hau: “Hilobiak gurtzea eta asabak ohoratzea giza kulturaren ezaugarri antzinakoenaren bereizgarriak dira”. Gurtze hauek bizitzaren beraren osagarriak eta kulturaren bereizgarriak direla irizten dio Olaf B. Raderrek, eta “Asaba usteen hilobiak eraikitzea, hileta handiak atontzea, soberania nahiaren berme legez hezurrak babestea: hauek dira defuntuen alde egiten diren ekimen nagusiak, gizarteak ikertzean behin eta berriz azaltzen zaizkigun ezaugarriak”, dio.

“Hilekiko pentsamenduaren garapenak eta asabekiko gorazarreak ekarri zuen gizakiak bere tribu kide hila hobiratzea erritu batzuen arabera, eta ez lagatzea edozein lekutan jaurtikita”, esaten du aurrerago.

Baina beste bi-hiru lerro oraindik: “Talde bati dagokion memoriak soilik sortzen du nortasun kolektiboa… Hilobia, talde sozial baten erreferentzia puntu bihurtzen da, nortasun sortzaile izango den

oroitzapen baten beharra duelako, eta hilobiratze puntuari lotzen dio oroimen kolektiboak".

Lur ematea, hilei lur ematea da beraz gizalege, orain eta lehen: "Zaldi-Zoro gau hartan bertan hil zen, 1877ko irailaren 5ean, hogeita hamabost urte zituela. Egunsentian, soldaduek buruzagi zenduaren gorpua bere guraso atsekabetuei entregatu zieten eta hauek, zurezko kaxa batean ipini, zaldi batek tiraka eramango zuen narra gainean lotuta jarri eta Buztan Orbanduaren agentziara joan ziren euren zama penagarriarekin eta hantxe eraiki zuten tumulua. Belarra ihartzen den ilargiaren zehar, indiarrek negar egin zuten bere buruzagi miretsi eta maiteenetariko baten galeragatik, hileta lekuaren alboan". Dee Brownen *Ehortzi ezazue nire bihotza Wounded Kneen* liburutik hartu dugu.

Hileta erritualen hasiera gizakiak, pertsonak, bere buruarekiko kontzientzia hartzearekin, eta batik bat heriotzaren kontzientzia espezifikoaren sorrerarekin dagoenez kidetua, "Homo Sapiens"-a bere garapenaren bidean "Homo Sepeliens" ere bilakatu zela dio Olaf B. Raderrek. Baina hiletak eta hobiratzea ez ditu gizakiak edonon eta edozein modutan egin eta egiten. Ez edozein lurretan. Hila, hobiratuta ere, non dagoen ez jakitea, lur eman gabe egotearen pare da. Leku jakin bat, hilobi eta hilarri bat, lur jakin bat ez duen hila, esan liteke lurrik eman ez zaion hila dela, atseden lekurik ez duena.

Bibliara jauzi egingo dugu, Genesi edo Hasierako 23. atalean Abraham eta Sararen ehorzketaz ari da:

> Sara ehun eta hogeita zazpi urtez bizi izan zen. Kiriat-Arban hil zen, Hebronen alegia, Kanaan lurraldean. Abrahamek dolu egin zuen haren heriotzagatik.

> Gero, Sararen gorpua zetzan lekua utzirik, hititarrengana joan eta esan zien:
>
> – Atzerritarra nauzue ni zeuen artean. Sal iezadazue lursail bat nire emaztea ehorzteko.
>
> Hititarrek erantzun zioten:
>
> – Entzun, jauna: Jainkoak buruzagi egin zaitu gure artean. Ehortzi, beraz, zeure emaztea gure hilobirik bikainenean. Gutariko inork ez dizu galaraziko bere hilobian ehorztea.

Eta, muliskan jarrai, beste jauzi bat, Joxe Azurmendiren *Azken egunak Gandiagarekin* liburura oraingoan: “Dakigunez, hobiratzeko zeremoniak (gorpua leku hautatuetara prozesioan eramatea, etab.) eta ehorzketako errritualak Neanderthaleko gizakiak praktikatzen zituen, agian jada Homo Erectus-ek ere. Gain bizitza edo hil-ondoko biziraupenaren ustea pregizakiarena da jada ausaz, kulturaren hasi-hasierakoa: h.d., pregizakia, jada erlijiosoa gizakitu da antza. Mito zaharretan hildakoen herria, batzuetan izan litezke Dohatsuen Irla batzuk edo landa erlijiosoak heroientzat”.

Leku jakin bat, leku hautatu bat nahi dugu bada hilentzat, hantxe atseden har dezaten; edo –sinisteen arabera– erritualen bitartez geuk, biziok, har dezagun atseden, hilak gurtzeko leku jakin hori izanik. Ez al ditugu ia sakratutzat gure mendietako jentil baratzak eta tumuluak?

“Hiletak bizientzat egiten dira, ez hilentzat. Pertsonok euren samina adierazteearen plazera ukan dezaten egiten dira, baina hilak ez du horren beharrik, ez dagoelako hilda, bere bizia beste baldintza batzue-

tan jarraitzen baizik", zioen Fun Chang jakintsu txinatarrak, *Behar duzun guztia zeruan dago* lanean.
Hilak errausten eta haizetaratzen direnean ez da geratzen hilobirik, gure gurtze eta oroigarritzat tumulurik. Baina errautsak ez dira edozein tokitan botatzen: itsasoan edo itsasertzean, mendiko leku jakin batean, jaurtitzen dira, eta ingurune hori –izena duen ingurua– berori bilakatzen da erreferentzia eta oroimen gune.

## 13. HILEN LEKUA LURREAN

Ez dira, noski, berdinak munduko bazter guztietan egiten diren hiletak; ezta gutxiagorik ere. Kultura eta ohiturak, erlijio bat edo bestea… faktore ugari dago, bizitzako beste alorretan ez ezik hiletei dagokienean ere, gauzak han eta hemen ezberdin, oso ezberdin edo modu kontrajarrian egitera daramatzatenak gizarteak.

Denborak ere ez ditu gutxi aldatu mendeen buruan batzutan, eta urte gutxian bestetan, hiletak egiteko moduak eta hilei eskaintzen zaien gorazarrea, memoria eta lekua. Baina badira aldatzen ez diren gauzak ere, kultura ezberdinen eta denboraren gainetik dirautenak alegia, eta zenduak, gure aurrekoak, oroitzapenaren bitartez hilezkor edo betiereko bihurtu nahia da horietako bat.

"Antzinako bizilagunek senide hilak ehorzteko era eta sistema sorta zabala baliatu zuten. Sarrien erabilitakoak honako hauek izan ziren: hipogeoa (lur azpian induskatutako gelak), trikuharriak (mahai itxurako monumentu megalitikoak), harrespila (forma biribil edo eliptikoa osatuz antolatutako harri sorta), zista (harri zapalezko kutxa baten baitan hildakoaren errautsak sartu eta harriz estali) eta tumuluak (gorpua edo zista estaltzen duen harri edo lur piloa), besteak beste", irakur daiteke *Berria* egunkariarekin banatzen den *Nora* aldizkariaren 14. zenbakian. Eta honela dio aurrerago:

> Trikuharria: Kristo aurreko laugarren milurtekoan agertu ziren trikuharriak, beren baitan talde-hilobiak hartu zituzten monumentu megalitiko handiak alegia. Berez, zutunik paratutako harri multzoa da, haren gainean harlauza bat –edo gehiago– datzala. Horrela, harrizko mahai baten tankera hartu ohi dute.

> Euskaraz izen generikoa trikuharria da, baina herriz herri beste asko ere entzungo ditugu, sorgin-etxe edo jentil-arri, berbarako. Harrizko eraikin horien lekukotzarik zaharrenak Portugal, Bretainia eta Europako Iparraldean agertu dira. Trikuharriaren gorengo aroa, hilobi-kultura baten ardatz izan zenekoa alegia, Kristo aurreko 2.500 eta 1.800 urteen artean gauzatu zen. Brontze aroan, ostera, gibelera hasi zen. Gure herriaren kasuan, neolitoaren eta Brontze Aroaren artean nagusitu zen. Izan, talde-hilobi hauek "eternitaterako etxebizitzak" dira.
>
> Europako bazter batzuetan hilotzak kobazuloetan utzi izan zituzten milaka urtetan. Ez dakigu zergatik batzuek haitzuloetan eta besteek trikuharrietan, baina pentsa genezake oinarrian sinismen eta "beste munduaren" kontzepzio ezberdinak daudela…
>
> Hildakoen gorpuekin gertatzen den bezala (burua mendebaldean eta oinak ekialdean jarri ohi zituzten) trikuharriak ere eguzkiari begira daude. Izan ere mendialdekoen sarbidea ekialdeari begira zegoen; korridoredunak, ostera, hegoalderantz zabaltzen dira. Erdi Aroko Kristau Kulturak eguzkiari lotutako sineskera horiek jaso eta bere egin zituen. Hala ehorzketetan, nola hildakoak kanposantura eramatean eta elizen orientazioa zehazterakoan ere, "orientazio sakratua" kontu handiz bete ohi zuten.

Kardaberaz bildumako 10. alean Anastasio Arrinda Albisuren *Euskalerria eta eriotza* atala hartzen duenak honakoa irakur dezake:

> Euskalerriko mendietan "cromlech" antzeko arri-esiak daude ta "baratza" izenekin ezagutzen oi dira: Jentil-baratza, Mairu-baratza… esi orren erdian lurrezko ontziak daude, erre-autsez… baratza izena, beraz, eortzi lekua dezu…

Eta aurrerago: “leen illobiak etxean zeudela esana daukagu eta etxetik illobiak atera zituztenean bien arteko loturarik ez zan eten: etxea eta sepulturaren lotura da gorputz bidea…”. Elizetatik hilerrietara aldatu zirenean gauza bera, jakina.

> Etxeko sua eta etxeko sepultura, orra biak batera eskeini kanpotik etorri dan andre berriari, etxearen jabe egiteko. Sutegia eta sepultura, biak elkarrekin, eta sutegia da etxearen biotza.

Gai hau oparo aztertu dute autore ez gutxik eta ez gara hemen luzatuko, hori ez delako, zehazki bederen, lan honen helburu nagusia. Baina, zilegi bekigu zertzeladaren bat edo beste ematea munduko lekuren batzuetan hilobitzat hautatu ohi dituzten lekuez.

Anastasio Arrindak berak dio Pigmeoen ohitura dela umeak txabola barruan sutokiaren azpian ehorztea. Gizonezkoak eta emakumeak, berriz, etxetik at, basoko toki ezkutu batean.

Herri melanesiarren artean ohikoa ei da ahaide hurbilen hezurrak aldean eramatea, Diego Blasco Crucesen *La historia de la muerte* liburuan irakurtzen denez. Bank uharteetako tribu australiarrek, zenbait denboraz heurekin eraman ostean zuhaitz adarretan lagatzen omen dituzte hilen hezurrak.

“Karolinako Choctawstarrek etxe amankomunak zeuzkaten eskeletoentzat, eta baita Louisiana eta Virginiako indioek ere”, dio Blasco Crucesek, eta beste lerro batzuetan honakoa esaten du:

> Egiptiarren hilobiez ari garenean piramide handiak irudikatu ohi ditugu. Faraoiek eta handiki batzuek soilik ahal zuten, ordea, halako hobiratzerik egin…

> Erregeen Harana antzinako Egiptoko nekropoli handi bat da, Luxordik (Tebastik) hurbil dagoena Niloren sartaldeko ezpondan. Inperio Berriko (XVIII., XIX. eta XX. dinastiak) 300 inguru faraoiren hilobiak daude han, eta zenbait erregina, printze, noble eta baita animaliak ere…
>
> Grezian gorabehera sakratua zen hiletena, ez baitzegoen hila lurperatu gabe uztea baino kondena okerragorik…
>
> Erromatarren artean, bakoitzak ahal zuen guztia egin behar zuen lur sailtxo bat eta oroigarri xafla bat lortzeko; hil-ondoan ahanzturan galtzea arimaren lurruntzea baitzen…

Badira, hala ere, lurperatzeko hilobi handiosak eraikitzen aritu gabe gorpuak hegazti sarraskijaleentzat uzten dituzten kulturak. San Inazio Antiokiakoak ere bere gorpua zakur eta otsoentzat jaurtitzeko eskatu omen zuen.

Ezagunagoa egiten zaigu gorpuak erretzeko ohitura, berez antzinakoa dena eta gaur egun gure artean indartu dena.

Edonola ere, gizartean garrantzia handia dute hilobiek, gizatalde batentzat erreferentzia puntu diren heinean. Ez al dira hilobien ordezko irudi munduan hamaika lekutan eraikitzen diren errege, erregina, gerlari… gizon eta emakumeen omenezko monumentuak?

## 14. HILETAK ANTZINAKO GERRAN

Edozein hiletak ohi du, baita landerrenak ere, bere solemnitatea, bere handitasuna, bere izena, nolabait esateko, izengabetan galduta eta lausotuta hobiratzen direnenak salbu, beharbada.

Txiroak eta galtzaileak, lurreko kondenatuak alegia, izan ohi dira gerretan eta, batik bat, izengabetan ez ezik ezerezean lausotuta geratzen diren hilak eta hiletak. Irabazleek eta boteretsuek, aldiz, arranditsuki egin ohi dituzte euren erorien aldeko hiletak; agintari eta handikien hileten oihartzuna munduko azken bazterreko sukalderaino hedatzen dute, gainera, telebistaren bitartez.

Hemen zehaztu beharrik gabe gogora etorriko zaigu Estatu agintariek eta *Gudari Ezezagunari,* esate baterako egin ohi dizkioten lore eskaintzak eta gurtzak, edo holako edo halako gudan eroriei egiten zaizkien oroitzapen ekitaldiak.

Gerran hilen aldeko hileten narrazio zaharrenetakoak Homerok egiten dituenak izango dira agian. Literaturaren eskutik, antzinako historia bizi-bizi dakarkigute haren lerroek denboraren higadura gainditzuz. Troiako harresiaren aurrean, Akilesen kuttun Patroklo hil du Priamoren seme Hektorrek. Akilesek, orduan, suminetan, Hektorri eraso dio eta larri zauritu du. Azken agonian, Troiako seme maiteenak honela erregutzen dio Akilesi:

> Zure arimagatik, zure gurasoengatik eta zure belaunaldiagatik, otoi!
> Ez dezatela nire gorpua zakurrek sarraskitu ontzi akeoen artean.
> Har ezazu gure aitak eta gure ama ohoragarriak ere bahi ordaintzat
> Oparo emango dizuten urrea eta brontzea eta
> Eman iezaiezu nire gorpua gureei, etxera eraman dezaten,
> Hileta-suari eskain diezaioten troiar gizon eta emakumeek.

Arerioa hilda ere ez da baretu Akilesen sumina eta mendeku nahia, eta orpazurdak zulatuta idi narruzko hedeak haietatik pasatuz, bere zalgurdiari lotzen dio Hektorren gorpua. Horrela, zaldiei eraginez, tatarrazka darabil, laidoztatuz, arerio garaituaren gorpua, troiarren dolua eta aienea areagotuz…

Bere lagun min hilaren aldeko hiletak egiten ditu gero Akilesek, eta honela diotso:

> Alai zaitez, oi Pratoklo, Hadesenean bazara ere,
> Orain beteko baitut hitz eman nizuna:
> Tatarrazka ekarri dut, zakurrei emateko, Hektorren gorpua,
> Eta zure hileta-suaren aurrean lepatuko ditut
> Hamabi seme troiar etxe onetakoak
> Zure heriotzak eragin didan saminagatik.

Lurrean ahozpez laga du Akilesek Hektorren gorpua, eta hileta oturuntza egiten dute: idi zuriak, ardiak eta ahuntzak eta urde koipetsuak erre zituzten Hefestoren sutan…

Eta hileta-suan erreko dute gero Patrokloren gorpua, burkideek bere ohoretan moztu dituzten ilajeekin estalita eraman ondoren. Akilesek ere moztu egin du bere adats horaila eta lagun min eroriaren eskuetan ipini du.

Ardi gizenak eta idiak hil zituzten gero suaren inguruan; bi dupin ipini zituen Akilesek gorpuaren ondoan, eztiz betea bata eta olioz bestea; eta zaldiak eta zakurrak hil zituzten hileta-suari emateko, eta hamabi seme troiar lepatu zituen…

Troiarrak doluan eta oinazetan daude bien bitartean. Seme alaben aurka laido-hitzak esanarazten dizkio saminak Priamori.

Halako batean, seme Hektorren gorpua etxera eraman ahal izateko urrez eta brontzez zalgurdia zamatuta, Akilesengana doa.

Akilesen egoitzara sartuta, haren belaunei besarkatzen zaie Priamo, honela erregutuz:

> Oroi zaitez, oi Akiles, zure aita jainkotiarraz, hark ere bai baitu
> Nik dudan adin hau, eta zahartzaroaren atarian dago.
> Bere auzoek estutzen dute, agian, eta ez daukake zorigaitz eta hondamenditik Salbatuko duenik.
> Baina oraindik bizi zarela entzuten duenean, gutxienez…

Horrela hasten zaio, eta bere aberri Troiaren defentsan borrokan ari zela hil dion seme Hektorren gorpua etxera eramatera joan dela beregana esaten dio Akilesi, eta bahitura aberatsa ekarri diola horretarako.

"Dohakabea! Zenbat atsekabe jasan dituzu bihotzean!", erantzuten hasiz egiten dio harrera, eser dadila eskatuz…

Priamok, baina, ez du eseri nahi; ez, behintzat, Hektorren gorpua ematen ez dion bitartean.

> Ez nazazu areago haserretu! Erabakia neukan, oi agure,
> Hektor zuri ematea…

Diotso Akilesek, eta aurrerago honela dio:

> Erantzuidazu zintzoki galdetzen dizudanari:
> Zenbat egun behar dituzu Hektor jainkotiarrari gorazarre egiteko bitartean geldirik egon nadin neu, eta nirekin gudarostea?

Eta Priamok:

> Hektor jainkotiarraren aldeko hiletak egin ditzadan nahi baduzu
> Egizu esango dizudana, oi Akiles, eta pozik izango naiz.
> Badakizu herrian setiaturik gaudela; egurra menditik,
> Urrutitik ekarri behar da, eta troiarrak beldur dira.
> Bederatzi egunez negar egingo diogu jauregian;
> Gero, hamargarrenean, bere hileta egingo dugu, eta herriak
> Hileta oturuntza egingo du, eta hamaikagarrenean tumulua eraikiko diogu.
> Hamabigarrenean, beharrezkoa bada, borrokari ekingo diogu berriro.

Eta Akilesek, azkenik:

> Agure Priamo, gogoko duzun legez egingo da guztia;
> Eskatu didazun denboran geraraziko dut gerra.

Horrela, bere seme kuttunaren gorpua Troiara darama Priamok, eta hiletak nola egin zituzten esaten da liburuan: nola erre zuten hiletasuan Hektorren gorpua, nola eraiki zioten tumulua…

Eta, pentsatzen jarrita, nor ez da haserretu, garai basati haietan, denek elkar gorrotatzen eta hiltzen ahalegintzea baino ofizio hoberik ez zuten garai haietan, batak bestearen saminarekiko gutxieneko itzala bazutela ikusita; nola ez harritu, gerraren gordinean etsaiari seme eroriaren hiletak egin ditzan menia ematen diola ikusita…

Eta nola uxatu akordutik epaile eta politikari espainiar zibilizatu eta guztiz demokratek gure burkide hilen aldeko hiletetan eragin duten bortxakeria, oinazetan diren lagun eta senideak umiliatzeko eta areago mintzeko baliatuz abagunea…

# 15. HILARI ESKAINTZAK

Hilari egiten zaizkion eskaintzen artean bat izendatu behar banu, argia esango nuke. Hil ondorengo mundua eta bideak ilunpekoak irudikatzen ditugu nonbait, bizirik garen lekuotakoak ere beti-beti oso argiak ez direlako agian.

Alboetan kandelak, argizaria edo olio-lanpara ipini eta isiotuta argi egiten zaio gorpuari beilak irauten duen denboran. Elizan ere kandelak edo argizaria isiotu ohi zaio, edo zitzaion, sepulturan. Gai honi buruz arakatzen hasten denak leku ugaritan irakur dezake Euskal Herrian ohitura izan dela etxean norbait hiltzen denean, etxeko nagusia batik bat, erlauntza ondora joan eta erleari jakinaraztea, argia behar dela eta argizaria egiteko eskatuz.

Etxean gorpuari beila egiten zaion gelan eta elizan ez ezik, segizioan ere, hilaren etxetik elizara bidean eta elizatik hilerrira alegia, argia eramaten ei zen, eta argizainak, toki batzuetan ezkoanderia esaten zitzaionak, bere leku propioa omen zuen. Ohartemangarria da emakumea ohi dela beti edo gehienetan, gurean behintzat, hilotzaren gorpua prestatzen duena eta hilari argi eskaintza egiten diona. Gorpu eramaile edo andari, berriz, nekez izango da.

2009ko martxoko *Nora* aldizkariaren 14. zenbakira gatoz berriro, honela irakur zitekeen bertan: “ohitura zahar eta zabaldua izan da hildakoek berekin beste mundura opariak eta ondasunak eramatea. Gauzak, jakiak, animaliak ere sarri agertzen dira”.

Antzinatik ehorzketa lekuetan su txikiak isiotu ohi zituzten. On Joxe Miel Barandiaran su eta argi eskaintza zirelakoan zegoen: “Erritu horren gaur egungo bertsioa hilobietan kandelak pizteko ohitura da. Hori sinismen jakin bati zor zaio, hildakoen arimek eskaintza horren premia daukatela, haiek gabe beste munduko bizitzan inguratuko lituzkeen ilunpeak uxatzeko”.

“Sepultura gainetan argia eta ogia eskaintzea ohitura oso zabaldua da Euskal Herrietan eta dirau oraindik. Ogia ez ezik beste janari asko ere eskaintzen zituzten oraindik orain; ardiak eta idiak elizetara eraman ere”, dio Anastasio Arrindak *Euskalerria eta eriotza* lanean. Baina, antzinate urrunean ere ohitura bazela dio: “Leizeetan bezala trikuharrietan ere animalien izter-hezurrak aurkitzen dira; hezur horiek, han jarri zirenean, mamiarekin zeuden; hildakoek, nonbait, euren ibilaldietarako, jana eta edana behar”.

Willian A. Douglassek *Muerte en Murelaga* lanean esaten du janaria eta argia behar dituela defuntuak beste mundura bidean, eta ogia eta kandelak, edo argizaria, eskaintzen zaizkiola hilobian.

Ez da, noski, soilik Euskal Herriko kontua hilei eskaintzak egitea. Zenbait autorek gure ohituratzat aipatzen dituzten eskaintza berdinak edo berdintsuak ikusiko ditugu beste kultura batzuetan. Gurean idiak –adarretan ogi bana zutela, inoiz– edo ahariak eramaten baziren hiletetara, Homerok ere idi, ahari eta enparauen eskaintzak aipatzen ditu Patrokloren hiletetan.

Diego Blasco Crucesek bere *La historia de la muerte* liburuan dio Sumer, Egipto, Txina eta Japongo erret hilobiek badutela zerbait amankomuna: errege, noble eta apaizak ondo lagunduta dautzala,

alegia, emakume, musikari, jopu eta gudarien konpainian. Aurreraxeago, honela dio:

> 1927an, sir Leonard Wolley hasi zenean Ur-ko erret hilerria aztertzen, mundu osoa harritu zuena aurkitu zuen. Inork ez zuen espero han lurperatuta aurkitzea arpadun musikariek, gudariek, dantzariek eta gorteko emazteek osatutako hileta segizio harrigarri bat. Erregea zegoen segizioaren buru, eta bera zen lurrez estaltzean hilik zegoen bakarra.

Batzutan ezin izaten da jakin beste mundura bidean konpainia egingo dien zerbait edo norbait eramatea, ala beraiek joan ondoren mundu honetan inor ez lagatzea den handiki horien nahia.

Kontu apalagoetara etorrita, Dee Brown-i honela irakur diezaiokegu *Ehortzi ezazue nire bihotza Wounded Kneen* liburuan:

> Satank zaharra, urte hartan texastarrek hil zioten semeari negarrez ari zitzaion. Aita atsekabetuak, bizkarrean ekarri zituen bere semearen hezurrak eta tipi berezi bat eraiki ondoren, plataforma altu baten gainean zeuzkan ipinita; hilda ez, baizik lotan eduki balu bezala mintzatzen zen beti agure nahigabetua bere semeari buruz ari zenean, eta haren dendaren alboan egunero janaria eta ura ipintzeaz arduratzen zen…

Apalak izan arren Satank zaharraren eskaintzak, Egiptoko, Mesopotamiako edo beste edozein lekutako handiki handiarena bezain handi eta sakon zen, gutxienez, buruzagi Kiowaren atsekabea eta samina.

Hilen omenetan egin ohi diren oturuntzetan ere badago alderik, dudarik gabe, munduko leku batetik bestera. Oturuntza handiak, Euskal Herrian ere hainbat etxe zorretan ezartzerainokoak, desagertuz joan dira, zenbait kulturatan oraindik jarraitzen duen arren ohiturak.

Argia dela esan dut, hilari egiten zaizkion eskaintzen artean bat aukeratzekotan, aipatuko nukeena. Hala ere, loreak dira seguru asko argiaren lekua hartuko dutenak, hartua ez badute jadanik. Edo, behar bada, argia adierazteko beste modu gisa edo osagarri moduan ere har daitezke loreak, ilunean lagun izateko argitasuna eta bizi zantzua.

# 16. HILETA ERESIAK

Hilengatik negar egitea, hurko hilaren hutsunea eta harengatiko atsekabea sentitzea, leinu kide hilaren gorpua hobiratu zuten aurreneko "homo" haiez geroztikakoa izango da gutxienez. Negarra eta erosta, hiletak eta eresiak, denak bateratsu edota bata bestearen jarraian etorri ziren beharbada. Gure 'erosta'-k 'lamento' esan nahi duela eta ez dela abesten, ez duela kantatzen denik esan nahi dio, dena dela, Azkuek bere kantutegian.

Abestuz ari dena edo kantu doinurik gabe jaulkitzen duena, unibertsala da seguru asko erostariaren irudia. Munduko edozein bazterretan, edozein kulturatan, modu batean edo bestean guztiek egin izan dituzte eta egiten dituzte atsekabe adierazpenak, negar eta keinu soiletatik hasi eta jantziak eta aurpegia urratzeraino, ile, bizar eta tximak erauztetik igaroz.

Baina erostak eta erostariak ez dira beti begi onez ikusiak izan, ezta gutxiagorik ere. Baionako udal ordenantzak, esate baterako, 1298an debekatu egin zuen hiletetan garrasi, negar eta samin adierazpenak egitea, Juan Madariagak *Historia social de la muerte en Euskal Herria* lanean dioenez. Gauza bera egin zuen Oñatiko udalak 1479an, aurpegiak ez urratzeko eta hilotzaren gainean aurpegiak ez igurzteko, hilarengatik negarrik ez egiteko aginduz.

Gordexolan erostariak debekatu zituzten 1548an…

*Bizkaiko jaurerritar zaldun aitonen semeen Foru Lege Berezi Frankeza ta Herri-eskubideak* gisa honetan zehazten ditu hiletetako hainbat zertzelada:

> VI. Legea. Ildakoagatik zelan negar egin eta zelako illeta-soiñekoa jantzi bear dan:
>
> > Baita, esan eben: Jainko gure jaunarentzat goragarri ta Jaun Andiarentzat onuragarri ez diran negar aundiak eta beste itsuskeri zantarrak egiten dirala Bizkaia'n (norbait ilten denean); au, barriz, onango negarrak eta itsuskeriak egiten dituenentzat barruan gorabeera aundiko kaltegarri eta galgarri ta zantarkeri aundia zala, baita erri guztiarentzat bere. Eta orrelako okerrak alboratu ta kentzeko, legetzat ezarriz, aginten ebala, onantxe agindurik, aurrerantzean, Bizkaia'n edo Bizkai'tik at iñor il ezkero, Itsasoan naiz Leorrean, Lurralde Lauan naiz Urietan eta Uriaundian, iñor ez daitela negarrik egiten ausartu, naiz uleak erauzi naiz aurpegia urratu naiz buru-utsik agertu naiz kantaka negar egin naiz marragazko jantzia jantzirik; zigor onenpean, besterik egiten dauanari, egin dagian bakotxeko, mila marairen…

"Iñor ez daitela", "besterik egiten dauanari", "egiten dagian bakotxeko…". Horixe da, tamalez, bidenabar esanda, gizarte legeen eta gizartearen historia. Debekua eta zigorra arau izan dituen eta oraindik dituen gizartea, ezin iritsi beste inora, iritsi den lekura baizik.

Erostak bai, baina hileta eresi ederrik ere ondu izan da gurean. Egoki delakoan berriro dakart orri hauetara Milia Lasturkoarena. Honela diote haren bertso batzuek:

Zerurean jausi da abea,
jo dau Lasturko torre gorea,
eroan ditu ango jauna ta andrea,
bata leen, orain bestea,
bidaldu dogu zeruetara kartea:
arren diguela geure andrea.

Mondragoeri artu deusat gorroto,
Gipuz andraok artu ditu gaxtoto;
Iturriotz kalean andra Maria Baldako,
Arte kalean andra Otxanda Gabiolako,
Errebalean andra Milia Lasturko.

Eta Santxa Otxoa Ozaetakoaren eresiatik ere bildu nahi izan dut aipua, Aramaioko oñaztarrek hil zioten Martin Ibañez Artazubiagakoa senarraren hiletetan:

Oñetako lur hau jabilt ikara
lau aragiok berau bezala…

Berriagoa da Lizardiren *Biotzean min dut* hileta eresia, amonaren ehortz egunean egina:

Biotzean min dut, min etsia,
Negar ixila darion miña.
Amonatxo bat nun: gaur, enarak
Etorri-garaiez, aldegiña.

Eguzkirik ez dute
leiotan zapiak;
aur-yolasik ez dago
gaur zure kalean.
Odeiek lits urratu;
itsasoak orro.
Gizadi bat geldirik;
gero, bat-batean:

Ots!
Ots!
bizion oñok…

errezka bi gizonek
argizari oriak;
gorputza lau bilobok;
atzetik andreak.
Ai, ene lor arin au
zein dudan larria!
Besoek ez lan arren,
biotzak nekeak…
…

Erostarien negar eta intziri ozenak isiltasun bilakatu dira jadanik; "negar ixila darion miña" du gorpua daraman bilobak; "gizadi bat geldirik"… ezer ez da entzuten, bizien –segizioan doazenen– oin hotsak izan ezik.

Bizien oin hotsak dira, hiletetara doan jendearen oin hotsak, 1975eko irailaren 29an Txikiren amak Zarautzen entzuten dituenak ere. Ekarriko dugu berriro hizpidera.

# 17. ANTIGONA

Hilei ez zaie beti bakea ematen, nahiz eta esaerak hori egiteko agindu. Gerretan ez ezik, nola-halako liskarretan eta "gerra zikinak" deitzen ditugun horietan ere, behin eta berriz ikusi dugu estatuak, gobernuak, agintariek zer errespetu eta itzal dioten arerio eroriari eta haren senideei.

Etsai eroriarengatik direnak eta ez direnak esanez hanpatzen dira komunikabideak, idatzizkoak eta ahotsezkoak. Agintariek euren zerbitzari izateko desioz lerdetan daudenen bitartez gehienetan, iraina eta ironia mikatza ereinez mendekua irauli izan dute askotan etsai eroriarengan, gorpua laidoztatuz maiz, edo kultura bakoitzean ohikoak diren hiletak eta gurtza ukatuz.

Eta hala ere, agintarien aginduei eta larderiari aurre egin izan diete hamaikatan erorien senideek, ausardia garesti ordaindu arren.

Sofoklesen tragedietan ikusten dugu Menelao eta Agamenon buruzagiek debekatu egin zutela bere buruaz beste egin zuen Ayaxen gorpua lurperatzea:

> – Aizu; bai, zeuri diotsut: gorpu hori ez dezala inork uki: horrelaxe laga behar da, dagoen moduan –agindu dio Menelaok Ayaxen anaiorde Teukrori.

Baina Ulises dator, eta honela diotso Agamenoni:

> – Entzun ezazu, bada: ez zaitez ausartu, jainkoengatik, lurrik eman gabe jaurtitzera gizon hori, hain gupidagabeki; ez

> dadila amorrua garaitu zugan justizia zapaltzeraino gorrotatzeko moduan. Neuk ere ez nuen gudarostean Ayax baino etsaiagorik Akilesen armak neureganatu nituenetik… Beraz, justiziaz, ez duzu laidoztatu behar, eta, hala egingo bazenu, ez berari baina lege jainkotiarrei egingo zenieke irain. Ez da bidezkoa adoretsua zaurtzea hil ondoan, gorroto bazenu ere.

Aurrerago, zentzabidean honela galdegiten dio Agamenonek:

> – Hilari lur ematea aholkatzen didazu, beraz?"

Eta Ulisesek:

> – Bai, eta neu joango naiz horretara".

Tira, esaldiotan alde politak aurki daitezke edizio batetik bestera, eta gure itzulpenak ez ditu agian asko taxutu gauzak, baina egingo nuke irakurleak igarri diola nondik nora hedatu nahi ditugun.

Esango nuke, dena den, Ayaxenean baino erruz argiago –gordinago ere bai– ageri dela auzi hau Antigonaren tragedian.

Antigona eta Ismena ahizpen neba biak, Eteokles eta Polinices hil dira; Tebasen defentsan lehena, erasoan bigarrena.

– Zer gertatzen da? Esan behar didazunak goibeltzen zaituela dirudi –dio Ismenak, eta honela erantzuten dio ahizpak:

> – Eta nola ez bada!? Gure anaietako bati hobiratze ohorea ematea eta besteari ukatzea erabaki du Kreontek. Eteokles hobiratzeko agindu ei du, hilek ohorez har dezaten lurpean. Baina Polinices zorigaiztokoari dagokionean, agindu bat atera duela diote, haren gorpuari lur ematea eta harengatik negar egite ere debekatuz. Dolurik gabe, lurrik eman gabe laga behar dela…

Aurrerago berean tematua ageri da Kreonte:

> – Eteokles, hiriaren defentsan inork berdindu ez duen adorearekin borrokatuz hil baita, hilobi batean lurperatu dezatela agintzen dut, eta ohorez hiltzen diren guztiei egiten zaizkien eskaintzak egin eta opatu diezazkiotela. Bere anaiari, ordea, erbestealditik itzuli eta aberria eta familiaren jainkoak goitik behera sutan pasa, eta etxeko batzuen odola dastatu eta beste batzuk jopu egin nahi zituen Polinicesi, berriz, hilobiekin nahiz malkoekin hiri honetan gurtzarik ez egiteko agindua eman dut. Laga dezatela ehortzi gabe, zakur eta hegaztien sarraskitzat eta begiraleen ikusgarri zatartzat…

Antigonak anaia hilari lur eman nahi dio hala ere, eta ahizpari eskatzen dio laguntza. Baina Ismena ez da ausartzen horretara; men egiten dio Kreonteren aginduari: “gauzak horrela badaude, nik hara bultza edo hona tira, zer irabaz nezake?”.

Bakarrik doa Antigona, debekuak debeku, anaiaren gorpuari lur ematera; baina zelatariek ikusi dute eta atxilo daramate Kreonteren aitzinera:

> – Emakume gaztea ikusi dugu gorpu biluziaren aurrean negarrez eta erostaka; aieneka, bidegabekeria hori egin dutenengatik gaizki esaka ekin dio. Lur hautsa bildu berehala bere eskuekin, eta zizelkatu dotoredun brontzezko ontzi batetik hiru isuri-aldi egin ditu defuntuaren gainera. Hori ikustean, berehala joan gatzaizkio gainera; denon artean atzitu dugu, eta ez du azaldu beldurtuaren itxurarik…

Bere debekuaren berri ez al zekien, aginduari jaramonik ez egiten ausartu al den, galdegin dio Kreontek, eta Antigonak honela erantzun:

> – Ez da Zeus izan debeku hori eman duena, eta lurpeko jainkoen laguna den Dike-k ere ez du egundo horrelako agindurik aldarrikatu gizakien artean. Eta ez dut pentsatu zure arauek, hilkor zarenez, jainkoen lege idatz bako eta betierekoen aldean lehentasuna izan dezaketenik. Lege horiek ez dira gaurkoak edo bart arratsekoak, betikoak baino; noiztik datozen inork jakiteko baino antzinagokoak. Ez nuen, bada, arazorik, gizonen aginduen beldur ez naizenez, zure debekua zapuztu izanagatik jainkoen zigorraren beldur izateko. Zure mandatua baino lehen nekien, nola ez jakin, hil behar nuela. Baina garaia baino lehen hil behar banaiz, neuretzat irabazia. Nire antzera zorigaitz eta larrialdien artean denarentzat hiltzea ez al da, bada, irabazian irtetea? Beraz, zuk erabakita zain daukadan azkenak ez dit sortzen estuasunik. Neure amaren seme baten gorpua lurrik eman gabe egon eta horretan laga izan banu, ordea, hori bai izango zitzaidala atsekabe zaurgarri. Gainerakoak ez dit minik ematen. Eta halarik ere, iruditzen bazaizu zoro baten jokabidean aritu naizela, egizu kontu agian ero bat dela erotzat hartzen nauena.

Jopuei errieta egiten die Kreontek, hainbeste hitz egiten uzten diotelako Antigonari, eta zorrotz agintzen die:

> – Eramazue, bada, eta, gangadun hobi batean hersten duzuenean esan dizuedan legez, utz ezazue bakarrik, babesgabe; hil behar bada, hil dadila, eta, hala ez bada, hilobi bizitza egin dezala esan dizuedan heriotz-etxean…

Harpeko zulo modu horretan, hilobi bizitza ez baina bere buruaz beste egingo du Antigonak.

## 18. EZ GARA ALFERRIK PASAKO

Lurdes Iriondo eta Xabier Leteren abesti baten goiburua da hori; abestiak honela dio:

> Beste esku batzuek jasoko dute gure lana,
> ez gera alferrik pasako.
> Badu bizitzak etorkizun bat,
> ez da ametsik hautsiko.
>
> Izango gera egunaren hasieran gazte
> eguerdiko berotan neke, ilunabar-sarreran atseden kabi.
> Baina gero, beste egunsenti batean
> gure herriko jendeak argi berrira esnatzean
> altxako dira eskuak
> ahots latz gogorrek esanen dute egia
> eta ez da nehoiz itzaliko itxaropenaren argi gorria,
> gizonaren bideak seinalatzen dituena.
>
> Beste bihotz batzuek jasoko dute gure esperantza,
> ez gera alferrik pasako.
> Gure oinek markaturiko bideetatik
> bihar eta etzi eta beti
> anai berriek jarraituko dute justiziara daraman bidea.
>
> Ez gera, ez gera, ez gera alferrik pasako!

Hil eta gero non "biziko" garen, "gure" etxea, herria, mundua zer izango den, gure asmoak eta ametsak gauzatuko ote diren… Hauek eta hauen antzeko kezka ugarik astintzen digu, dardarazten digu,

larritzen digu arima bizi garen bitartean, geure heriotza –gertaera helegite gabea, amaia– gogoeta gai datorkigunean batik bat.

Gure bizitza ez genuke behar bada bide beretik eramango heriotzaren jakitun eta kontziente ez bagina, hil eta gero ere "bizitzen" jarraitzeko nahirik ez bagenu. Gureen hilobiak zaintzen ditugu eta haietara joaten gara, erromes antzo, beraietan dautzan asabak bizi direlako gure oroimenean. Eta geu ere, ustez bederen, "biziko" gara hil ondoan, gureek oroitzen gaituzteno.

Baina hilobiak, oroitarriak, hilerriak, aurrekoen egonleku sakratuak, arerioen itu eta desagerrarazi beharreko bilgune ere izan dira maiz historian zehar. Hilen egoitzak bizion etxeetan –haitzuloak, sukaldea, hilerria…– edo inguruan daude –egon dira–, eta bizion etxeak erauztea adinako laidoa, sakrilegioa, zaie beste batzuei ere haien egoitza suntsitzea:

"Non daude gaur egun peguotak? –galdetzen du Tecumseh, shawneesetakoak *Ehortzi ezazue ene bihotza Wounded Kneen* liburuan–. Non narragansetak, mohikanoak, pokanoketak eta egunen batean gure herriko tribu indartsu izan ziren beste batzuk? Gizon zuriaren dirugose eta zamapean desagertu ote dira udako eguzkipean elurra bezala? Guri dagokigunez, hondatu arte bakean utzi behar ote diogu borroka egin gabe? Gure etxeei, Izpiritu Handiaren dohaina den gure lurraldeari, gure hildakoen hilobiei eta guretzat maitagarria eta sakratua den guztiari uko egin behar ote diogu? Badakit nirekin deiadar egingo duzuela: 'Ez. Inoiz ere ez!' ".

Beharbada esan genezake aurrekoen borondatea bizi dela gugan.

Hamaikatxok esana du honez gero, herri aldarri handietan sarriago, etxeko mahai inguru apalagoan inoiz, "harro leudeke gutaz", gurasoez edo lehenagoko arbasoez oroituz. "Pozik legoke ikusi bagintu" pentsatu ez ezik sinistu nahi genuke gure aurrekoren batez akordatuta.

Baina, alderantziz ere, zenbat aldiz ez ote dugu esan: "berriro hilko litzateke, hori ikusiko balu"?

Ez ziren alferrik pasa, zinez, eta ez gara pasako; gure oinatzak hor geratuko dira bidean, eta ondoren datozenek ezagutuko dituzte. Ez gara alferrik pasako, eta nahi ere horixe nahi genuke: beste esku batzuek gure lana eta beste bihotz batzuek gure itxaropena jasotzea.

# 19. HILOBI BETEAK ETA HUTSAK

Hilerrian bertan edo hilerritik kanpo, momentuak eta oroitarriak eraiki ohi zaizkie batzuetan hilei, agintaritzan, jakintzan edo beste aferaren batetan erreferente izan direlako, gizartearen begietara merezimendua irabazi dutelako.

2011ko maiatzaren 22ko *Berria* egunkariko *Igandea* gehigarrian irakurtzen ahal da Thomas Sankara 1983ko abuztuaren 4an heldu zela boterera, ordura arte Volta Garaia zeritzan herrialde afrikarrean. Burkina Faso (gizon duinen herria) izena eman zion herriari boterera iritsi eta urte betera.

1987ko urriaren 15ean estatu kolpea eman eta hil egin zuten Sankara. "Sankararen emazteak senarraren hiletaz edo hobiratzeaz arduratzeko eskaera egin zuen orduan, baina agintariek galarazi egin zioten, haren hileta gobernu berriaren aurkako manifestazio bihurtuko zelako beldurrez. Eta txosten medikoa bidali zioten emazteari. Honela irakur zitekeen: *Sankara Thomas Isidre Nöel, 1949ko abenduaren 21ean Yakon jaioa, 1987ko urriaren 15ean hil da, arrazoi naturalengatik*.

Hilaren aldeko hiletak eta omenaldiak debekatzea, ohitura unibertsal bezain naturala da, dirudienez. Sankararen heriotza bezain naturala, gutxienez. Ohartematekoa da, edozein dela ere erregimena, totalitarioek eta horien gerizpean eroso bazkatzen diren komunikabideek darabilten hizkera. Hurbilekoa ikusteko ispilu egokia izan daitekeenez urrutikoa, hartu itzazu Kolonbiako berripaperak, esate baterako, eta asasinatze, erailketa, esango dute gerrillak norbait hiltzen duenean;

baina, gerrillaria bada hila, baja emana –dado de baja– idazten dute dotore asko, “baja emaileak” zerutiar maitagarriak balira bezala.

Sankararengana itzuliz, “Ni, Sankara, pasaeran nago; geratu behar duena herria da”, esan ei zuen, manifestazio batean jendea bere aldeko leloak oihukatzen ari zela ikusita. Baina bera geratu zen herriaren memorian, eta Uagaduguko hilerria herritarren bilgune izaten da urtero.

Baina gertatu daiteke hilobirik ez egotea ere, agintariek begi zoliz aurreikusi dituztelako leku horietan gobernuaren edo agintarien aurkako manifestaldiak, aldarri deserosoak.

Afrikatik irten gabe, Kongon, “1961eko urtarrilaren 16an, armadaren abioi bat iritsi zen Thysvillera, Hardyko aerodromo militarrera. Patrice Lumumba, Kongon demokratikoki hautatutako lehen gobernu burua, hartu zuen han abioiak. Gaur egungo Lumumbashiko aireportuan ikusi zuten azken aldiz bizirik. Hantxe eduki eta torturatu zuten, leku ezezagunen batean bere kideekin batera erail zuen arte pikete belgikar batek. Ondoren, sokekin lotu eta azido kloridrikotan sartu zuten gorpua, krimenaren aztarrenak ezabatu eta bere izena sekulako desagerrarazteko…”.

Olaf B. Rader-en *Tumba y poder* liburutik hartu dugu aurrekoa eta bertatik jarraituko dugu oraindik. Mehdi ben Barka Parisen desagertu zen 1965ean:

> Ben Barkak Marokoren independentziaren alde borrokatu zuen batez ere. 1956an, helburu hori lortu zenean, konbentzimendu ezkertiarrak zituen Ben Barkak talka egin zuen Moha-

> med V.a eta bere oinordeko Hasan II.aren erregetzarekin, eta behin baino gehiagotan ospa egin zuen erbestera. Bere aberrian bitan heriotzara kondenatua eta Hasan II.aren zerbitzu sekretuek antzinatik zelatatua, polizia frantsesak hitzordu politikoa ipini zion bere heriotza egunean, eta gero bahitu egin zuten. Marokoar erregeren mandatariak egin ziren atzituaren kargu eta Rabatera eraman zuten abioi militar batean… Tratu txarrak eman zizkioten, eta zapi batekin ito azkenean. Gorpua… azidotan desegin zuten.

Eta honela dio hamaikagarren kapitulu honen azken lerroetan:

> Norbaiti hilobia ukatzeko bi arrazoi daude, bada: batetik, oroitzapen leku bat ezartzea ezinezko bihurtzen du. Hilobia, behintzat, jadanik ezin da izan oroimen leku finko bat. Eta beste zerbait ere lortzen da: kulpa betierekotzea… hilobirik ez duenak atsedenik ez du…

## 20. GORPU KONDENATUAK

“Badakigu jaun ahaltsuak direla hilak”, zioen Sigmund Freudek *Totema eta tabua* liburuan.

896tik 897rako neguan, sinodoa ospatu zen Erromako basilika batean. Olaf B. Rader-en *Tumba y poder*-etik hartuaz itzuliko dugu:

> Engoitik usteltzen ari den gorpu bat, pontifize jantzitan, gotzain tronuan zegoen eserita. Haren aurrean, kontzilio asanblada goren batek inguratuta, Esteban VI. aita santua (896-897) ari zen salaketa errezitatzen. Horretarako izendatutako diakono bat arduratu zen defentsaz. Bederatzi hilabete lehenago hildako Formoso aita santua (891-896) zen salatua, aurretik Portoko gotzain kardinal izana bera. Gotzainek, ordea, debekatua zeukaten eliz barruti bat besteagatik aldatzea. Aldaketa debeku hori hautsi izanean oinarritzen zen salaketa. Honela aldarri egin zuen, dirudienez, Esteban VI.ak: “Zergatik saiatu zinen, Portoko apezpiku zinela, urguiluak bultzatuta, kristandade osoko subirano gisa San Pedroren katedraz jabetzen?”. Jarraian, hilari jantzi sainduak eranzteko, eskuko hiru atzamar mozteko, eta gorpua Tiber ibaira jaurtitzeko agindu zuen; eta hark ordenaturiko apaiz guztiak beren duintasunaz gabetu, eta berriro ordenatu egin zituen.

Aurrerago, honela jarraituko du Rader-ek:

> Liutprandok (Cremonako apezpikua) ematen ez dizkigun xehetasun zenbait bildu daitezke beste iturri batzuetatik, gertatuaren ikuspegia aberastuz: horrela, aita santu jantziak eta iku-

> rrak degradatuz bezala erauzita, hil osteko kargugabetzearen ondoren eta bedeinkatzeko erabiltzen zuen eskua moztu eta gero, oinetatik tatarrazka atera zuten gorpua kontzilio-elizatik.

Hirira erromes joanda hiltzen zirenak lurperatzen zituzten lekuan hobiratu zuten halako batean Formoso aita santu ohia. Baina, hara zer diren eta zer izan diren zeruetatik eta Jainkoarengandik hain hurbilak ohi diren sotanadun handiki hauen gorabeherak. Esteban VI.ari ez zitzaion aski “damnatio corporis” iruditu bere aitzindari Formoso halako lekuan hobiratzea, eta lurpetik atera eta Tiber ibaira botatzea agindu zuen.

Ez da hor amaitzen Formosorena, baina utzi dezagun hortxe, ur beti berritan, engoitik betierekoa denez ez da itoko eta.

Kontua da epaiketak, aita santu jantzitan auzipetu gisa ipintze soiletik hasita, jantziak eta ikurrak erauzteak, oinetatik tatarrazka elizatik ateratzeak eta ondorengo guztiak erakusten duela, garaiko botere gose eta tirabiren norainokoaz gain, zein mailataraino iritsi daitekeen boteredunaren mendeku nahia, larderia eta zabarkeria. Historian zehar gaur arte milaka kasutan errepikatu den mendeku nahi, larderia eta zabarkeria, bestalde.

> Hilobien funtzio nortasun sortzailea, beraien ebaspenean nabarmentzen da era harrigarrian. Naturaz gaindiko ordena baten nahi gisa, txikizioa eta ezerezera kanporatzearen amorrua jasan duten gorpuak ez ezik, hilobiak ere, memoriaren ustezko leku bezala, suntsiketen helburu izan dira behin eta berriz. Oroitzapenak “damnatio memoriae”-raino ezabatu beharra… hilobiak suntsitzerainokoa da.

Egin dezagun jauzitxoa Iparramerikara Mary Ruiz de Zarateren *Del Bravo a la Patagonia* liburuarekin, eta ikusiko dugu aita santua adinako handikia izan beharrik ere ez dagoela hurkoari beste munduko atsedena ukatu nahi izateko. Bufalo Bill deituriko Willian Cody koronela urte askoan bizi izan ei zen mendi larretan bufalo ehiztari gisa. Indioen ohiturak eta haien bizimodua ikasi omen zituen han, eta baita zeukatena txoritzeko beraietaz hobekien nola baliatu ere. Azal gorridunen erlijio animista ezagututa, bazekien haien sinestea zela hil ondoren tximetatik tiraka eramaten zituela Espiritu Handiak bere egoitzara… Bufallo Billek, beraz, narru eta guzti erauzten zien buruko txima menperatzen zituen azal gorriei, haien artean izua eragiteko.

Ume ginenean indio basatien aurka borrokatzen zuen heroi zuri haren kapeluan zer zegoen ikusi nahi nuen, eta erakutsi ere bai, kapitulu hau amaitu aurretik. Ikusi beharrik izan gabe ere badakigu orain. Beti Rader-en edo beste hainbat autoreren lanetara, Mundu Berrian eginiko gehiegikerietara edo antzinako adibideetara joan beharrik gabe, gaur ere, eta etxean bertan, aisa aurki ditzakegu hilen gorpuak bahitu eta polizien aginduetara hobiratzen diren kasuak, senide eta lagunen azken agurra debekatuz. Edo epaileen aginduz kentzen diren oroitarriak; hilobietan oroitzapen elkarretaratzeak egiteko debekuak; omenaldi saioetan urtez urte errepikatzen diren polizien indarkeria eta larderia erakustaldiak; omendu eta gogoratu nahi den hila, oroimenean daramaten senide eta lagunak zafratzea eta umiliatzea helburu dutenen ozarkeria.

Hileta ekitaldiek ordena politiko eta soziala legitimatzen dute ezbairik gabe. Bestearena ukatzen eta zanpatzen dutenek eurena hanpatzen dute, eta ezinbestean datozkigu begietara estatu-hileta solemneen irudiak, eulien distrakziorik ere onartzen ez duen zurruntasunez egiten direnak, agintari zibil eta militarrak lepo, denak hunkituta…

## 21. MANU ETA TXILIBITA

1984ko irailaren 17ko gauean, guardia zibilek kamioia tirokatu eta barruan zihoazen Manu Urionabarrena eta Juanito Oiarbide *Txilibita* hil zituzten Irungo mugan.

> Zapatua zen –dio Manuren alaba Izaskunek–. Autobidean, Irungo ordainlekuan, gaueko 10etan Guardia Zibilak gure aita eta beste bi kide harrapatu zituen. Gu hurrengo egunean enteratu ginen, irratiak esanda; Komando Araba jausi zela esaten zuen irratiak behin eta berriro. Bagenekien aita bertan zegoela. Berri argirik ez genuen izan; bi hildako zeudela esaten zuten irratian, baina ez nortzuk ziren. Guri inork ez zigun abisatu; irratian entzuten genuena besterik ez genekien.
>
> Hildako bat Txilibita zela esan zuten goiz erdi aldera, baina besteari buruz ezer ez. Gorpua identifikatzeko arazoak zituztela esan zuten, eta gezurra zen; gure aita ondo zegoen, aurpegia ondo zeukan eta bere argazkia ez dakit zenbat bider ipinia zuten telebistan. Herri batzutan buzoietan sartu zituzten gainera; guri Elorrixoko lagun batek esan zigun… Ordu bata inguruan aitaren izena esan zuten irratian; orduan amaitu ziren gure itxaropenak.
>
> Gero, Busturiako alkatea, HBkoa, etxera etorri zen. Hernanira lagunduko zigula; Hernanikoa zen beste hila eta… Gogoratzen dut jendea deika hasi zela, urduritasuna… Ama eta ni -16 urte neuzkan- joan ginen Hernanira. Ni bertan geratu nintzen, ez dakit nortzuen artean. Ama Polloera joan zen, aita desitxuratuta egongo zela eta nik hola ez ikusteko.

> Aitaren gorpua ondo zegoen. Txilibita, berriz, ez; antza, defenditzeko edo granada bat botatzen saiatu eta berari egin zion eztanda.
>
> Ni etxera bueltatu nintzen.
>
> Astelehenean, funerala egiteko eguna, greba konbokatu zen Busturialdean. Gernika dena zarratuta zegoen.
>
> Gorpua hartzeko, ni Matienara joan nintzen, eta Busturiaraino karabanan. Herrietatik pasatzerakoan jendearen harrera gogoratzen dut, eta Sorozabalen martxa. Eta isiltasuna.
>
> Gorpua etxe aurrean daukagun lorategian ipini zuten; zerraldoa kristalagaz… Zenbat jende pasatu zen! Batzuek begiratu, beste batzuek musua eman, negarrez… Hiru ordu inguruan jendea eta jendea agurra emateko.
>
> Elizara ibiliz joan ginen, jendez inguratuta. Mezatik irteeran txalapartaren soinua gogoratzen dut; orain gehiago entzuten da baina sasoi hartan inpresio gehiago egiten zuen, egin zidan.
>
> Altamirako plazan egin zioten omenaldia. Hizlari batzuk izan ziren baina ez dut ondo gogoratzen. Handik Lumora, aitaren familiaren panteoira, gauez heldu ginen, eta bitartean Gernikan manifa bat egin zen…

Hernaniko udaletxean ere, Txilibitaren jaioterrian, alegia, Pleno Batzorde Berezia ospatu zen hurrengo egunean, eta honakoak adierazten eta eskatzen zituen, besteak beste, Herri Batasunak aurkeztu mozioak:

> 1. Gure Herriko bi gudarien heriotza eragin duen ekintza, FOPek Irunen burutua, gogorki salatzeko.
>
> 2. Tristura eta samintasun une honetan bi hildakoen senideenganako solidaritatea agertzea.
>
> 3. Juanito Oiarbide *Txilibita* Hernaniko seme kutuna izendatzeko.

Jose Antonio Rekondok hartu zuen hitza Eusko Alkartasuna alderdiaren izenean:

> Aski ezaguna den gure jarreraren arabera gure botoa ezezkoa izango da aurkezturiko mozioaren aurrean. Hona arrazoiak:
>
> Zeren eta, pertsona baten heriotzak suposatzen duenaz aparte, ETAren borroka armatua, Euskal Herriak hainbat aldiz errefusatu duena, kutuntzat hartu nahi baita.
>
> …argi dago gure herrian zeintzuk diren biolentziaren sustatzaile eta ezabapenaren eragile. Ezabapena, hain zuzen, Euskal Herriaren borondate demokratikoarena…

Euskadiko Ezkerrako ordezkariak ere ezezkoa eman zion mozioari; baita PSOEkoak ere, honela argudiatuz:

> Mozioaren kontrako botoa azaldu nahi dugu, berriro ere azpimarratzea biolentziaren ondorioak direla hauek. (…) Guk mozio honen kontra emango dugu botoa zeren eta uste baitugu hau ez dela biolentzia amaitu eta Euskadira bakea ekartzeko bidea…

EAJ-PNV alderdiko eledunak honakoa zioen besteak beste:

> …Uste dugu gertaerak argitzeko Epaileak daudela eta berek zehaztuko dutela hauen legaltasuna edo ilegaltasuna…

Mugarik gabea da batzuen zinismoa, jarrera zeken eta bilautik ihaurria; baina ez da harrigarria, EAJk dagien legez, epaileen esku uztea aipuan darabilgun hilketa, edo torturak, edo zeinahi gertakari mingarri.

"Biolentziaren ondorioak" dira halako heriotzak, PSOEko zinegotziak zioenez, eta "bakea etorriko da biolentzia guzti hau amaitzen denean eta borroka herriak nahi duen metodo demokratikoak erabiliz soilik egiten delarik", gehitu zuen.

Ekintza zehatzaren aurrean bortxakeria edo dena delakoaren arrazoien, aurrekarien edo ondorioen zertzeladak, marraztu nahi dituztela dirudien arren, hilen borroka eta sakrifizioari erdeinua eta haien lagun eta senideekiko zekenkeria eta larderia dago argudio horien atzean. Ez da doako jarrera; ezta jarrera politiko formal soila ere. Samin guztiaren errua erailei beraiei leporatzea eta erailak madarikatzea du helburu diskurtso horrek.

## 22. TXIKI ETA OTAEGI

1975eko irailaren 27an erail zituzten Jon Paredes *Txiki* eta Angel Otaegi; Cerdanyola, Katalunian, Txiki, eta Burgosko kartzelako patioan Otaegi.

Honela kontatzen du Txikiren anaia Mikelek *Txiki. Haizea eta sustraiak* liburuan:

> Pelotoia prestatuta zegoen lekura iritsi nintzen. Haiengandik lau-bost metrora zegoen gure anaia; aurpegira begiratzen zien, zuzen…
>
> Guardien sorbalden artetik ikusten nuen anaia, gerritik gora. Irribarre egin zuen ikusi ninduenean… Guardiei banan-banan begiratu zien eta "Aberria ala hil", "Gora Euskadi askatuta", "Gora Euskadi sozialista" egin zuen oihu, eta *Eusko Gudariak* abesten hasi zen. Bigarren ahapaldiari ekitean erori zen, tirokatuta. Jausi ondoren ere artean abesten jarraitzen zuela esango nuke.

Goizeko zortziak eta erdietan fusilatu zuen Txiki guardia zibil boluntarioz osatutako pelotoiak. Handik, Cerdanyolako hilerrira eraman zuten gorpua, agintari eta guardiek berehala lurperatu nahi zuten arren.

"Eskelak ipini gura genituen egunkari batzuetan, baina inork ez zuen nahi", dio Mikelek, eta honela segituko du:

> Hurrengo egunean polizia eta guardia zibilez inguratuta zegoen hilerria; Brigada Politiko Sozialekoak ziren nire ustez, bibote eta txima ugari baitzegoen… Hala ere, ez dakit nola sartu ahal izan ziren zazpiehun inguru pertsona…

Bi egunez manifestaldi eta errepide mozketak egin ondoren, Txikiren aldeko hiletak egin ziren Zarautzen. Herrira sarrera eta irteerak itxita zeuzkaten poliziak eta guardia zibilek. Eliza eta inguruak jendez beteta zeuden hala ere.

“Hileta eguna izugarria izan zen”, dio Txikiren amak. “Etxeko txikiekin, bakoitza koroa banarekin, abiatu ginen etxetik, trenbide pasotik. Apur bat honantzago etorri zitzaizkigun berrogei edo berrogeita hamar polizia, eta gerarazi gintuzten…”.

Koroak uzteko agindu zieten poliziek, ezin zituztela eraman elizara…

“Izugarria zen hura –jarraitzen du Txikiren amak–; jendea negarrez, koroa haiek, isiltasun hura… badakizue zer entzuten zen soilik? Zapata takoien hotsa. Oraindik entzuten ari naiz. Ez zen eztulik ere, eulirik ere entzuten…”.

Lizardi ezagutu ez arren, haren hileta eresia entzun duela esan liteke gorago aipatu dugun bezala. Haren “Ots! Ots!, bizion oñok” hura ere bada Txikiren amak entzuten duen “zapata takoien hotsa”. Hiletaren doluak bere ingurura hedatzen duen isiltasuna, alegia. Alabaina, Lizardirenean ez bezala, doluaz gain sumina dago, saminaren eta barne zauriaren arroa lazgarria dago Txikiren amak erakusten digun hiletako isiltasunean; poliziak lore koroak kenarazteraino ezarri nahi

dien umiliaketaren aurrean zutik eta tinko dirauen amaren eta segizio osoaren isiltasuna da…

“Hamabost hilabetera ekarri zuten Txikiren gorpua Zarautza”, dio haren anaia Diegok. “Gorpua behin betiko hilobira aldatzean egin zioten omenaldia hunkigarria izan zen; Txikiren kide izanikoek eraman zuten gorpua. Geroztik hainbat omenaldi egin izan zaizkio Zarautzen eta beste lekuetan. Tirabirak eta iskanbilak izan dira batzuetan, eta beste batzuetan bakean egin izan dira ekitaldiak… lehengo urtera arte”.

2009ko Gudari Egunean Ertzaintzak eragotzi zien Txikiren senide eta lagunei Zarauzko hilerrian oroitzapen-omenaldi ekitaldia egitea. Harritzekoa ere ez da Francok hildakoak zuhurki zaintzea hain jaraunsle zintzoek.

Angel Otaegi, ostera, Burgosko kartzelan bertan fusilatu zuten, baratzako hormaren ondoan, borreroak beste lekukorik gabe.

Zortziak eta erdietan utzi zieten kartzelara sartzen Angelen izebari eta Nuarbeko lagunei. “Gorpua Nuarbera eraman nahi genuela esan genien”, dio izebak. “Horretarako kutxa behar genuela esan ziguten eta funeraria bila atera ginen. Denbora galtzen eduki gintuzten han, luzamendutan, eta hamabietan artean ez zeukaten kutxarik… Kartzelan gorpua ikusi nahi nuela esan nien. Ea zertarako nahi nuen ikusi? Ez zidaten utzi gorpua ikusten”.

“Irteera atzeratu nahian ari ziren”, diote lagunek, “eta gu Azpeitira eta Nuarbera deitu eta deitu, jende guztia zain zegoelako. Geroago

joateko esaten ziguten funerariakoek… Beti falta zen paperen bat edo beste zerbait…”.

“Kartzelan Angelen arropak eta gainerakoak eman zizkidaten”, jarraitzen du izebak. “Hiru paper sinatu eta hura guztia hartuta atera nintzen lagunak zeuden lekura. Telefonoz abisurik ez emateko esan zidaten arropak hartzean, propagandarik ez zedila izan gorpua iristean. Isilik joan gintezela kanposantura. Arratsaldeko lauretan joan ginen azken aldiz funerariara eta esan ziguten eramanak zituztela kartzelara hilkutxa eta paperak”.

> Karabanan atera ginen furgoiaren atzetik, baina beste kotxe batzuk erdian sartuz nahastu gintuzten Burgostik irteeran, semaforoa moztuz beraiek aurrera egin zuten. Atzetik bizkor ahalegindu ginen, baina galdu egin genituen. Nuarbera iritsi ginenean, han ez zegoen ezer, eta jende guztia zain. Logroñotik Iruñerantz jo zuten haiek, beranduago iristeko…
>
> Gu zazpiak laurden gutxian iritsi ginen, eta haiek hamarrak arte ez. Mendiz eta errepidez, jendez beteta zegoen auzoa.

“Gaueko ia hamarrak ziren”, dio Angelen ama Mariak. “Gau beltza, ez dakit aldapa nola igotzen genuen ere, kandela eta linternekin. Azpeitiko Guardia Zibilaren sarjentuak ekarri zidan abisua, ama bakarrik igo zedila. Baina lagunak gogor jarri ziren, jendea mendiz iritsi zen hilerrira, ilunpean ama bakarrik igo zedila garrasi egin zuenean sarjentuak, hemengo neska batek aurre egin zion: “Ez. Amak laguntza gehien oraintxe behar du, eta hemen, herrian, ohitura daukagu norbait hiltzen denean azken momentura arte laguntzekoa, eta hemendik ez da inor jaitsiko”.

> Sarjentuak esan zuen asko sentitzen zuela, berak maitea zuela Angel, goiko aginduak zirela. Eta orduan honela erantzun zion neskak: “Ba orduan erantzi itzazu trajea eta uniformea eta goiko horiek ez dizute agindurik emango eta horrela ikusiko dugu estimatzen duzun edo ez duzun estimatzen Angel”.
>
> Azkenean metraileta artean igo ginen… Jendez bete zen hilerria… kaxa irekitzen ere ez zuten utzi, eta kristala puskatuz ikusi ahal izan zuen nire koinataren senarrak.

“Goiko aginduak” ohi du aitzakia edo arrazonamendu poliziak, militarrak, kartzeleroak… zernahi txakurkeria egiteko, munduko edozein lekutan eta garaitan. Goiko aginduei “beharrezko esanekotasuna” alegatu izan dute tirano kume guztiek euren larderia zuritu behar izan dutenean.

## 23. 1936-1939KO GERRAKO ERAILAK

Gaur egun, oraindik, gerra horretatik 75 urte igaro direnean, ez dira gutxi euren senide hilak aurkitu ezinik dabiltzanak. Lurpearen isiltasunera kondenatu zituzten erailek hortxe diraute, bide bazterretan, leizeetan, auskalo non, ez hiletarik, ez azken agurrik.

"Ekainaren 25eko Espainiako Ondare Historikoari buruzko 16/1985 legeak, agirien sistema arautzen zuenak, ez zuen gehiegi lagundu, dokumentazioa kontsultatu ahal izateko 50 urteko epea ezartzen baitzuen, eta epe horri 25 urte gehiago gehitu behar zitzaizkion dokumentuetan aipatutako pertsona oraindik bizirik bazegoen. Espetxeetako eta Guardia Zibilaren artxiboak xedapen horietaz baliatu izan dira sistematikoki, dokumentu horietara heltzea galarazteko, baita gaur egun ere. Horrela, ahaztu egiten dira errepresioarekin lotutako dokumentuek, bere balio historikoaz edo judizialaz gain, memoriarekin eta identitatearekin lotutako balioa ere badutela, biktimen lekukotasunari laguntzen eta indarra ematen diona", dio *1936ko udazkena Gipuzkoan. Hernaniko fusilaketak*, Mikel Aizpuru, Urko Apaolaza, Jesus Mari Gomez eta Jon Odriozolaren liburuak, eta iturri horretatik jarraituko dugu.

Bizkaian Derioko hilerrian egin bazituzten heriotza zigorrera kondenatutakoen hainbat fusilatze, Gipuzkoan halako patriofiliorik gabe egin zuten hamaika *ateratze* eta *paseo* Galarreta inguruan, Hernaniko hilerrian edo Oihartzun aldean.

> Epaiketarik gabeko exekuzioen zeharkako ondorioa –baina ziur aski berariaz bilatutakoa– zenbat exekuzio gertatu ziren

zehaztuta lekarkeen dokumentazioa aurkitzeko zailtasuna da. Gainera, hildakoak zenbatzeko eta identifikatzeko beste eragozpen bat ere badago: gehienetan, senideek debekatuta zuten lutoa eramatea, hildakoen aldeko hileta elizkizunak egitea… edota eskelak prentsan argitaratzea. Manuel Garbizuren eskela baino ez dugu aurkitu, urriaren 18an *La voz de Españan* argitaratua, baina debekatu egin zuten hileta, atxilotu eta hil zuten agintari karlo-militar-faxista berberek. Euskal Herriko gizarte tradizionalean, heriotzaren inguruko ohiturak eta erritoek garrantzi handia izan dute, eta zigor hirukoitza ziren aipaturiko debekuak: lehenengo eta behin, hildakoa bera zigortzen zen, ezin baitzuen betiko atsedena hartu arbasoekin batera; bigarrenik, zalantzan, ziurtasunik gabe eta beldurrez itxaroten egon ondoren, hildakoaren senideek ezin zituzten ospatu beren nahigabea kanporatzeko aukera emango zieten erritoak, edo etorkizunean ere, biktimaren eta familiaren arteko loturari eutsiko zioten ospakizunak; hirugarrenik, elkartea eta komunitatea zigortzen zen, izan ere, auzokoaren aldeko ospakizunetan parterik ez hartzeak erraztu egingo zuen ahanztura, eta hildakoa eta haren pentsaeraren eta bizimoduaren oroitzapena galaraziko zituen.

Gerrak suntsitzen ditu, bistan da, gizatasun arau guziak; baina arau suntsitzeei menperatuekiko larderia gehitu zioten:

“Bertan behera uzten zituzten Hernanin fusilatutakoen gorpuak, eta handik ordu batzuetara edo hurrengo goizean pasatzen zen zaborbiltzailea udal hilerrira eramateko”. Urteak igaro arren, garai hartan neskatilatxoa zen Josebe Goya enterradorearen alabak honela gogoratzen ditu une latz haiek:

> Zabor gurdi baten, abereak bezala… inork begira ez zezan, ezkilatxoaren hotsarekin aldarrikatzen zuen gurdiaren helduera. Jendeak etxean geratu beharra zeukan…
>
> Senide batzuk saiatu ziren etxekoen gorpuak eskuratzen, baina ezin izan zuten beren nahia bete.

Senide hilak non zeuden ez jakitea gaur arte luzatzen den arazoa da, fusilatuak zenbat ziren zehatz jakin ezina bezalaxe:

> Heriotzak behar bezala ez inskribatzeak arrazoi ezberdinak zituen: batetik, biktimarekiko mespretxuak bultzatzen zituen hiltzaileak horrela jokatzera, eta, bestetik, egindako krimenen berri idatzirik, frogarik, ez uzteko. Bestalde, hildakoen sendietan ere arazoak sortzen ziren betebehar administratibo horretarako, eta luzatu egiten zen prozesua. Askotan ez zekiten legez heriotza inskribatu beharra zegoenik ere; beste batzuetan, mendekuaren beldur ziren; prozedurak berak zailtasun handiak zituen edo ez zegoen zuzeneko seniderik, edo ihes eginda zeuden.

1936ko uztailean errepublikarren aurka altxatu zirenek jakin bazekiten hiletak eta erorien aldeko gorazarreak egiten:

> Garaile berriek egindako lehen lanetako bat, errepublikarren menpe egon ziren garaian hildakoen oroimena bultzatzea izan zen.
>
> Eta "Por Dios y por España" eroritakoek urtero omenaldia jasotzen zuten, baita 1972ko azaroaren 20aren moduko data berantiarrean.

Gerra eta gerraoste horretako zenbait arauk bere horretan dirau gaur ere; orduko hartaz idatzi diren orrialde askok ez lukete lekuz kanpo emango gaurkoaz arituta. Amai dezagun:

> Euskal errepublikarren eta altxatutakoen jokaera gehien ezberdindu zuen ezaugarrietako bat alderdi bakoitzak fusilatuekiko izandako jarrera izan zen…
>
> Erregimen frankistak bere biktimak bakarrik gogoratzen eta onartzen zituen, eta haiei eginiko omenaldi bakoitza alderdi errepublikarrean eroritakoentzat irain berri bat zen, zenbat eta gehiago goraipatu hildako frankistak, orduan eta gehiago hondoratzen baitziren ahanzturan besteak…
>
> (…) bizirauteko eta bazterketa sozialaren egoeratik ihes egin beharrak eta pobrezia ekonomikoak Gerra Zibilean hildako errepublikar askoren senitartekoek, era sumarioan exekutaturikoenek bereziki, atsekabea isilpean jasatera bultzatu zituzten eta sufrimendua barneratu egin zuten.
>
> (…) Erritu garrantzitsuenetariko bat Santu Guztien Egunean kanposantuak bisitatzea zen. Baina, Hernanin lurperatutakoen kasuan, pertsona maitea benetan leku horretan lurperatuta ote zegoen edo lurperatzeko leku batek eskatzen zituen duintasun-baldintzak betetzen ote zituen ez jakiteak ziurgabetasuna eta kezka sorrarazten zituen, ahaideen sufrimendua areagotuz. Are gogorragoa zen beren ahaideen gorpuak non ote ziren ez zekitenentzat.

# 24. EGOITZ GURRUTXAGA

Hodei Galarragarekin batera hil zen Egoitz Gurrutxaga. Besteak beste haien hileta omenaldietako irudiak, egunkarietan eta ikusi genituenak, geratu zitzaizkigun gogoan. Testigantza hurbilenaren bila, Egoitzen etxekoengana iritsi nahi izan dut:

> 2002ko irailaren 23a zen. Goizeko zazpiak ordularian. Goizero bezala irratia piztuta eta "partea" hastear. Lehen notiziaz geroztik ez zen urduritasun, ez eta kezkarik faltatu geure etxean: bi hildako Basurton. Goizeko zazpietako lehen parte haren ostean zenbat entzun zituen amak ez du oroitzen. "Guztiak" dio. Ez dugu gogoratzen zehatz zein ordutan, baina nahiko azkar eman zuten lehen identitatea. Baina ahaztezina dena da egun hartan bertan eguerdiko hamabietan amak eta arrebak etxeko sukaldean entzun genuen partea. Ez zuten gauza gehiegirik esan baina detaile txikitxo bat nahikoa izan zen bigarrena gure senidea izan zitekeela ohartzeko. Horrek gurean tentsioa puntu batzuk igotzea ekarri zuen.
>
> Pentsa, gogoratzen dut berri hori entzun eta jantzi ostean Egoitzen neska lagunarekin herrira jaitsi izana lanera. *Kutxa*ko parean beste pertsona ezagun batekin topo egin genuen. Hark zuzenean zera galdegin zigun: "Berririk bai? Nor da bigarrena?". Ez dut sekula erantzuna ahaztuko: "Ez dut uste oso urrun dabilenik!". Gure susmoak pare bat egunetara konfirmatu ziren. Nola? Hori ere ez ahazteko modukoa!

Asteazkena zen, bi eguneko tentsioa oso nabaria zen etxean. Apenas beste gairik hitz egiten zen; zein ote zen zaldibitar gaztearekin zegoen pertsona? Aita eta anaia gaztea goizero bezalaxe aroztegira joan ziren lanera. Ordu batak eta erditarako, ohi bezala etxeratu ziren. Amak ohikoak burutu zituen: erosketak eta bazkaria. Arrebak aldiz egun handia zuen: anaiaren neska lagunarekin hitzordua zuen bi urtez lantzen aritu ziren proiektua gauzatzeko: enpresa bat sortu nahi zuten eta egun hartan paperak sinatu behar zituzten. Hori dela eta 13:50ak inguruan etxeratu zen arreba, Egoitzen neskalaguna bere kotxean utzi ostean. Sukaldeko mahaira joan eta, anaia gazteena jada bazkaldu eta telebistara albistegiak ikustera altxa zen. Bitartean, aita, ama eta arreba sukaldean zeuden, "enpresa" sortu eta sinatutakoaz, eta finean berri pozgarri batetaz –etorkizuna ereiten ari ziren!–, 10 minutuko hizketaldian. 14:00k puntuan albistegien sintoniak jo zuen eta bigarren kidearen izena esan zuten: Egoitz Gurrutxaga Gogortza… Bi garrasi sukaldean eta egongelatik sukalderako bidean *mekaguendios!* ozen bat entzun ziren.

Ama sukaldetik atera eta bere gelara joan zen, aita sukaldean geratu zen eserita, aulkian, anaia egongelan bueltaka oinez eta arreba gela batetik bestera oinez, deus egin gabe baina geratu ezinik. Bi anai-arrebek topo egin zuten salan.

> Une batean biok erreakzionatu eta gurasoen bila jo genuen. Semea amarengana, alaba aitarengana. Altxarazi eta euren logelan bildu ginen. Ostean hasi zen telefonoa eta beheko portaleko tinbrea. Konfirmatzera etorri zirenerako guk irratitik jakin genuen lehen gezurra: gobernua familiarrekin jarri zela kontaktuan identitatea konfirmatzeko! Hortxe hasi ziren komunikabide eta boterea gure sufrimenduari gain-karga jartzen.

Berriak eta jaso zuten moduak eragindako kolpe gogorraren ostean arrebak oroitzen du nola seme gazteenak aipatu zuen: “Argi izan dezazuela jada ez garela Jose Luis, Ana Mari, Oroitz eta Eneritz. Hemendik aurrera Egoitzen aita, ama, anaia eta arreba gara”. Hori entzun eta abian jarri ziren.

> Ordurako etxea jendez lepo zegoen: lagunak, senitartekoak, abokatuak e.a., eta handik aurrerakoak abiatu genituen. DNA frogak egin behar genituen eta Bilbora abiatu ginen. Gure nahi bakarra egin beharreko gestio guztiak egin eta gure senidea etxera ekarri eta erraustea zen. Gure artean izan nahi genuen. Baina Bilbora heldu eta frogak egin ostean gorpua eramatea ezinezkoa zela esan ziguten. Bertan geratzen zela emaitzak izan arte. Sufrimendu eta tentsio hura egun batzuez luzatu zuten. Inork ez dugu argi zenbat izan ziren; egun guztiak oso ilunak, luzeak eta gogorrak ziren. Hilabeteak pasatzen ari zirela zirudien. Egun horietan eta gainontzeko egunetan ezinbestekoa izan zen herritar eta senitartekoengandik jasotako laguntza, elkartasuna eta indarra. Eta azkenean iritsi zen eguna. Gorpuaren bila Bilbora abiatu ginen; gurera ekarri nahi genuen.
>
> Hilotza atera zuten garaje antzeko batetik eta bertan elkartutako jendetzaren aurrean senitartekook lehen agurra eskaini genion Egoitzi. Bizkaitik Gipuzkoara ekin genion; bidean zenbait geldialdi egin genituen. Egoitzi agurra eskainiz. Baina helikopteroa beti gainean zegoen… Zerbait gaizki aterako zenaren susmoa etxeko guztiok genuen. Eta horrela izan zen! Herriaren atarian ginela, zipaio andanak bidea itxi eta gorpua osten saiatu ziren. Ez ziguten gorpua herritik sartzen utzi nahi; agurrak eta edozein motako eskaintzak debekatuta zeudela

esan ziguten. Eurek eramango zutela gorpua. Une horretaz gogoratzen duguna, Egoitzen neskalaguna eta anai arrebak gindoazen kotxetik korrika atera eta zipaioengana joan ginela. Atzetik ezker abertzaleko zuzendaritzako kideak genituen, gu lasaitu asmoz. Gutako bakoitzak zipaio bana hartu eta barruak eskatutako guztia adierazi genien: mandoarekin ere garrasika aritu ginen. Ezker abertzaleko kideak lasaitzen saiatzen ziren eta hauek ere pikutara bidaltzen genituen! Azkenean bertatik atera eta akordio batetara iritsi ziren. Karabanaren tartean furgonetak sartuko ziren: bat gorpua zihoan kotxearen aurrean eta bestea amaieran; tartean besteren bat sartu zen. Azkenean Egoitz herrian zegoen: Zentolenen.

Hurrengo eguneko oso irudi gogor baina esanguratsu batekin gogoratu gara. Goizeko 9:30-10:00k izango ziren, ez dugu gogoratzen. Sukaldean gurasoak eta anai-arrebak eta halako batean Sorozabalen martxa funebrea entzun genuen. Laurak leihora atera eta ukabila goian genuela jaso genuen herritarrak martxa honen pean burutzen ari ziren kotxe karabana. Guztiek ikurrina txirikorda beltzarekin zeramaten.

Hortik aurrera, Egoitzi azken agurra egitea eta erraustea genuen helburu. Ez ziguten batere erraza jarri. Errraustu genuen arratsalde hartan, herriko Foruen Plazan, bere errautsak hainbesteko laguntza eman zigun jendearen aurrean jarri nahi genituen. Egoitzen errautsak inguratu eta kordel bat egin zuten zipaioek, beraren barruan neskalaguna, anai-arrebak, osaba eta aita erretenitu gintuztelarik. Berriro ere eurekin negoziatu ondoren, eurek egindako pasillo baten tartetik errautsak atera eta etxeratzea lortu genuen.

Sentitzen genuena inpotentzia eta nazka ziren, gorrotoa eta errabia. Baina bestetik Egoitz eta Hodeirekiko maitasuna eta indarra zen. Herriaren maitasuna ere oso gertutik sentitzen genuen, horrek honi guztiari aurre egiteko indarra eman zigun. Eta herritarrek emandakoari erantzuten saiatu ginen: omenaldiaren egunean karga polizial izugarria izan zen herrian. Anaiak eta arrebok Orereetako txoko guztietatik jendea atera eta euren kotxe zein etxeetara bideratzen pasatu genuen arratsalde osoa eta gauaren parte bat. Herria hartuta zegoen… herria Egoitzekiko maitasunez, laguntasunez eta esker onez hartuta zegoen!

## 25. OROITZAPENEAN

1936-39ko gerrako hil eta desagerraraziei buruz ari da Andoni Lekuona Berasategi *Oroipena zor* argitalpenean. Gerra-gerraoste hartatik huntza baino areago eta itogarriago hedatu zen isiltasunaren gaitzaz ere bai:

> Familian gertatu ziren heriotza basati eta ankerrez ez genuen ezer jakin, ez ziguten ezer esan, isilik pasatu zen. Eta, zoritxarrez, bazegoen zer esana eta zer kontatua. Hain zuzen, aitaren partetik, bi osaba galdu genituen: osaba Julian, Oiartzungo udaletxean presentatu, Errenteriara eraman eta, arrastorik utzi gabe, desagertu zena, eta osaba Martin, apaiza, Ondarretako kartzelan egon ondoren, Hernaniko harrobi-zuloan, fusilatu eta, familiakoen ezkutuan, bertako hilerrian lurperatu zutena…
>
> Baina, jakina, gure hildakoak ez genituen ahazten gure baitan, gure barruan, gure artean; hau da, isilpean, bazterrean zegoenak zer pentsatu eta zer esango zuen beldur; bakarka bizi eta sufritu beharreko sentipenak baitziren haiek, batez ere fusilatuez eta desagertuez geneuzkan bihotzondoko sentipenak.

Etxe askotako isiltasuna izango zen hura, eta Andonik berak ematen du zergatiren bat:

> Familiako gurasoak zirenentzat, etxeko desagertu bat zauri bat zen, ebaki ikaragarri bat, eta edozein zaurik bezala, gaia ukitzea bera isilpean zegoen; oinazea berritzen zuen eta ahal zen gutxien ukitzea eskatzen zuen…

Eta etxean isiltasun lanbroak estaltzen bazuen gaiari buruzko edozein elkarrizketa, zer esanik ez etxetik kanpo, etxekoak ez zirenekin eta erabateko konfiantzarik ez zegoen ezagun edo ezezagunekin aritzean.

Francoren azkenarekin isiltasun eta izualdi hari ere azkena etorriko zitzaiola amets egin zuen, federik onenez askok eta askok, baina ez zen horrela gertatu.

Ematen du oraindik ere isiltasun eta aizaro haren guardian, zaintza zuhurrean, daudela 36-39ko gerrako irabazle haiek, pelotoi militarrean zurrun, zirkin demokratikorik gabe. Batzutan engainatzen gara hala ere, eta Andonirekin bat egin dezakegu ilusio hauskor baten instanteko leinuruan:

"Egia esan, utz iezaguzue gure hildakoak bakean ehorzten" pentsatu nuen aurrena, gure hildakoak hildako gisa ez direla existitzen konturatu nintzen arte…

Lehen, gerra garaian, hilik nahi zituzten, eta armen bidez lortu zuten hori, gerra zibilarekin. Ez daude pozik, ordea, eta "hilik" nahi dituzte orain eta, gainera, "ahaztuta", oroitzapen ekitaldi edota oroigarririk gabe; gure oroimenetik kanpo eta, ahal bada, baita historiatik ere; beren historiatik, noski, haiek kontatzen duten horretatik…

Inolako epaimahai eta epaiketarik gabe hil zituzten, inolako errukirik gabe, eta, doilorki hil ondoren, hobi komunetan ehortzi eta ahantzarazi zituzten. Ez zuten utzi hileta publikoa egin ziezaieten ere…".

Andoni Lekuonak kontatzen du beren osaba, aitaren anaia alegia, bisitatzera joan zirela Ondarretako kartzelara izeba Pilar Lekuona eta Diburtxi Berasategi. Han, baina, askatasunean irten zela esan omen zien kartzelako zuzendariak; elkarrekin kaleratu zirela Martin Lekuona eta Gerbasio Albisu Errenteriako apaizak.

– Eta, non daude? –galdetu ei zion izebak.

– Ba etxean egongo dira –kartzela zuzendariaren erantzuna.

– Baina, handik gatoz eta… –izebak atzera.

– Ba, frentean egongo dira… Ezin da besterik esan: askatasunean daude –ostera kartzela zuzendariak, erretilu bat arta zopa eskaintzen ari denaren itxura xaloan seguru asko, ezin gardenago erakutsiz aginteak ohi duen larderia zuria.

Jakina da zer izan zen sasoi, eta egoera hartan zeudenen artetik, askatasunean atera eta paseora eramaten zituztenen patua.

Gorputzik gabeko lurperatzeak izan zirela dio Andonik:

> Laster, lurperatzerik ez zela izan esango digute, eta, beraz, eta bukatzeko, hildakorik ez zela izan…

# 26. ETXERA

1980ko hamarkadan GALek hildako euskal iheslariei egindako hiletetan oinarritu zen Begoña Aretxaga, *Los funerales en el nacionalismo radical vasco* saiakera idazteko. 1983-85 bitartean egindako hiletetan, zehatz esateko.

Ipar Euskal Herrian egindako hileta haietan ez da elizkizunik; errito zibilak dira, frontoietan egiten direnak gehienak: Donibane Lohitzuneko Jai Alain, Hendaiako Beltzenian… Errefuxiatuen komunitateak eta bertako lagunek kide eroriari eskainitako azken agurrak izaten ziren batik bat.

Gorazarrezko ekitaldi haiek frontoi edo leku itxietan egiteko bazeuden segurtasun arrazoiak ere, baina “frontoia ez da badaezpadako tokia; oroimen indar handia duen lekua da gure iritzian. Errefuxiatu baten heriotzagatik egiten den apainketak (ikurrinak ipini, hilaren argazkiak eta beraren aipamenak egiten dituzten pankartak) une horretan leku horrek duen berezitasuna nabarmenagotzen dute…”.

Hiletak, hala ere, frontoian gabe, elizan denean ere, badu bere eite berezia:

> Gehienetan elizan egin izan diren hileta abertzaleak, zeremonia erlijioso ez ezik ekitaldi politiko ere badira. Orokorrean, ezartzen zaizkion eranskinek erakusten dute hilaren estatus ezohikoa. Hala, gorpua bertan egon ohi da, ikurrinarekin estalita eta lore koroaz eta sortaz inguratuta, meza euskaraz egiten da…

> Eskuarki omenaldiak egin ohi diren enparantza da esanguratsutzat aipatzen dugun hirugarren espazioa. Enparantzak herriaren erdigunea markatzen du; bertan egin ohi dira eguneroko bizitzan bereziak diren ekitaldiak…

Peru eta Steinen kasuan, Bixente Perurena eta Angel Gurminorenean alegia, Hendaiako Beltzenia frontoian hileta omenaldia egin ondoren, Oiartzunera zuzendu zen segizioa. Han, Peruren jaioterriko enparantzan, ikurrinaz estalitako mahaiaren gainean ipini zituzten euren amek bi militanteen errautsak. Hileta omenaldia egin ostean, Olatzagutiara eraman zituzten Steinenak.

Iparraldeko hileta omenaldien jarraian, kasu gehienetan behintzat, Hendaiatik Irunera bitarteko mugaraino laguntzen zioten segizioan errefuxiatu eta bertako lagunek. Handik aurrera, senide eta hegoaldeko lagunek jarraitzen zuten.

Hilaren jaioterrira bidean egiten zitzaizkien dolu erakustaldi eta omenaldiez gain, sorterrian bertan egiten zitzaien militante hilei hileta zibila edo elizkizunekoa, azkenik hilerrira eraman eta hobiratuz, edo hautsak hedatuz.

Hileta eta azken agurraren aurretik etxera eramatea eta etxean beila egitea izan da gehienetan etxekoen nahia.

"…Espirituen eta gure aurrekoen arimen egoitza da etxea, eta bisita egiten diote egunero…", hartzen dio Aretxagak Barandiarani; "etxea sepultura ere bazen kristautasunaren aurretik, eta bertan egiten zitzaizkien eskaintzak hilei". Elizako "jarlekua" edo sepultura ohitura horren kristautasunera egokitzea baino ez ei da. Edonola ere, andabideak, gorputz-bideak, lotzen ditu etxea eta elizako sepul-

tura eta, beraz, hilerria. Alda ezina ohi da –ohi zen, hobeto esateko– gorputz-bidea, eta bide horretatik eramaten da gorpua etxetik elizara. Ohiturazko arauari atxikitzea litzateke, bada, kanpoan hil dena etxera ekarri eta etxean beila egin nahi izatea hileta aurretik. Etxetik igaro gabe hobiratzea, "arauzko bidea" egin gabe uztea litzateke.

"Laburbilduz, esan dezakegu heriotzaren auzian osagarri nagusia dela etxea eta beti presente dagoela hileta erritualean", dio Aretxagak.

Biziontzat ere, ez da esan beharrik, erreferentzia dela etxea, eta ezaugarri ere izan ohi da. Etxearen izena hartu izan dute sarritan etxekoek, eta etxearen izen horrekin ezagutu izan dira. Horregatik ere, hila iheslaria edo presoa denean, bere gogoaren kontra etxetik urruti dagoela hil denean, are garrantzitsuago bilakatzen da itzultzea. Eta horrexegatik, hain zuzen, trabatu izan dute askotan urrutian hildako euskal militanteen etxera bidea, zuzenean hilerrira edo hilobira eramatea behartuz, eta omenaldiak debekatuz batez ere. Herriratzea, eta etxetik igaro ondoren hileta –zibil edo erlijiosoa– egin ostean errautsak haizetaratzea edo gorpua hobiratzea –lur ematea– arauz onartzen dugun bidea da, eta, beraz, hilaren atseden-bidea. Etxetik, eta etxean beila eginik –agur hitzak esanda– abiatzen baita hilaren atseden hartzea.

Gorpua bahituta –epaileen aginduekin edo gabe, poliziak hainbat aldiz indarrez egin duena– zuzenean hilerrira eraman eta lurperatzea, hila zigortuz –etxekoengandik erauzi, desagerrarazi eta lurpeko zulora jaurtitzea euren jokaeran eta pentsaeran, haren senide eta lagunengan mendekua hartzeko ahalegina da.

Sorterrira itzuliz eta familia-hilobiaren bitartez sinbolikoki etxeratuz ere gauzatzen da hilak herriko seme gisa duen estatusa. Baina beti presente dauden senideen portaeran, amarenean batik bat, literalizatzen da batez ere. Hileta erritualetan beti errepikatzen den Gabriel Arestiren poemak orduan hartzen du bere guztizko zentzua:

Ni hilko naiz
nire arima galduko da
nire askazia galduko da
baina nire aitaren etxeak
iraunen du zutik.

## 27. IÑAKI OJEDA

Iñakiren ama Asun Martinek, letra apur bat dardaratia baina lerro zuzen txukunetan biziberritu eta idatzi ditu semea hil zioteneko oroitzapenak:

> Gogorra eta tristea da egun haietako samina gogoratzea; egun haietakoa eta pasa ditugun hainbat eta hainbat urtetakoa. Hala ere, saiatuko naiz kontatzen.
>
> 1984ko otsailaren 12a zen; zortziak laurden gutxi. Deitu egin zuten eta neuk ireki nuen atea. Uniforme marroi batekin topo egin nuen. Horixe da gogoratzen dudan guztia: "Andre, zure semea eraitsi dute tiroketa batean; Basurtoko ospitalean dago".
>
> Atea itxi nuen; amaiezina iruditu zitzaidan etxeko pasilloa. Senarra logelan zegoen eta, "zer gertatzen da?, nor da?", galdetzen zidan. Ikaragarria izan zen… Iñaki hil zigutela esan nion. Bitxia da, pentsaizu… ezin genuela negarrik egin.
>
> Beste seme-alabak ez zeuden etxean, ez zen asko joanak zirela. Senideei deituta, iloba batek lagundu zigun ospitalera, baina ez zegoen han. Desesperazio eta angustiaz itota, Gurutzetan zegoela jakin genuen, hil zuten auzo berean. Nik itxaropen printza bat neukan… Badakizu, besteren bat eta ez bera izango ote zen itxaropen egoista.

Ezin izan nuen ikusi; zoruari itsatsi zitzaizkion nire oinak… Zurrun, ezin pausorik egin. Ez nion azken musua eman eta, horren damu-minez, ez diot neure buruari barkatzen… Neure senarraren negarra entzuten nuen: "seme, seme…". Ni hutsik nengoen, edo oinazez gainezka, eta ospitaleko arduradunari ordainarazi nion, nork hil zuen galdetuz… Edozer gauza esan nion, ez zuen ezer erantzun.

Lagunak eta abokatua etorri ziren; orduak pasa arte ez zen zabaldu berria.

Hurrengo egunean egin zioten autopsia, eta arratsaldean hileta, bataioa eta lehen Jaunartzea egin zituen Santa Maria elizan. Ez dakit zergatik jartzen dizudan hau; fedea eta elizak esan nahi duen guztia kendu didate.

Hiletak egiten utzi ziguten eta milaka jende joan zen. Elizatik kanpo omenaldi bat ere egin zitzaion, baina askok ezin izan genuen hurbiletik ikusi, jendetza handia zelako.

Arratsalde tristea izan zen, xirimiriarekin. Erabat gaututa, lepoan eraman zuten bide sailean, kilometro erditsu, hilerrira arte; Sorozabalen martxa lagun, espaloiak jendez beteta, erabateko isiltasunean.

Lokamuts bat zen hura niretzat; ezin nuen ulertu gure semea zela…

Ez zen ezer gertatu; hauteskunde kanpainan geunden, eta hainbeste jende… Zerbait gertatu zitekeen.

Beti saiatu gara oroitzapen ekitaldiak eta omenaldiak egiten. Errepresioa, oroimen plakak kentzea, isunak, kolpeak… egin zuten eta egiten dute. Nire senar Iñakiri bizitza mikaztu eta ezinezko egin zioten (2008aren erdi aldera hil zen, bihotzekoak jota).

Sentimenduz txikituta, apurtuta, geratu zen etxea, baina gure seme-alabak, senarra eta neu bat eginda. Arazo guztiekin ere, urguiluz beteta eta burua goian. Eta horrela jarraitu dugu.

## 28. HERIOREN LABIRINTOA

Labirintoa da espetxea, labirinto biziduna esango nuke, formaz aldatzen ere badakielako irteera zailagotzeko; eta Heriorena da labirintoa, gunea, joko zelaia, behin eta berriz frogatu digunez zorigaiztoz.

1985eko ekainean Alcala Mecon Jose Ramon Goikoetxeak bere buruaz beste egin zuenetik, badira hamahiru espetxean hil diren euskal preso politikoak; beste zazpi, berriz, gaixotasun larriekin kaleratu ondoren hil dira. Hau, gure aldiko kartzela aldiari eta kolektiboari dagokionean, jakina. Zenbakiak zertxobait aldatuko lirateke denboran atzera eginez gero.

Kartzelan hil diren kideen artetik zortzik beren buruaz beste egin zuten. Azken ordu hori ez da, ordea, badaezpadakoa eta, zehatzago esateko, urka-bilurra kartzelak estutu diela esan behar genuke; beren buruaz beste egiteraino jazarri, setiatu eta estutu baititu kartzelaren oldarrak eta larderiak.

Orokorrean, kontuan darabiltzagun hogeita batetik hamabostek, 27tik 45 urte bitarteko adina zuten. Hogei dira gizonezkoak eta bat, Ohiane Errazkin, emakumea. Herio eta bere zerbitzarien labirintoa da espetxea. Euskal presoak ez ezik, preso sozialen artetik ere amairik ez duen zerrendan eraman ohi ditu Heriok, eta bere zerbitzari leialek siesta denboran edo presoak bakoitza bere ziegan daudenean, ustez inork ikusiko ez dituen orduetan, eraman nahi izaten dute hilkutxa. Ezkutuan alegia; ez omenaldirik, ez beste presoen agurrik… bakardaderik triste eta arrotzenean.

Espetxean hil diren gure kideen artetik Joseba Asensio, Mikel Lopetegi eta Juan Carlos Alberdiri Herrera de la Manchan egin zitzaizkien beila eta agurra izan ziren behar bada gure kolektiboak talde handian egin zituen lehenak eta azkenak. 1986ko ekainean hil zen Joseba Asensio, eta 1988ko martxoan eta ekainean Mikel Lopetegi eta Juan Carlos Alberdi. Modulu bakoitzetik taldeka irten eta bisitetara bideko pasilloan ipinita zegoen gorpuari azken agurra egiteko aukera izan genuen guztiok hiru kide hilen kasuan. Horrez gain, senideak Euskal Herritik etorri eta gorpua eraman arte beila egin zioten kide batzuek.

Sasoi hartan 220-240 inguru euskal preso geunden Herreran. Kartzelako erregimena lehen gradukoa zen eta zorrotza zela esan daitekeen arren, edozein arazo edo gehiegikeriaren baten aurrean batbatean jaiki eta talde gisa erantzuna ematen zuen moduluak eta kartzela osoak. Atzera begiratuta, zalantzarik ez dago debekatu ezin zigutelako uzten zigutela kide hilari beila eta azken agurra egiten. Hirurogei inguru kide geunden moduluan; ez ginen hirurogei edo ehun preso arrunten artean sartu eta sakabanatutako euskal preso bi edo hiru. Ondo zekiten denok batera genuen indarraren berri, eta seguru asko pentsatu ere ez zuten egiten kide hilari azken agurra ematea debekatzerik.

Oso bestelakoa izan da, oker ez banago, 1988az geroztik kartzelan hil diren kideen kasua.

Jose Maria Aranzamendi *Katxue* 1997ko otsailaren zazpian hil zen Alcala Meco espetxean. Espetxeak hil zuen, bere buruaz beste egiteraino estututa. Josu Urrutikoetxea kidearekin zegoen moduluan. Arratsaldeko zazpietan, ziegetan geratu zirenak afaritara jaisteko or-

duan alegia, galerian zehar Katxueren ziegara zihoazen sendagileren batzuk ikusi zituen Josuk, eta hara joan zen bera ere.

Istant batez sartu ahal izan zen Katxueren ziegara, baina berehala bultzaka kanporatu eta bidali zuten sendagile eta kartzeleroek. Katxueren senideei deitu eta gertatuaren berri berak eman ahal izatea nahi zuen Josuk, baina ez zioten hori egiten ere utzi.

Azkenean, Katxueren heriotzaren berri senideek baino lehen jakin zuten komunikabideek. Bazirudien, gainera, oharren bat utzi zuela Katxuek, bere gauzak Josurentzat uzten zituela esanez besteak beste. Baina ohar hori ez zioten eman ez Josuri, ez senideei, ez abokatuei. Gertatuaren berri jakin zutenean Alcalako modulu bakoitzeko presoek ahal bezala eskaini zizkioten dolu keinuak: ikurrina xingola beltzarekin ipiniz, pankartaren bat hedatuz gertatua salatuz…

Izuen eta Herioren gordelekuan bertako guardek ukatu zioten hileta eta omenaldia bere herrian egin zioten, hala ere, Katxueri.

Herriko seme hilaren bila Alcala Mecora joan ziren Katxueren senide eta lagunak. Agiri egite eta burokraziak ohikoak dituen tramiteak amaitu ondoren, Elorriora abiatu ziren gorpuarekin, otsailaren bederatzian. Gasteizen eskaini zioten lehen omenaldia preso hilari, Otxandion jarraian, eta Durangon jende gehiago elkartu zitzaion segizioari Elorriora laguntzeko.

Sorozabalen martxa megafoniatik entzuten zela egin zuten bidearen azken saila, herriko plaza ingururaino, eta handik lepoan eraman zu-

ten kutxa udaletxe aurreko tumulura arte, jendetzak ikurrinak goratuz pasabidea egiten ziola. Aurreskua dantzatu zioten han.

Ertzainak arduratu ziren, Katxue azken hauteskundeetan zinegotzi hautatua izan zen arren, gorpua udaletxera sartu ez zezaten. Baina ezin izan zuten ekidin ehunka lagun eta herritarrek udaletxe atarian gorpuari beila egitea, arratsaldeko seietan hiletak egiteko elizara eraman zuten arte.

Elizkizunak amaitzean, atzera udaletxe aurrera eraman zuten gorpua eta azken agurra eta omenaldia egin zizkioten han.

Azkenik, segizio jendetsua eraman zuten hilerrira, eta handik udaletxera manifestazioan itzuli zen jendetza. Orduan eraso zion Ertzaintzak Katxueren hileta omenaldira inguratutakoei.

Hauteskundeetan herritarrek aukeratutako zinegotzia izanagatik, EAJk, herrian alkatetza zuen alderdiak alegia, ez zuen nahi izan Katxueren hil beila udaletxean egitea. Eta, horrekin eta sakabanaketa bultzatzearekin aski ez, nonbait, ertzainak bidali zituen kartzelak hil zuen herriko semea omendu nahi zuen jendea zafratzera.

# 29. ETXETIK IGARO NAHIA

1988ko martxoaren hiruko goizeko bederatzietan, Manzanareseko hilerrian Mikel Lopetegiren gorpua zeukan hilkutxa furgoian sartzera zihoazenean, ordura arte gainean eduki zuen ikurrina eskatu zuten senideek.

Bezperan, Herrera de la Manchako hirugarren moduluan, bere buruaz beste egin zuen Mikelek. Goizean, kartzela zainek ateak ireki baino lehen, irratiz jakin genuen berria beste moduluetan geundenok. Ia bi urte lehenago Joseba Asensioren gorpuarekin egin bezala, bisitetara bideko pasilloan ipini zen Mikelen gorpua, ikurrina eta ETA erakundeko ikurra zituela gainean. Han, bere lagunetako batzuek beila egiten zioten bitartean, kide eroriari azken agurra ematera taldeka joan ahal izan ginen kartzelako lau moduluetan geundenok.

Arratsaldean kideetako batzuek sartu zuten gorpua furgoian, kartzelatik Manzanareseko hilerrira eraman eta han autopsia egiteko. Txapelokerrez eta kazetariz inguratua egon zen hilerria eta autopsia egiten ari ziren gela.

Kontua da moduluko lagunek ipinita gorpuaren gainean egondako ikurrak eskatu bai, baina inork ez ziela eman Mikelen senideei haien berririk. Hilerrira inolako ikurrik gabe iritsi zela zioten hango funtzionarioek; beraiek ez zekitela ezer esan zuten guardia zibilek… Kontua da batzuen eta besteen artean desagerrarazi zituztela gorpua estaltzen zuten ikurrak.

Etxera bidean, Arabako Zanbranan eskaini zioten Mikeli lehen omenaldia; senide eta lagunak gehitu zitzaizkien Manzanarestik

iritsitakoei, eta Tolosara, Mikel Lopetegiren jaioterrira hartu zuten Gasteiztik zehar, preso hilaren argazkiak eta ikurrinak agerian zituztela segizio autoek.

Arratsaldeko zazpiak pasata iritsi zen Tolosara preso hila. Triangelu Enparantzan egin zioten omenaldia. Furgoitik atera eta aldare modu baten gainean ipini zuten hilkutxa, ikurrina, ETA erakundearen ikurra eta lore txorta bat gainean zituela. Hizlari, bertsolari, aurresku dantzari…

Omen ekitaldiaren ondoren manifestazioa egin zen, eta gorpua jaiotetxera eraman zuten jarraian. Mikel beraren jaiotetxean etxekoek beila egin ondoren, hurrengo eguerdian ipini zuten gorpua udaletxean, jendeak azken agurra eman ziezaion, arratsaldeko hileta elizkizunak arte.

Ia lau urte lehenago, 1984ko abuztuaren zazpian, Eduardo Irizar militante idiazabaldarra hil zuten guardia zibilek. Hurrengo eguneko eguerdian, Donostiako Polloetik bere jaiotetxera, Miti-Zahar baserrira eraman zuten, eta hantxe egin zioten beila etxekoek arratsaldeko zortzietan hileta elizkizunetara eraman zuten arte.

Hileta elizkizunen ondoren egin zioten omenaldia, eliza ondoko enparantzan, aurresku, hitzaldi, bertsolari eta gainerakoekin. Jarraian gorpuari hilerrira lagundu zion segizioak, azken agurra emanez.

Hildakoa etxean hartu eta beila egin nahi izateak oso barruko indar baten bete beharreko agindua dirudi.

## 30. EKAIN RUIZ IBARGUREN

2000ko abuztuaren zazpian ETAko lau mutil hil ziren Boluetan, autoan zeramaten lehergailuak eztanda eginda. Patxi Rementeria, Zigor Aranbarri, Urko Gerrikagoitia eta Ekain Ruiz ziren lau gazteok, baina egunak joan ziren hori jakin orduko. Antzeko gertaeretan lehenago ere egin izan zuten moduan, balizko izenak jaulki zituen poliziak militante hilenak zirela esanez. Egunetan luzatu zieten etxekoei samina eta egonezina.

Patxi Rementeria markinarrari hil beila herriko udaletxean egin ziotela ikusita, Urko Gerrikagoitia eta Zigor Aranbarri durangarren gorpuzkinak ehorzleei eman zizkien epaileak, berehala ehorzteko aginduarekin. Gorpuzkinok berreskuratzea lortu zuten hala ere senideek; lau militanteei hiletak eta omenaldiak egin ahal izan zizkieten euren jaioterrietan, epailearen debekuen eta poliziaren indarkeria eta erasoen gainetik.

Hona, Ekainen arreba Idurreren eskutik, nola bizi izan zituzten etxean egun haiek:

> Abuztua zen eta guztiak oporretan geunden. Telebista ikusten ari ginela saioa moztu eta Boluetako leherketaren berri eman zuten. Irudi inpaktanteak izan ziren. Hurrengo egunean, Jaime Mayor Oreja oroitzen dugu mikrofonoz inguraturik, baina ez zitzaigun burutik pasa hildakoetako bat Ekain izan zitekeenik. Gudarietako bat agian neska zela entzutean, amak dio Hernaniko neska batez gogoratu zela, baina ez Ekainez. Ez dakit, ez genuen etxetik hain hurbil irudikatzen edo ez genuen errealitatea ikusi nahi.

Pare bat egunetara etxera etorri zitzaizkigun, ETAk Ekain eta Patxi hildakoetako bi zirela baieztatu zuela esanez. Amak jakin zuen lehenengo. Esaten dit hasiera batean ateari eutsi behar izan ziola oreka ez galtzeko eta, gero, ez zuela entzundakoa sinetsi nahi. Jarraian aita iritsi zen etxera, Antiguako frontoian pilota partidu batzuk ikusi ostean. Aitak dio beretzako arrotza zen jendearekin topo egin zuela egongelan eta ez zuela galderarik egin behar izan, berehala hutsik sentitu zela. Nahiz eta desberdintasun ideologikoak zituzten, esaten dit beti egongo dela Ekainez harro, ez erakundean sartu zelako, baizik eta egunerokotasuneko ekintzetan zein jarreretan bere pentsamenduarekin kontsekuente eta koherente zelako: solidarioa, bizitza kontsumistatik at…

Gero ni heldu nintzen, arratsaldea hondartzan igaro ondoren. Sofak jendez gainezka eta aita serio-serio gogoratzen ditut. Amak logelara eraman ninduen eta besarkaturik geundela kontatu zidan berria. Negar egin nahi genuen, tentsioa bota, baina ezin genuen malkorik isuri. Irreala egiten zitzaigun, urteak ziren Ekain ikusten ez genuela eta nola asimilatu berriro ikusiko ez genuela?

Hurrengo egunak nahasiak izan ziren denontzat, komunikabideetan izen ezberdinak entzuten genituelako. Ekainen izena eta argazkia han, hemen… jendea galdezka… dei anonimoak barrezka eta intimidatzeko asmotan ("Ekain txiki hilda dago, zorionak!"; "Ez dituzue Ekainen zati guztiak jaso, baina lasai, ate ondoan aurkituko dituzue…")… Bizitza "normala" egiten saiatzen ginen, "normala" ez zen arren. Denbora honetan, Zaloa atzerrian zegoen, oporretan, inkomunikaturik. Kasualitatez, prentsan irakurri zuen albistea:

"Oporretan nengoen, trenez Europatik barna. Oporraldi arraroa izaten ari zen eta halaxe azaldu nion nire bidai kideari: "ez dakit zer gertatzen zaidan baina arraro sentitzen naiz". Bruselako gazteentzako aterpetxe batean geundela jakin genuen ETAko lau militante hil zirela euren kotxeak eztanda eginda. Niri ez zitzaidan burutik pasa ere egin Ekain izan zitekeela. Ordutik aurrera egunkaria erosten genuen egunero berria jarraitu ahal izateko. Bruselatik Brujasera zihoan trenean gindoazela irakurri nuen El Mundo egunkarian hildakoetako bat Ekain zela. "Ez da posible", esan nion bidai lagunari, "Hego Amerikan zegoela esan zigun azken eskutitzean, ez da posible bera izatea". Hala ere, lehenengo geldialdian jaitsi ginen eta telefono kabinara zuzendu. Etxera deitu nuen baina ez zidan inork erantzuten. Ekainen bikotekide izan zenaren etxera deitu nuen eta haren ahizpak erantzun zidan: "bai, bera da", nire bidai lagunak jarraitu zuen elkarrizketa. Abiadura handiko tren batean itzuli ginen Euskal Herrira. Negar batean eman nuen bidaia osoa. Hernanira iritsi eta hutsa zegoen herria, Ekainen argazkiak zeuden nonahi, ikurrin eta krespoi beltzekin. Etxera joan nintzen eta ahizpa lo zegoen, besarkatu nuen. Ama ez zen etxean, nire bila joana zen lagun batzuekin Hendaiako tren estaziora, baina ez ginen topatu; lasaitua hartu nuen ama iritsi eta besarkatu nuenean. Askotan pentsatu izan dut agian nahastu egin zirela eta Ekain oraindik bizirik egon daitekeela" .

Ia bi aste igaro ziren ADN frogako emaitzak eman zizkiguten arte, genuen itxaropena, txikia bazen ere, zapuztu zen arte.

Amari beste ama bat hurbildu zitzaion eta bere hitzak grabatuak ditu:

– Sentitzen dut nirea bizirik egotea eta zurea hilik…

Bilbon ginen, gorpuaren zain, urteetan ikusi ez genuen senitartekoaren zain, baina "kondarrak" besterik ez zeuden. Ez genuen berriz ikusiko. 23 urte besterik ez; amorrua… Ihesi joan zenean ere ezin izan ginen agurtu.

Tanatorioan Ekain erraustu eta Hernanira itzultzeko izugarrizko gogoa genuen, erdi anestesiaturik ibili baikinen alde batetik bestera, eta guztia asimilatu gabe oraindik. Baina herria poliziaz josia topatu genuen. Epaileak errautsak udaletxean sartzea debekatu zuen. Eta orain hau… pentsatu genuen. Herriak berebiziko indarrarekin erantzun zuen, benetan, ez dugu inoiz ahaztuko; eta atzeko atetik bada ere, errautsak sartzea lortu genuen. Gutxienez, etxean eta etxekoekin zegoela sentitu genuen. Orduan, lasaitasun bila, lagun batzuen etxera joan ginen. Arratsaldean, berriz ere herriaren berotasuna sentitu genuen Tilosetan egin zitzaion omenaldian. Hori jende pila…Entzun genituen hitzak, oihuak… maitasunez, indarrez beteak zeuden, baina baita etsipenez eta saminez beteak ere. Guk geuk genituen sentimendu berberak. Ene, zenbat maite zuten… Baina guztia amaitzea nahi genuen.

Hurrengo egunean, Santa Barbaran, senitartekoak, lagunak eta herriko hainbat eta hainbat pertsona bildu ginen. Txuriaren bertso doinuekin errautsak bota genituen. Aske utzi genuen eta modu batean gu ere askeago sentitu ginen. Orain errauts batzuk etxean ditugu eta Santa Barbarako plaka, monolitoa…

behin baino gehiagotan kendu badituzte ere, eta honek haserrea sortzen badigu ere, bertan dugu berekin goxo-goxo egoteko txokoa. Ekain eta Oihaneren txokoa. Hori ez digu inork kenduko.

# 31. RAFA ETXEBESTE

Maite Perezekin batera hil zen Rafa Etxebeste, haren anaia Joxeanek egiten du egun eta gertaera mingarri haietatik gogoratzen dituen irudien kronika:

> Lehenengo esan nahi dizut urte asko igaro direla gertakizun haiek jazo zirenetik. Gurasoak oso helduak dira eta ez dituzte gogoan hainbat gauza, bereziki aitak, memoria guztiz galduta dauka eta. Horrenbestez, bakarrik nik neuk gogoan ditudan gertaerak kontatuko dizkizut.
>
> 1987ko abuztuaren 15a zen, jaieguna eta herriko festak nonahi. Eguerdi partean, irratitik jakin genuen Donostian leherketa bat gertatu zela Urumea pasealekuan, tren geltokitik EUTG aldera, hain zuzen. ETAko kideak izan zitezkeenaren ustea zabaltzen aritu ziren behin eta berriz komunikabideetatik. Halako albistea entzunda, bihotza kizkurtu zitzaigun etxeko guztioi. Urduritasuna nabaria zen etxean. Zoritxarrez, ilunabarrean baieztatu zuten irratitik anaia Rafa eta Maite zirela hildakoak. Ni neu lagunekin nengoen ohiko tabernan; hantxe telefono deia jaso zuen nire lagun eta lehengusuak. Berak eman zidan albistea, eta minutu batzuk erreakzionatu gabe egon ondoren, etxeko bidea hartu nuen. Iritsi nintzenean jende mordoa topatu nuen, bai atarian, baita etxean ere. Rafaren lagunak ziren, doluminak ematera eta gurasoak lasaitzeko asmoz etorriak. Aita nahikoa osorik zegoen; ama, berriz, urduri eta negar malkotan. Gero jakin nuen aitak Rafaren gorputza ikusi zuela Polloeko depositoan. Bera zela egiaztatzeko deitu omen zuten.

> Hurrengo eguna oso luzea izan zen; prentsa eta jende ugari hurbildu zen etxera. Herritar ezagun bat, familiaren baimenarekin, arduratu zen bozeramaile lanak egiteko, kazetariei erantzuteko eta prentsaurrekoa emateko. Goizean, Rafaren gorputza ekarri genuen etxera. Ez genuen oztopo gehiegirik izan, baina poliziaz josita zegoen herria eta baita etxe inguruak ere. Etxean eduki genuen, eta ateak irekiak egon ziren nahi zuenak ikusteko. Guk gorputza elizara eramatea nahi genuen, baina poliziak ez zigun utzi, zuzenean hilerrira eramateko agindu ziguten. Halaxe egin genuen, eta gutxi batzuen aurrean lurperatua izan zen. Hilerrirako bidea poliziaz josita zegoen, eta jendeari bertara hurbiltzea galarazten zioten. Ilunabarrean, Errenteriako Asuncion parrokian elizkizunak egin genituen, eta jende ugari bildu ginen bertan, herritarrak gehienak. Poliziak herriko sarrera guztiak itxi egin zituen; hargatik, kanpotik etorritako jende andana herrira sartu ezinik gelditu zen, familiako batzuei bakarrik utzi zieten sartzen. Hurrengo egunetan jakin genuen makina bat lagun eta ezagun gelditu zela azken agurra eman ezinda poliziaren zorroztasunagatik.
>
> Ondorengo egunetan gure bizitza arruntarekin jarraitu genuen; amari asko eragin zion gertakizunak, bera izan zen afektatuena. Pasatutako zorigaiztoko egun haietan konturatu ginen jendeak Rafa asko maite zuela, ugariak izan baitziren telefono deiak, bisitan etorritakoak, hiletan bildutako jendea… Egun, jendeak urtero omenaldia egiten jarraitzen du anaia zena ez ahazteko; jendearen bihotzetan dirau oraindik.

Rafaren gorpua etxera eramatea lortu bazuten ere, ez zieten utzi herritarrek eskaini nahi zieten hiletetarako elizara eramaten. Beste

kasu askotan legez, senideentzat mingarriena den une horixe baliatu zuten agintariek, gorpua zuzenean hilerrira eramanarazi eta etxeko lagunen gogoko azken agurra ukatzeko, samina minago egiteko.

## 32. OIHANE ERRAZKIN

Kartzelak azken 30 urteotan bere labirintuan hil dituen hamahiru euskal preso politikoetatik bat neska da, Ohiane Errazkin donostiarra.

Zeu zauden modulu horretan bertan kide bat hiltzen ikustea larria da; larritasunak hartzen dizu halakoan soin osoa eta gogo guztia, gordintasun gorrian sentiaraziz kidea eraman duen Herio hortxe dabilela zeure moduluan, edo albokoan, hurrengoa zein eraman hautatzen.

Baina kidea beste kartzela batean hil dela irratiz entzuten baduzu ere, mailuak legez kolpatzen zaitu berriak. Irratiak edo telebistak esan duena baizik ez jakiteak estutzen zaitu, gainera, gertaeraren gaineko burutazioak, galderak, susmoak eta aieruak trumilka eta nahasmahas datozkizun bitartean.

Hila edonor izanik ere, beti zaitu asaldagarri kide baten heriotza, barru-zartada handiagoa izango den arren laguna edo ezaguna baduzu. Eta hala ere, ezagutzen ez genuenoi ere esango nuke astinaldi bereziki mingotsa eman zigula Oihaneren heriotzak.

Mutil ala neska, kartzelak berdin estutzen gaituela eta Herioren labirintu hauetan berdin jausi gaitezkeela jakitun izan arren, gerora konturatu ginen seguru asko ez genuela espero gure kolektiboko neska baten heriotza.

Baina 2004ko uztailaren zazpitik zortzirako gauean, ordu bata eta hogeita hiru minutu zirenean, heriotza agiriak zehazten duenez, Fleury-Merogis espetxeko ziegan bere buruaz beste egin zuen Oihanek. Hurrengo goizeko 10:30etan euskal presoon abokatuetako bati dei egin zion kartzela zuzendariak… Hona bere gurasoen, aita Manu eta ama Antxoniren lekukotza:

> 2004ko uztailaren zortzian izan zen. Goizeko hamaiketan bilera batean nengoen, LABek Igaran duen egoitzan. Orduan, Amaiak, Administrazioko arduradunak, deitu zidan aparte eta esan zidan Oihaneren gorpua aurkitu zutela zintzilikatuta bere ziegan.
>
> Mundua gainera erori zitzaidan une hartan. Erreakziorik gabe gelditu nintzen, ezin nuen sinetsi. Berehala kotxe batean lantokira eraman ninduten, Anoeta estadioaren ondora. Han Antxoni zegoen, biok lantoki berean lan egiten baikenuen. Jendea biltzen hasi zen bertan: lankideak, lagunak, sindikatuko kideak, ezker abertzaleko kideak… Ni, egia esan, zonbi baten moduan nenbilen; ez, ordea, Antxoni, bera hasi baitzen antolatzen eman behar genituen urratsak.
>
> Gero etxera joan ginen elkarrekin, Parisera abiatzeko prestakuntza egitera eta, horrela Biarritzen abioia hartuta, arratsaldean Orly aireportura heldu ginen, Ibon, Antxoni, eta hirurok. Gurekin batera Joseba Alvarez, Jon Enparantza eta Yolanda Molina etorri zirelarik.

“Iloba Ainarak esanda jakin nuen –dio Oihaneren ama Antxonik–; negar batean dei egin zidan. Pentsatu nuen Manurekin eta seme Ibonekin hitz egin eta Oihaneren gorpua kendu behar geniola etsaiari.

Lankideei agindu nien ez esateko ezer, ez nuela entzun nahi ezer gaiari buruz, ez nuela errukirik behar. Gauza bera esan nien Parisen Oihaneren kideen amei, eta ez nuen egon nahi izan haietako inorekin".

Baina, abioia hartu aurretik, hogeita hiru urte kartzelan egondako Eugenioren neska-lagun Mahaniri eskatu nion lagun ziezadala gure etxea antolatzen, eta Olaia Kastresanaren ama Anari, lagun ziezadala itzuleran.

Abioian, bi aukera neuzkala pentsatu nuen: dena aurrean hartu eta Oihaneren gorpua hartzera sartu, edo abokatuei kasu egin. Abokatuei kasu egingo niela erabaki eta lo egiten saiatu nintzen.

"Aireportuan, presoei bisitan ziren senide eta lagun batzuk gure zain zeuden –jarraitzen du Manuk–. Gero esan ziguten biharamunera arte ez zegoela ezer egiterik. Orduan afaltzera joan ginen eta segidan hoteltxo batean ostatu hartu genuen. Lo gutxi eginda eta burua bueltaka edukita, horrela igaro genuen gau hura".

Goiz esnatu eta gosaldu ondoren, Evry-ko ospitalera joan ginen, bertako beilatokian Oihaneren gorpua baitzegoen. Arazorik gabe etxeko hirurok aukera izan genuen autopsia hasi baino lehen bakarrik hilotzarekin egoteko. Une hunkigarria benetan izan zen hura; malkoen artean muxu bat masailean eman nion eta, ezpainetan aurpegi hotz hura sentitu nuenean, nire bizitzaren zati batek benetan alde egin zuela iruditu zitzaidan. Oraindik barruan daukat sentsazio hura eta zirrara sortzen zait gogoratzen dudanean.

Gero autopsiaren ordua iritsi zen. Auzitegi medikua azaldu zen eta baita Jendarmeriako funtzionario bat ere. Orduan esan ziguten gutako norbait autopsian presente egoteko, baina ez genuen adorerik izan horretarako. Yolanda abokatua gure ordez egon zen eta horrexegatik beti gogoan izango dugu hura, beti eskertuko diogu une latz haietan egindakoa.

Evry-ko Udaletxean gestio batzuk egin ondoren, herriko ehorztetxera bidali zuten gorpua, erraustea erabaki genuelako, eta, kasualitatez, bertako arduradunak Donostian zeukan familia eta dena erraztu zigun, oso ondo portatu baitzen gurekin. Arratsaldean bertan erraustu zuten.

Hemen aipatu behar dugu La Santen zegoen Anartz Oiarzabal preso politikoaren gurasoak gurekin zirela, eta aitak –kasualitatea hau ere– Donostiako ehorztetxean lan egiten zuen. Horregatik, gorpua errausteaz Antxoni eta bera arduratuko zirela esan zuen. Baina poliziako bi funtzionario zeuden bertan errausketarena kontrolatzeko, eta orduan, Anartzen aitak zerbait pikatzeko eta edari batzuk eskaini zizkien eta gelatxo batean sartu zituen. Horrela, Antxoni eta Anartzen aitak bakarrik sartu zuten hilotza erraustera.

“Tanatorioan Oihaneren gorpua ikustera sartu ginenean –dio Antxonik–, ukabila goratuz agurtu nuen alabaren gorpuan ikusi nuen emakume askoren borrokaren ondorioa. Une horretan jakin nuen neure borrokan tinkoago izan banintz bizirik egongo zela alaba. Ez dut esan nahi Oihaneren heriotzaren errudun jotzen nuenik neure burua, estatu espainiarra eta frantsesa direlako errudun oso”.

Gorpua errekuperatu genuenean, Anartzen aitaren laguntzarekin sartu genuen kutxa errraustegian. Gero, Fresnesko taberna bateko elkartasun keinua; telefonoz deitzen utzi ziguten, eta, zertaz hitz egin genuen entzun zutenean, ez ziguten kobratu.

Baina ez dut ahaztuko kartzelako funtzionario malapartatua ere, euskal nortasun agiria eman genionean espainiarra nintzela esan zidana. Bi urte generaman karnet horrekin arazorik gabe igarotzen. Bere arduraduna etorri zen egoera lasaitzera.

“Bizpahiru ordu genituen errautsak jaso arte –Manuk berriro–, eta orduan, Asier Oiarzabal, Oihaneren mutil laguna, bisitatzera Fresnesko kartzelara jotzea erabaki genuen”.

Bisita bukatu eta berriro ehorztetxera joan ginen. Han, azken paperak bete, ziurtagiriak eta errautsak jaso eta Orlyko aireportura abiatu ginen ahalik eta bizkorren, azken abioia ez galtzeko. Horretarako, Parisko lagunak ziztu bizian eraman gintuen. Baina, abioia hartzear ginela, kontrola pasatzean errautsak zeramatzan ontziari erreparatu zioten eta bertan gelditu gintuzten txosten bat bete behar zutela esanez. Pentsatu genuen galduko genuela hegazkina, baina, zorionez, paper guztiak ondo zeuden eta, ozta-ozta izan arren, azkenean sartu ginen abioian.

Biarritzera iritsi ginenean, jende pila zegoen gure zain aireportuko atarian, ikurrinak, pankartak eta abar eskuetan zituztelarik. “Oihane gogoan zaitugu” leloa behin eta berriz entzutean, une erabat hunkigarria bizi izan genuen. Han ziren koadrilako lagun guztiak, ezagunak, ezezagunak, Iparraldekoak, Hegoaldekoak… Aurreskua dantzatu zuten gure aurrean. Antxonik

eskuen artean errautsak zituen, ehorztetxetik atera ginenetik ez baitzuen segundo bakar bat ere utzi.

Gero kotxe batean sartu gintuzten eta kotxe ilara luze baten artean Donostiarantz abiatu ginen. Pasaiatik igarotzean, gelditu ginen, bertan festetan zirela eta errepidea moztuta, aurresku bat Oihaneren omenez dantzatu zuten eta zapi gorri bana lepoan jarri ziguten. Azkenean, Donostiako Bulebarrera heldu ginen eta, han, berriro jende andana zain, aurreskua dantzatu eta etxerako bidea oinez hartu genuen. Ez naiz gogoratzen zein ordu zen, baina berandu samar uste dut zela. Bitartean, komentatu ziguten biharamunekoa, prentsaurrekoa eguerdian eta manifa nazionala arratsaldean. Pixkanaka gure inguruko jendea etxeratu, eta hirurok bakarrik geratu ginen etxean Oihaneren errautsekin. Ni, orduan hasi nintzen gertatutakoa barneratzen, gelditu zitzaigun hutsunea nabaritzen; ordura arte, dena oso azkar joan baitzen eta ez nuen aukerarik izan guztia asimilatzeko.

Biharamunean, larunbatean, eguerdian prentsaurrekoa izan genuen Donostiako Santi hotelean, hainbat kazetari eta telebista etorri zirelarik. Mahaian, etxeko hirurok, Jon Enparantza eta Joseba Alvarez eseri ginen eta pentsatzen genuena bota genuen.

Arratsaldean, manifara joan ginen, baina aurretik komentatu ziguten errautsak eraman ahalko genituen ala ez. Baina ez eramatea erabaki genuen, badaezpada ere. Bulebarrean milaka pertsona zegoen bilduta, eta Oihaneren irudia bi preso ohik zeramatela abiatu zen manifestazioa. Zirraragarria izan zen hainbeste jende gure ondoan ikustea, eta hunkigarria, aldi berean, gure alabaren aldeko oihuak entzutea. Hernani kaletik eta

> gero Urbieta eta San Martin kaleetatik aurrera joan ginen arazorik gabe, baina Foruen pasealekura iritsi ginenean, Ertzaintzak moztu zigun bidea manifestazioa desegiteko asmoarekin. Orduan jendea bultzaka hasi zen eta zipaioak kolpeka eta gomazko pilotak jaurtitzen, baina manifestazioaren aurre aldean soilik izan zuen honek eragina. Ibon eta nire anaia kolpatuak izan ziren beste batzuen artean eta guri bultzakadak eman zizkiguten, baina momentu horretan Antxonik eta biok hartu genuen Oihaneren argazkia eta manifaren buruan jarrita aurrera egin genuen, eta denak gure atzetik. Zipaioek, hura ikusita, erretiratzea erabaki zuten, baina gertutik manifestazioa zainduz. Horrela, berriro Bulebarrera sartu ginen eta beste oztoporik gabe kioskora iritsi ginen. Bertan omenaldi hunkigarria egin zioten alabari milaka herritarren aurrean.

Telebistan ikusi genituen manifestaldi hartako irudiak, nola oldartu zen ertzaintza jendearen aurka, nola makilatzen zituen Oihaneren senideak, lurrera jaurtiz, pankarta kentzen saiatuz… “Liskarren aurkako materiala defentsa moduan erabili beharra” izan ei zuten ertzainek; “erasoei aurka egiteko”, Herrizaingo Sailak esan zuenez. Ekintzetan ez ezik azalpenetan ere ez du falta larderiarik eta mespretxurik poliziaren jokabideak eskuarki.

“Igandean, azken omenaldia egin zitzaion eguerdian –jarraitzen du Manuk–. Etxetik atera ginen errautsak ontzi batean Antxonik zeramatzala, eta lagunen artean Kaira abiatu ginen, auzokideen errespetuzko begiradapean. Han, Oihanek hainbeste maitatzen zuen lekuan, Tornozuloan, herritar ugari aurkitu genuen bilduta, ikurrinak dolu-xingolekin, pankartak eta lore sorta anitz eskuen artean zituztela. Gure asmoa zen errautsak Tornozulo deituriko moila puntako

lekuan itsasoratzea, izugarri gustatzen baitzitzaion alabari han bainua hartzea".

Aurreskua dantzatu ostean, testu bat irakurri zuten, eta errautsak uretara botatzeko unean, gertaera erabat zirraragarria izan genuen: Antxonik ezin zituen errautsak utzi, eta negarrez eusten zion ontziari. Azkenean, ikurrina bat zabaldu genuen, lorez bete, errautsak gainean jarri eta senideen artean ur gainean zabaldu genituen Oihaneren hauts erreak. Ez genuen izan inongo oztoporik ekitaldi hura egiteko, polizia ez baitzen azaldu.

Baina errauts batzuk gorde genituen eta egun batzuk geroago etxekoak soilik joan ginen Hernaniko Santa Barbara haitzetara, bertan Boluetan eroritako Ekain Ruiz kidearen oroigarriaren ondoan errauts haiek haizetaratzera. Honen zergatia, Oihane eta Ekain, Boluetakoa arte, bikote zirela.

Esan beharra dago egun haietan jende askoren bisitak izan genituela; telegramak eta gutunak ere ugariak izan ziren, batik bat kartzeletatik bidalitakoak. Zerrenda luzea zen eta ezinezkoa gogoratzea gaur egun. Herritarren elkartasuna maila handikoa izan zen eta hori bihotzeraino iritsi zitzaigun, lagungarri oso izan baitzen.

Bestalde, urtero egiten diren omenaldiei buruz, lehenengoak arazo handirik gabekoak izan ziren, bai Kaian, bai Konstituzio plazan, baita Santa Barbaran ere. Hori bai, Kaian jarritako oroitarri-plakak beti kendu izan dituzte, eta moila puntan zegoen lehena zipaioek kendu zuten. 2007an hasi zen urtero antolatzen den marmitako txapelketa, eta hasieran "Oihane Errazkin Memoriala" zuen izena, baina ez argazkirik eta ez

izenik erakusteko ertzaintzaren mehatxuak jaso zituztenean, hildakoei auzoan egiten zaizkien omenaldi ezberdinak “Herriaren Memoria” lelopean antolatzea erabaki zuten antolatzaileek.

Guretzat ez da oso bidezkoa horrela ibili beharra, gure hildakoak ezkutuan gordetzea, eta pentsatzen dugu atzera pausu bat dela. Horregatik joaten gara ekitaldietara kamisetetan grabatutako alabaren argazkiekin. Eta, okerrena, Hernanikoek esan ziguteneanSanta Barbarako oroigarriak, Ekain eta Oihanerenak, kendu behar zirela, Auzitegi Nazionalaren aginduz. Guk ez genuen hori onartu, kentzekotan etsaiek kendu beharko zituztela pentsatu genuelako, baina ez guk edo gure jendeak, hori etsaiaren lana egitea baitzen. Azkenean kendu zituzten, eta egun beste leku batean erdi ezkutuan daude jarrita.

Esaten digutenean gu ere gatazkaren biktimak garela, ez dugu inola ere hori onartzen, guri gertatutakoa oraindik konpontzeko dagoen gatazkaren ondorio zuzena dela kontziente garelako.

Baita ere aipatzekoa da gure kabuz urtero egiten duguna Tornozulon senide eta lagunen artean: publizitaterik gabe biltzen gara leku horretan eta, aurresku baten ondoren, bainu bat hartzen dugu Oihaneren omenez eta gero askari bati ekiten diogu. Eta, nola ez, etxekook biharamunean Santa Barbaran lore batzuk uzten ditugu eta *Eusko Gudariak* abesten dugu bikotearen omenez.

“Historia honetan guztian –amaitzen du Antxonik– min gehien eragin didana da ezker abertzaleko ordezkari batek esan izana Oiha-

neren monolitoa kentzeko, bestela beraiek kenduko zutela eta. Eta, ez da Oihanegatik baina, gure hilak ezkutatzen hasi behar badugu, gu ondo bizi gaitezkeen arren, gure bilobak hilko dira berriro. Eta, nire esperientziaren arabera, arinagoa da norberak sufritzea norbere seme edo alaba sufritzen ikustea baino".

## 33. JOSE MIGEL BUSTINZA IURREBASO *IBAN*

1997ko irailaren 23an Bilboko Amistad kalean tirokatu eta hil zituen Guardia Zibilak Jose Migel Bustinza *Iban* eta Gaizka Gaztelumendi. Ibanen alaba Maianak honela dakartza ordukoak:

> Egun arraroak izan ziren, urduri zegoela nabari nion amari baina ez nekien zer gertatu zen. Garai hartan 12 urte nituen, oraindik haur bat, argi neukan zerbait gertatu zela baina amak ez zidan ezer esaten. Amak barren barrenean azaldu ez zitekeen ondoeza zeukan, pentsa zezakeen gauzarik txarrena gertatu zen susmoa zeukalako. Aurreko gauean Bilboko Amistad kalean Guardia Zibilak prestatutako enboskadan bi ETAkide erail zituzten. Amak susmoak zituen aita izan zitekeela, hainbat denbora baitzeraman Cabo Verdetik kanpo. Hasiera batean Gaizka Gaztelumendi ugaoztarra eta beste Basauriko gizon bat zirela esan zuten. Baina handik gutxira ezeztatu zuten, bigarrena Basauriko gizon hura ez zela. Amaren susmoak eta barren barrenean nabaritzen zuen ziztakada eta ondoeza areagotzen zihoazen. Tamalez, gau hartan albisteen bitartez jakin zuen amak aita zela hil zuten beste pertsona, albisteetako Julio Ibarraren bitartez hain zuzen ere. Inork ez gintuen abisatu, inork ez gintuen deitu gertatutakoaz jakinarazteko. Aita zela konfirmatu zutenez, niri nola esan ez zekien... Une horretan lo nengoen, eta negarrez amak esnatu ninduen eta ohartu nintzen zerbait gertatu zela. Aita hil zutela esan zidan. Aurreko egunean gertatu zen hilketa, baina aita zela ez zen esan une horretara arte; ezinegon amaigabea izan zen amarentzat. Mundua jausi zitzaigun gainera.

Hurrengo egunetik aurrera zurrunbiloan sartuta geunden. Goizean, ama lanera joan zen Baionako erietxera; ez zuen gertatutakoaz ezer esan: bere zortzi orduak sartu, ni eta nire ahizparen bila joan eta Basurtorantza abiatu ginen. Amak ez zuenez Basurto ezagutzen, termibus eta Basurto artean zegoen aparkalekuan geratu ginen osabetariko batekin. Nik 12 urte nituen baina nire ahizpak, Elorrik, 3 urte baino ez zituenez, beste izeba-osabekin geratu zen.

Basurtora heldu ginenean jende pila bat zegoen bertan. Sentsazio arraroa zen, alde batetik jendearen babesa eta berotasuna nabari nituen, bestetik ordea agobioa, galduta egotearen sentsazioa eta itota egongo banintz bezala. Bertan egon zen jendeak komentatu zigun gu iritsi baino minutu batzuk lehenagora arte Guardia Zibila bertan egon zela baina joan egin zirela.

Pixkanaka aurrera gindoazen, amari txarrena geratzen zitzaion… familiako inork ez zuen aitaren gorpua ikusi eta ezagutzeko kemenik izan, eta baten batek egin behar izan zuenez berak egin behar izan zuen. Ni kanpoan geratu nintzen osabarekin.

Amak kontatu berri dit nola izan zen momentu hori, orain arte kontatu ez zidana. Gela hotz batean zeuden Gaizka eta aitaren gorpuak, bakoitza irekita zegoen hilkutxa baten, aurpegia baino ez zitzaien ikusten funda baten sartuak baitzeuden. Nahiz eta erietxe baten lan egin leku hotza iruditu zitzaion, gogorra, horma zuriak, lore bat ere ez, senitartekoek gorpua ikusteko lekua ez da sekula erosoa izango baina ez zuen pentsatzen horrelakoa izango zenik. Lehenik Gaizka ikusi zuen, sarreratik gertuen zegoena bera baitzen, alboan beste gorpua zegoen,

aitarena. Urte guzti hauetan amak ez zidan ezer esan baina gaur da eguna non aitortzen didan badakiela aita zela froga guztiek eta analisi guztiek hala ziotelako, baina ikusi zuenean ez zuela ezagutu, ezinezkoa egin zitzaiola pentsatzea aita zela eta gaur egun berdina pentsatzen duela. Paparrean erredura bat zuen aspalditik eta bere gorputza estaltzen zuen tela edo funda irekitzea burutik pasa zitzaion, ezin zuelako sinetsi aita zenik, baina azkenean… ez zuen egin eta sentsazio horrekin geratu izan da beti. Bazekien eta badaki aita zela, baina barren barrenean ikusi zuen gorpua berak hainbeste maite izan zuen pertsonarena zela ezin sinetsirik zegoen. Ikusitako aurpegiak islatzen zuen aitak bizitakoa eta jasandakoa, guztiz transformatuta edo aldatuta zegoen.

Basurtotik irtetean Igorrera joan ginen amamaren etxera, bertan gaua pasa eta hurrengo egunean berriro joan ginen Basurtora aitaren gorpuaren bila. Basurtotik bi autotan irten ziren Gaizka eta aitaren gorpuak, bata bestearen atzetik. Bilboko irteerara heltzean gorpuak banatu ziren Gaizkarena Ugaorantza eta aitarena Igorrerantza bideratuz. Senitartekoez gain bertaratu zen jende guztia bi herrietara banatu eta bideratu ziren. Bide osoan zehar ez genuen sasi polizien kotxerik ikusi, baina une oro gainean zebilen beraien helikopteroa. Igorrera heldu ginenean, udaletxe pareko plazara joan ginen, Goiko Plazara. Bere egunean PNVek zeukan gehiengoa udaletxean eta ez zuten onartu bertako instalazioak erabiltzea gorpua sartzeko eta jendeak ikus zezan. Beraz plazan bertan egin behar izan zen. Aitaren gorpua plaza erdian jarri zuten, gaineko tapa kenduz eta bere aurpegia agerian utziz. Herria jendez gainezka zegoen. Oso arraroa egin zitzaidan, gogoratzen bainuen hurbileko bat hiltzean tanatorioan edo etxean edukitzen zela gorpua eta gertuko jendea joaten zela ikusteko, baina plaza erdian eta Euskal

Herriko txoko ezberdinetako jendearen aurrean… hori egiteak harritu ninduen. Urteekin gauzak beste era batera ikusten dira, baina 12 urterekin ez da dena hain ongi ulertzen.

Omenaldia egin ondoren elizara joatea tokatzen zitzaigun… aurretik aitak hori jakin izan balu, kokoteko ederra emango zigun denoi. Adineko jendeak beste era batera ikusten ditu gauzak, tamalez dena egina eta antolatuta zeukaten etorri ginenerako, horrelaxe nahi izan zuen familiak. Erabakiak hartzerako momentuan ama eta ni ez gintuzten kontuan hartu. Une horretan aita eta ama banatuta zeuden baina, aita hobeto ezagutzen zuen pertsona ama zen eta berak inork baino hobeto zekien zeintzuk ziren aitaren nahiak. Gorbeia eta Iratin bere errautsak zabaltzea zen berak nahi zuena. Gorbeian, Arratiarra izanda, beretzat bere sustraiak inguru horretan baitzituen, eta Iratin beretzat leku oso sinbolikoa eta maitatua zelako. Alde batetik, Irati Euskal Herriko iparra zein hegoan baitago, eta bestetik, bertako txabola baten egin nindutelako, beretzat sentimentalki garrantzia handiko lekua baitzen. Hilerrian lurperatua izan zenez eta berak Gorbeian besteak beste amaitu nahi zuenez, lagun batzuekin erabaki genuen mendian zuhaitz bat landatzea eta urtero han elkartzea eta halaxe egiten dugu.

Eliza kontuetara bueltatuz, elizara iristean tentsio unea sortu zen, apaizak anagrama eta ikurrina hilkutxatik kentzea agindu zuelako. Argi geneukan horrela ezin zela izan, aita ez baitzen hala edo nola hil, bere herriagatik, sinesten zuenagatik eta gu denongatik borrokatu zuen azken momentura arte. Beraz pentsaezina zen apaizak eskatzen zuena betetzea. Ez dut gogoratzen nola hartu zen erabakia baina primeran gogoratzen dudana da azkenean hilkutxa ezer gabe sartu zutela, biluzik

egongo balitz bezala eta ama kanpoan geratu zela. Amarentzat erabaki onartezina zen, aitaren kontra zihoan zerbait zela iruditzen baitzitzaion. Jende askok agian ez zuen ulertu edo gehiegizkoa irudituko zitzaien amaren jarrera edo erabakia, baina beretzat garrantzitsuena aitak nahiko zuena zen eta ez jendeak zer nahi zuen. Horrelako egoeretan hildako pertsonak nahiko zuena errespetatu eta egin behar da. Elizkizuna amaitu ondoren jendeak berriro anagrama eta ikurrina jarri zuten hasiera batetik egon behar zen bezala, eta hilerrian lurperatu zuten. Oso azkar egin zen dena gaua gainean baikenuen.

Ume bat nintzen eta gertatutakoaz ez nintzen kontziente. Ez dut inoiz bizitza "normala" izan aitarekin, udan baino ez bainuen ikusten: hasieran Argelian zegoelako eta ondoren Cabo Verden deportaturik. Horregatik bere hutsunea ez nuen nabari hasieran, baina denbora eta urteak aurrera joan ahala bere falta eta bera ez edukitzearen mina areagotzen joan zen. Uda iristeko esperoan nengoen aitarekin egoteko itxaropenarekin… uda iristen zen baina aita ez. Maiz jendeak esaten du denborak dena osatzen duela, baina niri gertatutakoa ikusita kontrakoa izan dela uste dut. Esan dezaket, gaur inoiz baino gehiago nabari dudala bere hutsunea. Beti maite izan dut aita, eta gaur inoiz baino gehiago, eta beti egongo da nirekin. Amistad kaleko enboskadan hil zuten baina bereganako ditudan sentimenduak ezingo dizkidate sekula kendu. Ez dut aita ahaztu nahi (tamalez txikitako oroitzapen ugari ez ditut gogoratzen, blokeo antzeko bat dudala uste dudalako, espero dut denborarekin oroitzapen horiek berreskuratzea, testigantza hau egiteko amaren laguntza ezinbestekoa izan zait), ez dut nahi jendeak aita ahaztu dezan, aitaz hitz egiteko beharra dut,

jendeak bera pertsona moduan zelakoa zen eta bere gertakizunak, anekdotak aipatzeak on egiten dit, bera hurbilago sentiarazten laguntzen didalako. Amarekin eta lagun batzuekin aitaz hitz egiten dut baina hainbat senitartekorekin gaia aipatzen ez naiz ausartzen, beraiek ere gainditu gabe dutela eta min egiten diela bai baitakit.

Orain esango dudanarekin ez dut inor mintzerik nahi, ezta gaizki hartzerik ere, baina nire ustez historian zehar eta gaur egun ere, presoez, iheslariez eta deportatuez (nahiz eta askotan ahazten diren) hitz egiten da baina ez da ahaztu behar pertsona horien atzean senitartekoak, familia eta ondorio guztiak jasaten dituzten haurrak daudela, askotan itzalean geratzen direnak. Haur horiek ez ditzagun ahaztu, beraiek ez dute ezer aukeratu, tokatu zaiena bizitzea baino ez dute eduki, eta maiz egoeragatik azkarregi handitzera behartuta egoten dira.

Gaur egun Amistad kalean gertatutakoaren inguruan galdera, zalantza eta ulertezinak zaizkidan gauza asko ditut buruan. Maiz esaten den bezala, kapitulua itxi ahal izateko edo bizitzan beste era batera aurrera egin ahal izateko EGIA ezinbestekoa da, gauza asko argitzea beharrezkoa zait, eta ez naiz behar hori daukan pertsona bakarra, amak eta aita ezagutu zuten hainbat jendek ere behar hori sentitzen dute. EGIA hitz potoloa eta handia da baina beharrezkoa. Etsaiak ez digu esango benetan zer gertatu zen gau hartan, ez digu esango enboskada hori ongi pentsatuta eta prestatuta zeukatenik, aita eta Gaizkarekin egin zutena ez zen kasualitatea izan. Ez zuten beraiek atxilotzeko asmorik eta horren inguruan ez daukat inongo zalantzarik. Urte asko pasa dira eta norberak ez daki zer eta nola egin, baina zerbait egin behar dela argi daukat. Gertatutakoa ez zai-

gu ahaztu behar baina saldu nahi diguten bertsio “ofizial” delakoarekin ezin gara konformatu, gezurra delako, benetan zer gertatu zen argitu behar dugu. Uste dut bere egunean (gertatu zenean) egin beharreko zerbait zela, argitu behar zela baina ez zen egin, edo behintzat esan dezaket ez zela muturreraino eraman. Nik horrela bizi dut eta horrela sentitzen dut, gainera pentsatzen dut kasu guztiekin hori egin behar genukeela, hemen falta zaizkigun guztiei zor diegun zerbait delako, merezi dutelako eta guk egin dezakegun gutxienekoa delako. EGIA ezinbestekoa zaigulako eta EGIA zor diegulako, benetan gertatutakoa argitu arte ez dugu etsiko.

# 34. AGUSTIN ARREGI *TXURIA*

Haren arrebaren oroitzapenak honela bildu ditu ilobak:

> Agustin Arregi Perurena, Oyeneder izenez baina Txuria-enea ezizenez ezagunagoa den Osinaga auzoko baserrian jaio zen 1952 urtean. Sei anai-arreben artean laugarrena, gaztetatik konprometitu zen politika munduan.
>
> 1980ko maiatzean sarekada bat egin zuten Hernanin, eta Txema Aranburu *Txemari* atxilotu zuten. Orduan, Agustinek eta beste zenbait gaztek ihes egin zuten Iparraldera; bere lantegiko postua utzita, etxekoak agurtzerik gabe joan zen; hurrengo urteetan tarteka senideekin biltzeko aukera izan zuen hala ere.
>
> 1984ko ekainaren hamabosta zoritxarreko data gertatu zen arregitarrentzat. Goizeko hamaikak aldera, arreba Milagrosek irratiaren bidez jakin zuen bere anaiak enfrentamendu bat izan zuela Guardia Zibilarekin Hernaniko etxe batean. Ironikoki, goiz hartan Agustinen ama Manuela esne partitzen Hernaniko kaleetan ibilia zen, istiluak egonak zirela ere jakin zuen, baina baserrira iritsi arte ez zuen jakin izan bere seme Agustin izan zela istilu haien zorigaiztoko protagonista bat. Milagros alabak eman zion horren berri.
>
> Ordutik aurrera arregitarrek momentu kaotikoak bizi izan zituzten: lehenik, udaletxera joan eta han esan zieten gorpuak kanposantuan zeudela. Hara joan eta, bertako enterradoreak Donostiako Polloera eraman zituztela abisatu zien. Polloera joanda, bertako enterratzaileak ezin zirela ikusi esan zien,

baina Milagrosen insistentziari esker azkenean ikusi ahal izan zuten. Agustinen gorpua ia guztiz erraustua zegoen eta hura errekonozitzerik ez zuten izan. Gogoratu behar da Agustinek eta Juan Luis Lekuona *Kattu* komandokideak Guardia Zibilarekin izan zuten tiroteoa eta gero, txapelokerrek esku-granada batzuk botata amaitu zutela enfrentamendua. Bi gazteak zeuden etxeak su hartu zuen eta bertan kiskalita hil ziren.

Hurrengo egunean, larunbatean, gorpua Hernaniko udaletxean egon zen eta milaka herritar pasa zen bertatik. Senideek oraindik oroitzen dute herritarrek eta tabernariek zein ondo tratatu zituzten; adibidez Riojanos tabernakoek kafea eta behar izan zuten jateko guztia nola ekarri zieten…

Igandean ospatu zen hileta. Udaletxetik elizarako metro eskasetan, dena guardia zibilez hartua egon zen. Aipatzekoa da guardia zibilek Agustinen ama Manuelari kantuz burla egin ziotela behin eta berriz.

Elizakoak amaitu eta enterratzeko orduan istilu latzak izan ziren; jendeak ahal zuen bezala ospa egin behar izan zuen ezagutzen zituzten bidezidorretatik.

Gau hartan bertan, Guardia Zibila agertu zen Txuria-enea baserrira Agustinen anaia Kornelioren bila, baina ez zuten etxean topatu. Oso haserre zeuden berdezkoak eta etxea miatu zuten goitik behera. Ez zuten testigurik nahi, baina nola hala lortu zuten Xele eta Inaxio bizilagunak egotea miaketak iraun bitartean.

Handik aurrera ere egun gogorrak bizi izan zituzten arregitarrek, Korneliok erbestera alde egin behar izan zuelako. Senideentzat, egun beltz haietan kontsolamendu bakarra izan

zuten: Agustinek, hainbat urte erbestean pasa eta gero, herrira etorri behar izan zuela hiltzera. Manuela amaren hitzak izan ziren azken hauek.

## 35. BIXENTE PERURENA *PERU*

Roazhongo gotorlekutik idatzi du Peruren alaba Argik bere lekukotza erdiragarria; 1984ko otsaileko gertakari haiek bizi dituen haur horri begira, hiru ahizpa umezurtzi eta ama alargundu berriari begira idatzi du bere ziegan, malko artetik oinazeari aurre eginez.

> Nondik hasi? Aitaren hiletaz eta omenaldiaz oroitzen dudana aipatzea eskatzen didazu aurreneko gutunean… Ondorengo gutun batean, pistaren bat emanaz edo, azaltzen didazu jaso dituzula hildako hainbat kideren senideen lerroak zeinetan heriotzaren berri jakin eta omenaldira arteko pasarteak kontatzen dituzten… Hileta, omenaldi eta dolua hartu dituzu liburuan ardatz… Gutun trukaketa honetan ere igorri didazu Maianaren (Ibanen alabaren) gogoeta bat, horrekin identifikatzen ahalko nintzelakoan… Eta bai, horrela da, liburuan azaldutako gogoeta hori mimo handiz zaintzen dudan koadernoan jasoak dauzkat Maianaren hitzak, osoki ulertzen baitut: "orain esango dudanarekin ez dut inor mindu nahi eta are gutxiago inork gaizki ulertzea, baina, uste dut, askotan, presoei, iheslariei, eta deportatuei buruz hitz egiten dugunean familiak eta bereziki pertsona horien seme-alabak kontuan izan beharko genituzkeela, egoera horien ondorioak zuzenean pairatzen baitituzte. Umeek ez dute aukeratu egoera horiek jasatea, hala suertatzen zaie eta egoera horren ondorioz azkarrago hazi behar izan dute". Hitz hauek azpimarratu nahi ditut Jokin, bereziki adierazteko aita hil zigutelarik umea nintzela eta ume moduan ditudala garai hartakoak nire oroimenean jasoak. Adibidez, berriki jaso ditudan dokumentu batzuk irakurriz

ohartu naiz Beltzeniako frontoian aita eta Steini egin zitzaien omenaldia astebetera edo izan zenaz. Alta, nik gogoan dudana da egun haiek oso, oso luzeak izan zirela eta oroimenean dudana da bi aste edo pasa zirela, artean egon zelarik gorpuak autopsiarako eraman eta guk ikusi ahal izateko denbora luzea; jarraian itxaronaldi luzea izan zen Bordelerainoko bidaia gorpuak errausteko; denbora bitarte horretan ere prentsa eta *ETB* sortu berriko kazetariak izan genituen etxe barnean eta kanpoaldean, baita errefuxiatu lagun ezagunak eta ezezaguna zitzaidan jendea; ikastolako lagun eta irakasleen omenalditxoa gure etxe aurrean; Beltzeniako omenaldirako bertsoak-eta prestatzea, manifak edo protestei buruz eskuin eta ezker entzundakoak… hori guztia ezinezkoa zait astebetean kokatzea niretzat mugagabea izan baitzen. Eternitatea izan zen bezala, aita eta bere laguna hil zituzteneko albistea jaso eta gure ama ikusi eta besarkatu ahal izateraino pasa zen denbora.

Nondik hasi… Ikastolan neguko oporrak genituenez amonaren etxean geunden Aingeru eta biak, Esther aldiz lagun baten etxera joana zen. Bizpahiru urte lehentxeago kokatu zen gure familiatxoa Hendaian, gurasoek ihes egin ondoren. Izugarrizko poza izan zen behingoz familia osoa elkartzea lortu genuenean eta gogoko nituen Hendaiako bazterrak eta baita ordu hartan genuen *casa de la pradera* hura. Etxea konpontzen lagundu ziguten errefuxiatu lagunek jarri zioten honela izena egurrezko etxe prefabrikatu hari. Sabai bitxi bat zeukan, paletetako egur zatiak birziklatuz jolasteko txoko bat moldatu ziguten lagunek, umeok gustuko genuena… Pentsatzen dut garai hartan ez zela ohizkoa errefuxiatuak haien seme-alabekin bizitzea, familian… eta horrela bataiatu zuten gurea, garai hartan hain bizigarri zen ironia eta umore puntu horrekin.

Goxotasunean sentitu arren ahizpok faltan hartzen genituen bai mendialdea eta baita ere Astigarragako gure lagunak noski. Usu joaten ginen amonarengana, ia asteburuURO eta oporretan ere… Eskerrak oporrak ziren! Eskerrak ahizpak ez geundela etxean egun hartan. Askotan pentsatu dut honetan eta "eskerrak" ematen dizkiot ez dakit nori han ez geundelako, han egon izan bagina ez baitut zalantza izpirik berdin tiroka hasiko zirela GALekoak… eta auskalo nolako bilakaera izango zuen horrek…

Afaltzen geunden amonaren etxean telefonoak jo zuelarik. Amonak erantzun zuen eta garrasi batean hasi zen, bere buruari heltzen, makurtuta, "ez, ez, ez" etengabe oihukatuz, bere oihu eta malkoak agonian gelditzuz. Ordurako ulertua nuen aitari zeozer gertatu zitzaiola. Inork ez zuen aitaren izena aipatzen baina nik banekien, ulertua nuen nonbait, aurreko egunetan jada beldurra eta kezka sumatuak bainituen nire inguruan, gurasoen komentarioetan… izan ere umeok beti baikaude helduen elkarrizketak entzuteko prest, eta *casa de la pradera* hartan ez zegoen intimitaterako metro karratu askorik. Amonaren etxebizitza tabernaren gainean dago eta berehala igo ziren tabernako lagunak…, guztia zen oihu eta malko eta amona baretu nahia…, nik jakin nahi nuena zen nola zegoen gure ama, entzuten bainuen zeozer gure aita eta beste norbaitengatik, baina ama ez zuenez inork aipatzen, ez nekien bera zauriturik zegoenez edo zer gertatzen zen. Ez nintzen galdetzera ausartzen.

Tabernara jaitsi nintzen, amonaren sukaldeko giro horretatik urruntzeko beharrarekin edo, jende gehiagorekin egon nahian edo, beste umeekin… Ostatua itxi zuten eta hurbilenekoak

soilik sartzen ziren, babes ematera, informazio eske… Makina-elektronikoa pizturik utzi ziguten umeok horretan entretenitzeko, eta horretan pasa nituen minutuak edo orduak, ez dakit… baina ez nengoen arras jokoan baizik eta ostatuan esaten eta gertatzen zenari adi-adi, horrela, norbait iristen zelarik nire informazioa osatuz joaten nintzen, esaten zirenak nolabait josiz… Ostatuko txoko batean telebista zegoen eta albistegietan hasi ziren irudiak-eta ematen, buruan oso grabaturik ditudanak. Ulertu nuen ama "ongi" zegoela baina oraindik ez nekien noiz izango genuen bera ikusterik. Horrek kezkatzen ninduen, izan ere urte gutxi aurretik, gurasoek ihes egin zutelarik, amonarekin gelditu baikinen hasierako hilabete luzeetan, eta orain ez nekien berriz ere amak norabaitera ihes egin beharko zuenik, elkartuko ginenik… ez nuen egoeraren tamaina neurtzen, uste dut ez nintzela aitaren heriotzaz kontziente, etorriko zenaren beldurra nuela uste dut, eta ama besarkatzeko beharra nuen berari animoak emateko ere. Ostatura jendea sartu eta atera zebilela, tarteka amonarenera igotzen nintzelako, osaba izebak iritsi zirelako ere, zeozer gehiago jakiten hasi nintzen eta ahal bezain lasterren amarengana joanen ginela erran zidan izebak, seguruenik biharamunean joango ginela Hendaiara.

Ostatura jendea etorri ahala, hitzak josiz, ulertu nuen errepidea moztuta zegoela eta batzuk ostatura hurbiltzeko zailtasunak izan zituztela, polizia bazebilela… Harrapatzen nituen hitzak ziren horiek, baina dezente aurrerago jakingo nuen protesta handiak egon zirela Hernanin eta Orereten, baita Hendaian ere…

Jende iriste horretan, eta belarriak ere adi-adi nituela, *Eginen* lanean ari zen gurasoen lagun batek aitaren argazki bat behar zuela aipatu zuen. Amonari eskatzea aipatzen zuten, unerik

aproposena ez zela aipatzen zuten ere… eta nik erran nuen banekiela non zeuden argazkiak: gurasoen etxean. Gurasoek ihes egin zutenetik amona joan ohi zen tarteka etxeko leihoak-eta zabaltzera eta gogoko izaten nuen bera laguntzea, eta batzuetan amonak baratzea landu bitartean momentuak pasatzen nituen han… Noizbait sofan eseri eta familiako argazki albumekin ibilia nintzen. Etxera joan ginen eta argazkia nik aukeratzeko esan zidan lagunak. Albumeko argazki gehienak umeoi ateratakoak ziren eta aukeratu nuen aita eta ama elkarrekin agertzen ziren argazki bat, ezkontza bazkari batean ateratakoa, umeokin altzotan, bigarren argazki batean aita ageri da ostatu aurreko petrilean eserita, bi alabekin. Tira, argazkiaren pasarte hau ez da garrantzitsua, baina nik gogoan dudana da ordu hartan etxe hark bere esanahia galdu zuela, beste begirada batez begiratzen niola, eta akaso une horretan jabetu nintzen gauzak ez zirela lehen bezala gehiago izango, amaitu zen etxeko salan bostok partxisean jolasten genuen garaia, etxea ez zen berriro berdina inoiz izango. Ez ginen bostak bueltatuko. Kitto.

Horiek dira lehen gau hartaz gogoan ditudanak.

Biharamunean abuelitokin joan ginen Hendaiara. Jende gehiago zegoen etxean, osabak-eta ere bai, baina ama ez zen oraindik iritsia. Uste dut hasiera hartan erotu zutela diligentziekin aurrera eta atzera, komisaldegira, kontsulatura, funerarium-era… azkenean iritsi zen gure ama eta besarkada amaigabea eman nion (eta lerro hauek idazterakoan behin eta berriz heldu zaizkit malkoak begietara Jokin). Jarraian, guztiak harritzeko moduko galdera egin nion: “Como vamos a vivir ahora?”. Uste dut angustia hori banuela barnean, zer gertatuko zaigu aitarik gabe,

nola biziko gira, eta dirua? Amak erantzun zidan moldatuko ginela, elkarrekin egongo ginela eta berak lan egingo zuela.

Esther, ahizpa gazteena, aurrerago iritsi zen etxera baina ez dut gogoan nola izan zen hura. Beharbada harrigarria egingo zaizu, baina afera da etxean ez dugula sekula honetaz hitz egin, eta seguruenik badugula mintzatzeko beharra… nik uste dut bakoitzak bereari aurre egin diogula, ahal bezala, aipamen gutxi eginez, mina ekiditearren edo.

Ez dut ongi oroitzen nola pasa ziren hasierako egunak, kronologikoki nahasiak dauzkat baina gogoan atxikitzen dudana da izugarri luzea izan zela, edo behinik behin gauza asko gertatu zirela.

Noizbait funeraiumera joan ginen eta han ere iruditzen zait luzea izan zela itxaronaldia. Funerarium izena lehenengoz entzun nuen, baita autopsia hitza ere. Jendea, lagunak, hor zebiltzan aurrera eta atzera, eta ni berriz ere entzuten nituen hitzak nolabait josten ari… horrela jakin nuen 10 bala jaso zituela aitak eta Steinek ez dut oroitzen zenbat, baina ulertu nuenagatik berehala hil zuten bera… aitak eduki omen zuen lauzpabost metroz ihes egiteko denbora… etxetik ateratzerakoan hil zituzten, pareko etxeko lorategian zeuden GALeko tirokatzaileak haien zain. Hitzak josiz ere irudikatu nuen gure ama etxetik atera zela balen hotsak eta oihuak entzundakoan, eta aitak oraindik arnas hartzen zuela. Karrikan gora korrika alde egin zuten tirokatzaileek eta amak ezagutu nahi izan omen zituen, identifikatzeko edo. Orduan amarenganantz tirorik jaurti zuten eta horiek omen dira gure autoaren berinean agertzen direnak, prentsako argazkietan. Ulertu nuen ere anbulantzia oso-oso

berant iritsi zela. Buruan zurrunbiloan nuen galdera zen ea bizirik atera ahalko zirenez bestela izan balitz. Buruan neukan galdera zen ere aitak, hil aurretik, ama ezagutzerik izango ote zuen, berarentzako hitzik izan zuenez… eta horrela irudikatu du nire ume burutxoak gurasoen arteko agurra, baina egia erran, ez naiz sekula galdetzera ausartu. Ez gira gaiaz mintzatu etxean. Akaso neronek sortutako irudia da, azken unera arte elkarrekin egon zirela irudikatzeko.

Baionako funerariumean, sarrerako salatxoan gelditu ginen hiru ahizpak, osaba edo izebaren batekin… ikastolatik ere hurreratu zen umerik. Luze eta hotz egin zitzaidan. Eta oroitzapen txarrena dut une hartakoa. Halako batean izebak edo erran zigun aitaren gorpua ikustera sar gintezkeela. Erran zigun hori izango zela aita ikusteko azken aldia eta nahi bagenuen hurreratu eta musu ematen ahalko geniola (malkoak isurtzen zaizkit lerrookin Jokin). Baina aipatu zigun ere ongi pentsatu behar genuela ikusi nahi genuenez eta musukatu nahi genuenez, izan ere aitaren oroitzapena aldatzen ahalko baitzigun horrek, ezberdin ikusiko genuelako, hotz zegoelako. Nik ez nekien zer erabaki eta gero beti damutu naiz hurreratu ez izanaz. Aita eta Stein zeuden gelatxora hurbildu nintzen baina ez nintzen sartu, atetik begira gelditu nintzen. Eskuin aldean zegoen Steinen gorpua, izara zurian estalirik, inguruan bere ama eta familia, eta ezkerrean zegoen gure aita, izaren pean, burua soilik agerian, eta nik atxiki dudan irudia, usu flash moduan etortzen zaidana, honakoa da: lepoko eta belarri atzealdeko ilunguneak, bala-zulo madarikatuenak. Aingeruk oihu eta negar egiten zuen, aitari deituz… Estherek eta Aingeruk eman zioten musu, nik ez, ez dakit zergatik. Beharbada jen-

dearen aurrean negar egitearen beldur nintzelako? Ez dakit. Akaso, nahiago nuen irudi itsusiak baino nire barnean aitaren irudi ederrak atxikitzea? Bien artean gelditu nintzen, agurtzeko ausardiarik edo gogorik gabe eta irudi itsusiarekin.

Egun askotan jende ugarik inguratu gintuen eta ez dut amaren oroitzapen handirik, baina lehen erran bezala, uste dut oso hartuta egon zela, komisaldegira ere joan behar izan zuen, eta epaitegira-edo, kon-tsulatura uste dut ere, herriko etxera, jendearekin egon… eta noski, seguruenik beste bi ahizpekin ardura handia zuela. Lan handia!

Zuk aipatzen duzun Beltzeniako omenaldiaren aurretik egon ziren beste bi niretzat oso bereziak. Egun batez, nik ez nekiela, ikastolako irakasle eta ikasleak inguratu ziren etxera. Batzuk bertsoak idatzi zituzten, beste batzuk loreak ekarri zituzten, besteek marrazkiak… kristoren detailea izan zen hura. Nik ez nuen espero gure etxeraino hainbeste lagun hurbilduko zenik. Ezustekoa izan zenez, aldez aurretik deus prestatu behar izan ez genuenez, uste dut momentua bizi izan nuela, gardenki eta gertutasunean. Jarraian, marrazki eta bertso denak jaso eta aurrerago album berezi batean ipini genituen. Baita irakasle batek hartutako argazkiak ere.

Errefuxiatu lagun baten ideia izan zen albumarena, berak zioen garrantzitsua zela hori guztia biltzea eta gerora horrela izan zen, bai. Album horretan daude ere, sailkaturik, prentsako artikuluak, eta guk osatutako idatzi eta bertsoak. Gerora gogoko izan nuen albuma begiratzea. Ezkutuan egiten nuen, etxeko besteen aurrean malkorik ez isurtzearren edo, baina bai, batzuetan, etxean bakarrik nengoelarik, albuma hartu eta pasatzen nuen denbora

orriak atzera eta aurrera, akaso dilindan gelditutako galderen erantzunak bilatu nahian… Album hori gero faltan hartu izan dut, eta hutsuneaz gain mina ere eragin zigun poliziak urte gutxi berantago gure etxera sartu eta eraman zutelarik ez dakit zeren froga gisa! Han ez zegoen deus eramateko, min emateko gogoa baizik, eta min egin ziguten. Gure ama saiatu zen, abokatarekin, etxetik eraman zituzten gauza guztien artean albuma behintzat berreskuratzen, baina urte dezente berantago itzuli zen albuma etxera.

Lehen aipatu dut Beltzeniakoaren aurretik egon zela beste omenaldirik edo. Nik goxotasunean oroitzen dudana, nahiz nahasmena dudan ere, Bordelerako bidaia da, "crematoriume-ra" (hau ere, nire hiztegi iluneko hitz berria). Uste dut oroitzen dudala bereziki etxekoak gindoazela bertan, funerariumeko furgoiaren atzean, gure autoetan. Otsaila izateko hotz egin be-har zuen seguruenik baina nik berotasunaren oroitzapena dut. Furgoien gidariak bidean gelditu ziren eta guk hamaiketakoa edo bazkaria edo ez dakit zer egin genuen, baina gogoan dut etxeko denak, osaba-izebak-eta, Steinen familia eta adiskide hurbilenekoak hor geundela, fianbreretatik patata tortillak ate-rata, edariekin… akaso besteentzat une zaila izango zen egun hartakoa, ni gustura eta babesean sentitu nintzen, beharbada sentitzen nuelako hainbeste egun gorabeheratsuen ondotikoa hurbiltzen ari zela, edo besterik gabe, etxekoak geundelako soilik. "Crematorium" hori aldiz toki hotza zen, bakartua, eta gertuko norbaitek azaldu zidan nahi banuen sartzerik neukala baina toki berezia zela… ni hurbildu nintzen baina fite atera nintzen kanpora, hor ere ez dakit zergatik ez nuen agurtze-ko ausardiarik izan, baina osaba ere gelditu zen kanpoan eta Steinen lagun mina, eta haien moduan ni ere. Joateko bidaia

alaitasunean oroitzen dudan bezala, itzultzeko bidaiak isiltasuna eta hotzaren isla utzi dit gogoan. Uste dut ez nuela ongi ulertzen zergatik gorpuak erraustu behar ziren.

Gudariak zirelako errausten zirela erran zidan norbaitek… Eta errefuxiatu lagun batek azaldu zidan, gure etxeko sukaldean ukan genuen elkarrizketa luze eta lasai batean, nolakoak izango ziren hurrengo egunak. Lagun hori kezkatua utzi nuela uste dut, ez bainuen ongi ulertzen errausteareana… hilerrian errautsak sartu eta beste errauts gutxi batzuk etxean atxikitzearena, amak espresuki erosi zuen ontzi eder batean, noizbait, aurrerago, gure agurra emateko edo. Uste dut horrela izan zela amak ez zuelako muga pasatzerik, eta ondorioz ez zuelako errautsak lurreratze horretan parte hartzerik izango, eta seguruenik errautsak Oreretako hilerrian sartzeko erabakia hartua izan zen, gure amonak eta sendiak behar hori zuelako…

Beltzeniako omenaldirako eguna hurbilduz zihoan eta gogoan dudana da errefuxiatu lagun batekin egon ginela bertsoak idazten. Hortik aurrera hainbat omenalditan abestu izan ditugu Estherek eta biok, eta guztiak daude albumean bilduak. Gogoan dudana da agurtze moduan hartu nuela hori, gainera aitak bultzatu gintuen bertsolaritza eskolara eta horregatik ere bertsoekin agurtzea sentikorra zitzaidan. Aldi berean urduritasuna nuen zeren eta jendearen aurrean abestu beharko nituen…, nahasketa bitxi horretan gertakari itxaropentsu bat eman zen: Estherek eta biok bertsoak osatzen genituen bitartean, Aingeruk papertxo batean bere lerroak idatzi zituen ere. Lehen aldia zen Aingeruk zerbait "idazten" zuela! Haurtxoek egin ohi duten erara idatzi zuen eta guztia zen ulertezina. Amak ongi gorde zuen papera, adituei erakusteko, gure

itxaropena baitzen Aingeruk letrak identifikatzen ikastea eta ondorioz idatziz komunikatu ahal izatea.

Nola ulertu ote zuen egoera Aingeruk, bere elbarritasunean? Askotan pausatu diot galdera nire buruari, eta ez dut erantzunik, baina sumatzen dut berak ere aldi hori tristuran eta beldurrean bizi izan zuela. Hortik aurrera ere berarentzat bizia ez da erraza izan, eta aldika krisiak ukan ditu… Aita hil aurretik aitona galdu genuen, gaixotasunak eramanda. Aitonaren heriotza azaltzeko Aingeruk zerua seinalatu ohi zuen, aldiz, aitaren heriotza azaltzeko lo egitearen keinua egiten zuen. Aldi berean, oso gogoan dut Aingeru poliziarekin beldurtzen zela eta noizbait, kalean ibilita, poliziarik ikusi ezkero seinalatu egiten zuela, urratsak gelditu eta beldurra igartzen zitzaion ibileran, eta horrela, usu, espaloiez aldatu izan dugu kalean oinez edo paseoan ibiltzerakoan. Izua, azken finean, etxeko denoi gelditu zitzaigula uste dut.

Beltzeniako frontoian aita eta Steini egindako omenaldi jendetsua da garai hartako beste une intentsua. Nik banekien omenaldi hura garrantzitsua zela nolabait azken agurra baitzen guretzat, aurreko egunetako agurren ondotik azkena, eta hortik aurrera beste zerbait zetorrela. Ulertua nuen jendearentzat, aitaren eta Steinen lagunentzat, garrantzitsua zela une hori ere, eta egia Beltzenia bete-bete zegoela. Berotasun ikaragarria zegoen txaloetan, amorrua ere bai aldarrikapen oihuetan… nik gogoan dut hori guztia baina aldi berean niretzat berezia zen "azkena" hurbilduz zihoalako eta beste zerbait tokatzen zitzaigulako, une bitxia zen ere jende asko-asko zegoelako eta guztiak guri begira zeudenaren sentsazioa nuelako. Indartsua da gure ama eta Steinen amaz dudan irudia, kemena eta mai-

tasunarena, haien kuttunen errauts-ontziak adiskide guztioi ongi agerian erakusterakoan… Aldiz, niretzat une bitxia zen, momentu indartsuak dira omenaldiak, baina halakoetan jendearen erdigune bilakatzen zara, badakizu garrantzitsua dela hori, jendearentzat beharrezkoa dela ere, baina zuk ez duzu erdigune horretan egotea "nahi". Beltzeniakoan gogoan dut gure aitaren lankide batek hitza hartu zuela eta beroa izan zela lankideen gertutasuna, gogoan dut ere Eltzegor taldeak abestu zuela, eta gertukoak nituen haiek ere, eta oroitzapen goxoa utzi didate. Une batez Silvio Rodriguez-en *Madre* abestia ipini zuten Steinek gogokoa zuelako, eta geroztik abesti horrek omenaldia dakarkit gogora. Peixotok bertan parte hartu zuen eta gizon jantzia zela ulertua nuen, baina nik nire umetasunean ez nion askorik ulertu eta beste hainbat lekukotasun segur aski ez nituen ulertuko. Txalapartaren indarra, aldarrikapenak, jendea sutan… ezerosoa zen, aldiz, flash eta kameren aurrean aurkitzea.

Azken agurra bazetorren guretzat, errautsek muga pasa eta Olazagutia eta Astigarragarako bidea hartuko baitzuten. Badakit Hendaiako Herriko Etxean ipini zituztela baina ez daukat gogoan ni bertara hurbildu izana. Egun haietan adi-adi egoteari ez nion utzi, noski, eta berriz ere hitzak lotuz ulertu nuen ezkutuan egitekoak zirela egin beharrekoak (hots, errautsek, oroit-txarteltxoen moduan, ez zuten errepide zuzena hartu).

Ez nekien nola igarotzekoak ziren Orereetako omenaldia-eta. Ez nintzen egon. Gure amak ez zuen joaterik eta uste dut berarekin gelditzea nahiago nuela. Beharbada ez zigun joateko aukera eman pentsatzen baitzuen poliziak kontra eginen zuela eta umeontzako lanjerosa zitekeela. Eta horrela izan zen, bai-

na hori ez dut azalean bizi izan, prentsaren bitartez baizik, eta aurrerago, noizbait osabak kontatuta. Orereetan egin zitzaien lehen omenaldi bat eta hor istiluak egon ziren. Jarraian hilerrian pausatu zituen gure amonak aitaren errautsak.

Orereetakoa zafratze bat izan zen, familiaren mina eta gertukoen minari trufa egitea… horren miserable izatera iritsi behar da! Hala ere, niretzat zafratzea izan zena da aitaren albumaren lapurreta, frantses poliziak etxetik eraman eta epaileak epe luzean gureganatzeko aukerarik eman ez zigularik. Albumean ez zegoen inor inkulpatzeko frogarik, soilik gure maitasuna, guk sortutako bertsoak eta osatutako idatziak, bizi izandakoa, jasotako sostengua eta elkartasunaren froga zen hura, besterik ez. Dezente aurrerago, orain dela hamar bat urte, kide batek jakinarazi zidan aitaren omenez Astigarragan jarritako plaka Intxaurrondoko kuartelean ikusia izan zela. Halaxe…

Zure liburuaren muina dolua da… Nik ez dakit dolua ongi egiterik dagoenez Jokin, ez dakit noizbait bukaerara iristen denez doluaren ibilbide hori. Diotenez badu amaiera bat baina nik ez dut ibilbidea egin eta uste dut oinarrizko arrazoia dela horretarako baldintza egokiak ez direla eman. Zure azken gutunean diozu patioan beste kide batekin solasgai izan duzula omenaldien gaia, eta kide horrek pentsatzen duela hiletetan eta omenaldietan jendetza handiak izaten zirela, baina gero, eguneroko bizitzan, bakarrik geratzen direla familiak. Gure *casa de la pradera* hartan ia beti izan dugu jendea, eta uste dut jendeak ahal izan duen neurrian ez gaituela bakarrik utzi, baina errefuxiatuen kanporaketak-eta hasi ziren, errefuxiatu lagunak atxilotuak ziren, deportatuak, batzuk "desagertu" ziren bizitza klandestinora pasatuz… eta nire neurrian ulertzen nuen ez gintuztela ahanzten

baizik eta ezin zela lehen bezala ibili. Hiru urtetara gure ama atxilotzera etorri ziren, kanporatu zutela jakinarazi ziguten eta atzera-aurrera ibili ginen bere bila, baina azkenean Hendaian askatu zuten. Hilabete gutxira bigarren aldi batean etorri ziren amaren bila eta eraman zuten… Urtebeterako preso sartuta, gu, hiru ahizpak lagun batzuen etxean gelditu ginen… beti izan dugu elkartasuna inguruan.

Baina gertakariekin, errepresioarekin, beldurrarekin… horrelako baldintzetan uste dut ez dela dolua egiteko aukerarik ematen.

Beltzeniakoa amaituta gure etxea zertxobait "kalmatu" zen, iritsi zen ikastolara itzultzeko eguna… Hala ere hasiera batean errefuxiatu lagun batzuk gurekin bizitzen gelditu ziren, amari laguntza emateko edo, bakartasuna ez zezan gehiegi sentitu. Kristoren detailea izan zen haien aldetik, gainera bikote hori umoretsua zen oso eta apreziatzen nuen hori. Geroxeago haientzat ere iritsi zen haien etxera bueltatzeko unea, baina erran bezala, *casa de la praderak* beti izan ditu ateak lagunei irekiak, eta uste dut ere beti bazegoela lo egiteko tokia behar zuenik, eta noizbait ere familientzako elkargune izan zen gure etxea, garai batean guri beste lagun batzuek gurasoekin elkartu ahal izateko haien etxeak ireki zizkiguten bezalaxe. Ez ginen arras bakarturik gelditu.

Igaro ziren egunak eta zerbait aldatuz zihoan nire barnean, aitaren hutsunea hor zegoen, baina ama galtzearen beldurrak gailentzen zuen hutsunea. Seguruenik GALeko tirokatzaileak berriz itzultzeko arriskurik ez zen izango, baina ni ez nengoen arras lasai. Gogoan dut, adibidez, etxeko kontra-leihoak ixteko kanpora atera behar zela eta kanpotik egin behar zi-

tzaiela kontra-leihoei bultza. Ni ateratzen nintzelarik leihoak ixtera fite-fite egiten nuen etxeko itzulia… etxetik ateratzean bizilagunaren lorategiari so egiten nion, tirokatzailerik edo mugimendu bitxirik sumatuko ote nuen, eta ziztu bizian egiten nuen itzulia. Inori ez nion erraiten beldurra nuenik baina beldur haren hotza bizkarrezurreraino sartzen zen, eta lerro hauek idazten *flash* moduan dauzkat gogoan etxearen kanpoalde hura, bizilagunaren lorategia, tirokatzaileak ezkutatu ziren arbola… *Casa de la praderan* komuna kanpoan zegoen, etxe atarian baina kanpoan hala ere. Ama nolabait ohartu zen gauaz komunera joateari beldurra nionaz, errefuxiatu lagunei galdetu zien obrarik egin zitekeenez sukaldeko armairutik komunera zuzenean joan ahal izateko, kanpora atera behar izan gabe. Amak zioen horrela erosoago izango zela, hotzik ez genuela pasatuko komunera joatean… Uste dut “hotza” hitza baliatzen zela “beldurra” hitzaren ordez, eta hotza ekiditearren bainugelara joan gintezkeela proposatu zuen errefuxiatu lagunak. Eta nik hori hartu nuen aitzakiatzat, nahiz eta ederki jakin etxe hartako bainugela ez zegoela isolaturik eta komunean bezainbeste hotz egiten zuela… Astigarragara gutxiago joaten hasi nintzen ere, bereziki ama ez nuelako bakarrik gelditzerik nahi, eta hor ere estakuruak bilatzen nituen. GALekoak atxilotu izan balituzkete, epaiketarik ikusten hasi izan bagina, akaso ez nuen beldurrez bizi izango garai hura. Auskalo.

Errefuxiatu lagun batek behin negarrez topatu ninduen, ohe bazterrean, baina lehen erran dut etxe hartan ez zegoela intimitaterako txokorik eta… lagun hark azaldu zidan ez genuela triste egon beharrik, aita hil zutenek justuki gu triste eta negarrez ikusi nahi gintuztela… Halako giro nahasi batean, eraman

genuen bakoitzak gure mina, amak intimitatea behar zuelarik autora joaten zen, Esther bizikleten etxolara edo joaten ohi zen, ni espigoira paseatzera… auskalo.

Dolua egiteko-eta, omenaldiak eta agurrak garrantzitsuak direla diozu. Nik ez nuen "agurtzeko" ausardia hori izan, edo beharbada nire baitan aitaren beste irudi bat gorde nahi izan nuen. Aitak, aurreko egunetan sumatu zuen zeozer eta behin, logelan zegoela, minutu gutxi batzuetan biok bakarrik gelditu ginen. Ez dut gogoan zeren harira etorri zen elkarrizketa hura… ongi gogoan dudana da aitak erran zidala ni nintzela alaba nagusiena eta nik izan behar nuela ahizpentzat eredu, eta amari laguntza eman behar niola… eta musu eman zidan. Hori izan da nik atxiki dudan agurra (eta berriz begiak malkoturik dauzkat Jokin). Umetan ez nuen malkorik isuri, edo oso guti, erran bezala "eredu" izatearena eta ahizpak zaindu eta ama laguntzearena barneratu bainuen… baina jarraian, urteen poderioz, bizipenen ondorioz eta bereziki Oihane lagunaren heriotzaren ondotik, zart egin zuen zerbaitek nire barnean eta ikasi dut malkoei isurtzeko baimena eman behar zaiela isuri daitezen.

Zure gutunean diozu, Jokin: "kide hilari hileta egin ondoren amaitzen da lagunen dolua, baina ez familiarena. Eta, agian, etxeko bat hiltzen ikusi duen haurraren dolua, areago aita bada, zure kasuan bezala, agian horrelakoetan, bizi osoa irauten du haur horren doluak eta minak, ezin duelako ulertu heriotza hori". Bai, niretzat ulergaitza izan da eta oraindik ere, azken hilabeteotan, baldintzapeko askatasunerako desmartxak egiten aritu naizelarik, iraganeko prentsa paperei begira aritu naiz, izan ere nire asmoetako bat izan baita desmartxa haue-

takoren batean epailea eta kartzelako zuzendaria-eta galdezka hasterakoan gure familiaren iragana aipatzea, eta azpimarratzea ordu hartakoagatik hemen inork ez duela barkamenik eskatu, ez aitortzarik ezta epiketarik ere egin. Paper zaharren artean topatu dut gure aitak sumatzen zuela GALekoak gainean zituela. Adibidez, goiz hartan berean, 1984ko otsailaren 8an, lantokirako bidean autoan beste lagun batekin zihoalarik, auto bat gurutzatu zitzaien errepidean, alde egin eta auto hari jarraitu zioten muga pasa zuen arte. Goiz hartan berean Hendaiako komisaldegian salaketa ipini zuen, autoaren matrikula-eta emanez.

Lehentxeago, umeontzako ez ziren elkarrizketa horietako batean, ulertu nuen gurasoen autoari zerbait egin ziotela. Gero, gogoan dut nola ikastolara joaterakoan aitak autoa martxan jarri eta gu etxeko sukaldean gelditzen ginela zain, autora sartu aurretik. Amak zioen motorea berotzeko zela… nik, nahiko ume bizkor eta xomorroa bainintzen, ulertua nuen zerbaiten beldurra zegoela.

Gure etxean oso guti mintzatu gira gaiaz, alabaina Estherek eta biok hizpide izan dugu, behin eta berriro, ea zergatik aitak ez zuen alde egin… guregatik izan ote zen? Sentimendu horrekin bizitzea zamatsua izan zait denbora batez. Zergatik? Komisaldegian salaketa jarria zuelako salbu zegoela pentsatzen ote zuen? Hainbesteko konfiantza zegoen frantses "justizian"?! Hainbesterainokoa sarraskia… eta komisaldegian salatuta geldi zitekeela pentsatzen ote zen? Aitak bazekien eta ez zuen alde egin, Steinek bazekien eta aita laguntzearren egon zen egun hartan berarekin. Horregatik soilik erail zuten gazte beltzaran hori, aita laguntzeagatik! Eta galdera hauekin

buruak pentsatzekoa ematen du… nola kidetasunagatik bere bizia ematen ahal duen. Behin, orain dela dozena bat urte, solasaldi serio, sakon eta aberasgarria ukan nuen kide batekin, eta galdetu nion zergatik garai hartan errefuxiatuek (gehienek) ez zuten alde egiten. Luze egon ginen, zertxobait baretu nituen nire galderak, baina erran bezala, Jokin, berriki gai honetan murgilduta ibili naizenez, berriz ere topatu ditut galderak…

## 36. JOSE LUIS GERESTA *TTOTTO*

Boladaka areagotu izan duten jazarpen iraunkorra da ETAko militante hilen oroitarrien aurkakoa. Ez dute, bestalde, ahalegin txikiagoa egin Francoren eta tankera guztietako frankisten oroitarriak, kale edo enparantza izenak, monumentuak eta gainerakoak bere horretan zaintzeko.

Esan liteke Francok kondenatu eta fusilatu ondoren orduko pelotoi haien postuan guardia egiten jarraitzen dutela oraindik, leial arraio gainera, gaurko epaileek, poliziek eta ordena espainiarraren zaindari guztiek. Ertzaintza izan baita esaterako, lehenago aipatua dugunez, 1975eko irailaren 27an fusilatu zuten Txikiren aldeko omenaldia debekatzera, Zarauzko hilerrira joan zena 2009. urteko gudari egunean han bildu nahi zutenen kontra oldartuz.

Baina badirudi hilerritik, enparantzatik, edo kaleetatik ez ezik menditik ere desegin edo ezkutatu egin nahi dituztela euskal militante abertzaleen aldeko omenaldiak eta oroitarriak.

1991eko abuztuaren 17an Donostian Guardia Zibilak hil zituen Patxi Itziar, Iñaki Ormaetxea eta Jokin Leundaren omenez Arno mendian zegoen monolitoa ere Ertzaintzak kendu zuen, Madrilgo Entzutegi Nazionalaren agindua betez.

1999ko martxoaren 20an Jose Luis Geresta *Ttottoren* gorpua, tiroz eraila, agertu zen Orereetako Bordondo baserriaren ondoan. Monolitoa ipini zuten gero leku hartan, eta honela kontatzen dute Bordondoko Kontxi Manzisidor eta Jose Luis Arzallusek harekikoa:

Jose Luis Geresta *Ttottoren* monolitoa gure etxe aurrean zegoen, zazpi edo zortzi metrotara kokatua. 2010era arte urtero egiten zen omenaldia leku horretan.

2010eko udan hasi ziren ertzainak kotxearekin bueltaka; etxe aurretik pasa eta joan egiten ziren ezer esan gabe. Gau batean goizeko lauretan esnatu ginen; kanpoan hiru edo lau auto zeuden, ertzaintzarenak. Orduan esan ziguten monolitoa kentzeko, bestela arazoak izango genituela. Espedientea, kolaborazioa, delitua, apologia eta horrelako hitzak erabili zituzten.

Guk esaten genien monolitoa guk ez genuela ipini, baina bazekiten gure lurretan zegoela, eta gu ginela horren arduradun. Mehatxua garbia zen: kendu, edo arazoak.

Horrela gelditu zen gauza, eta gure aldetik denbora pasatzen utzi genuen. Baina hortik aste batzuetara berriro azaldu ziren mehatxu berdinarekin: apologia, kolaborazioa, delitua, Audientzia… Baita Garzon epailearen izena ere.

Gure arrazoiek ez zuten ezertarako balio izan: Ttotto gure lehengusua zela eta maite genuela, horrek ez ziola inori kalterik egiten… Dena alferrik, jakina. Orduan, lagun batzuekin hitz egin eta kentzea erabaki genuen. Orain leku horretan sagarrondo bat dago.

## 37. ANDONI CAMPILLO

Bere arreba Begok kontatzen ditu, bai garai hartako giroarekikoak, eta bai Andoni erail zutenean bizi izan zituztenak:

> 1972an joan zen Andoni. Nabaritzen zitzaion zerbait; hasiak ziren grebak, eta ikurrinak agertzen ere bai Bizkargin, elizan…
>
> Fraide zihoala esan zuen alde egin aurretik. Bazuen Arantzazuko berri, eta han hasi zen langile mugimenduarekin harremanetan. Etxean *Radio Independiente* eta *Radio Paris* entzuten zen; oso politizatua zegoen dena. Burgosko prozesuagatiko greba gauza oso garrantzi-tsu bezala bizi eta jarraitu genuen etxean, eta hunkituta geunden denok. Gogoratzen dut giroa, artean umea nintzen arren.
>
> Andoni, 1970ean oker ez banago, atxilotu egin zuten Gernikan, eta koartelera joan zen ama hura ikustera; besarkatu zuen eta, klabikula atera zioten semearengandik askatzeko. Amaren indarra.
>
> Gero, alde egin zuenean, nahas-mahas handia izan zen etxean eta ez zuten denek ulertzen egiten ari zena. 1972an errefuxiatu zen Iparraldean. Amamak tratu handia zuen berarekin, eta sarritan joaten zitzaion bisitan. Gabon batzuk berarekin igaro zituen, gainera, eta pozik itzuli zen. Poliki-poliki jendea ari zen jakiten irratiak, egunkariek edo telebistak esaten zuten guztia gezurra zela. Gazte idealistak ziren eta haiekiko eta familiarekiko elkartasun handia zegoen, egiten zuten guztia ondo ulertzen ez bazen ere. Egunkarietako berrien ara-

bera genbiltzan askotan etxean: Andonik hau edo hori egin zuela… oso jazarria zegoen. Goizaldeko araketak, etxea hankaz gora jartzeak etorri ziren gero; beldurra, beti beldurra, gogorra izan zen bizi izan genuena. *Cristo Reyko Gerrilleroen* heriotza mehatxuekin. Jazarriak sentitzen ginen. Behin, epaitegira joan zen ama heriotza mehatxuekin jaso genuen eskutitz bat salatzera, eta epaileak esan zion guardia zibilen babesa jarri ziezagukeela bakarrik. Pentsa. Carrero garbitu zutenean ere ikaragarria izan zen; familia osoari kendu zizkioten pasaporteak, Andoni ikustera ez gintezen joan. Familiakoren batek Iparraldera joan nahi bazuen, komisaldegian eskatu behar zuen baimena, eta haiek eman zezaketen edo ez.

1975eko udan zauritu egin zuten tiroketa batean. Lehenago, apirilaren 27an, Motriko hil zutenean, gurasoei esan zieten hildakoa Andoni izan behar zuela. Orduak igaro ziren ez zela jakin genuenerako. Oso larri egon zen zauritu zutenean; joan ginen ikustera. Poliki-poliki sendatu zen. Bartzelonan izan zen hori. Berak ihes egin zuen, baina Txiki atxilotu zuten. Loboren salaketaren ondorioz izan zen erorketa.

Irailean atzera igaro zuen muga, Bartzelonara berriz ere, eta hantxe hil zuten irailaren 19an. Egun haietan zalaparta handia zegoen, Txiki eta Otaegiren epaiketengatik batez ere. Zerbait handia ari zirela prestatzen salatu zuen Lobok, zer zen ez bazekien ere, eta horregatik erabaki zuen poliziak operazioari ekitea. Andoni goizeko zortzietan hil zuten. 500 inguru poliziak inguratu zuten etxea, beraiek kalera jauzi egin zuten… bera hankan zauritu zuten eta gero buruan eman zioten tiroa. Gaueko hamarrak arte ez zioten ezer esan familiari. Aldi berean Montxo hil zuten Madrilen. Gaueko hamarrak eta

erdietan jo zuen telefonoak. Arrebak hartu eta “ama, Guardia Zibila”, esan zuen. Ikaragarria izan zen amaren garrasia, ez dut egundo ahaztuko.

Taxi bat hartu genuen Bartzelonara eta Txapuren ama etorri zen gurekin. Garai hartan ez zegoen abokaturik, eta FRAPekoen defentsa egin zutenekin harremandu ginen. Goizeko seietan iritsi ginen. Bide guztian irratia isiotuta, baina Andoniren heriotzaz ez zuen ezer esaten. Abokatuak eman zigun tratua ezin hobea izan zen; gorpua zegoela esan ziguten kuartel militarrera lagundu gintuen. Militarrak eta polizia nazionala zeuden atean; ea zer nahi genuen, galdetu ziguten. “Andoni Campilloren familia gara, hemen dagoela esan digute eta gorpua jasotzera gatoz”, erantzun genien.

Barrura sarrarazita, han ez zegoela inor, esan ziguten; ea nork esan zigun guri ezer? Guardia Zibilak esan zigula… zakar eta mespretxuz tratatu gintuzten; gogoan dut apaiza zela, kaperau kastrensea edo antzeko zerbait izango zen. Itxaronaldi baten ondoren onartu ziguten baietz, han zegoela. Gerora jakin genuen segadatik ihes egindako batek, Gernikako koartelera deitu zuela guardia zibila zela eta familiari abisu eman ziezagutela esanez. Poliziak isilpean eduki nahi zuen guztia eta inor abisatu gabe lurperatu, operazioa artean amaitu gabe zegoelako agian, ez dakit.

Polizia eta militarrez inguratuta, berriro baieztatu ziguten: “Benetan zuen senidea izango da, neska koskor honen antza baitu”, esan ziguten. Gela batera eraman eta arakatzeko biluzarazi egin gintuzten, ospitaleak kuartelean zeukan depositura joan eta han zeukaten anaiaren gorpua ikusi ahal izateko.

Depositua poliziaz inguratuta eta giltzaz itxia zegoen. Berriro arakatu gintuzten sartu aurretik. Marmolezko mahai baten gainean zegoen, dena odoleztatuta. Gorpuari besarkatu gintzaizkion, eta tatarrazka atera gintuzten kanpora. Hankan zuen tiro bat, eta lokian beste bat. Giroa oso tentsua zen; amorru bizian zeudela igartzen genien eta beldur ginen zerbait egingo ote ziguten. Polizia operazioa amaitu gabe zegoen artean eta ez zuten uste hain bizkor iritsiko ginenik. Txiki eta Otaegiren aurkako epaiketa bete-betean, histeriko zeuden. Teniente koronela etorri zen eta amari esan zion eros genezala hilkutxa, eta joateko gero gorpua garbitzera. Arratsaldeko lauretan eman ziguten hitzordua, baimena eman behar zuen militarrarekin. Funerariara eraman gintuen abokatuak; gogoan dut ama oso gaizki zegoela memento horretan. Lore eta xingola gorri, zuri eta berdeak erosi genituen. Gure omenalditxoa zen, edo mendekutxoa, zer dakit nik. Zerbait geurearen presentzia, geure ongi nahia… aurrez prestatu gabeko zerbait izan zen.

Kuartelera itzuli ginen eta, ea zertara gindoazen… loreak eta hilkutxa hartu zituzten baina ez ziguten sartzen laga, sartu ahalko ginela hitz eman ziguten arren. Lauretarako hitzordura joan ginen, gorpua jasotzeko baimena eman behar zuenarengana. Ea zer nahi zuen galdetu zioten amari, eta "nire semeak zerbait egin badu, bere biziarekin ordaindu du; gorpua neurea da…", erantzun zien. Ez Bizkaian eta ez Euskal Herriko beste ezein lekutan hobiratzeko agindua eman zutela; "presta zaitezte bihar goizeko zazpiak eta erdietarako eta Bartzelonako hilerri zibilean hobiratuko dugu", esan ziguten.

Hitzik gabe igaro genuen gaua, negar eta negar. Hurrengo goizean zazpiak eta erdietarako joan ginen koartelera; berriro

araketa, baita abokatuari ere. Eskoltatuta gindoazen. Teniente koronela agertu zen eta errieta eman zigun, ez genuelako gorpua atondu. Ez zigutela utzi esan genion. Polizia oso urduri zebilela eta berak lagun egingo zigula esan zigun. Motoristak, polizia, Gernikan abiatu ginenetik gurekin zebilen taxia, anbulantzia… Segizioa. Txundigarria zen. Tenienteak agindu zuen ireki zezatela kutxa senideak agurtzeko eta oroigarriren bat laga nahi bagenion. Hainbeste negar malkotan bustitako painelua laga zion amak seme hilari.

Etxera itzuli ginen. Kontrol izugarria zegoen Muxikan, baina pasatzen utzi ziguten eta etxera joan ginen. Amamak ezin zuen ulertu gorpua etxeratzen utzi ez izana. Gero hileta egin zen; Andoniren argazkia hartuta joan zen ama guardia zibilez inguratuta zegoen elizara. Hileta meza amaitzean zalaparta handia izan zen eta dezente jo zuten guardia zibilek. Jendea irauli egin zen guregan, jende asko, baina bolada oso txarra pasa genuen, lasaigarriak hartuz eta.

Txiki eta Otaegi fusilatu eta bi egunera, Txikiren anaia etorri zen etxera. Txiki Bartzelonan Andoniren ondoan hobiratu zutela, eta Andoni herriratzen uzten ez zuten bitartean beraiek ere ez zutela ekarriko esan zigun.

Hurrengo egunetan telefonoz deitzen zioten amari txakurkeriak esateko. Ez dakit ez den familiari bere gorpua jasotzen utzi ez dioten kasu bakarra. Askotan ihes egin zien eta amorrua zioten. Urte bete ingurura, 1976an, ekarri zituzten gorpuak, omenaldi eta zalapartarik izanez gero ez zizkigutela entregatuko mehatxatuta. Herriari eskatu zion amak ez egiteko ezer. Gorpua ekartzea oso garestia izan zen; guk ez geneukan hainbeste diru, baina egun gutxian herrian bildu zen dirua.

Gure anaiaren hilobia behin baino gehiagotan zapuztu eta laidotu dute, apurtu ere egin izan dute, baina jende askok bisitatu du eta katalan askok gogoratzen dituzte egun haiek.

Andoni erail eta hamabost egunera Polizia Nazionala etorri zen etxera. Gure pasaporteak amari itzuliz, “Hartuizu emakume; orain ez ditugu behar”, esan zioten.

Uler daiteke biktimen familien oinazea, baina horiek ez dituzte zapaldu eta umiliatu, ezta gu bezala jazarri ere. Gu ez gara bizi izan sufrimenduaren errentatik eta subentzioetatik, baina haiek ez dute ezagutu guk ezagutu dugun elkartasuna.

Amak beti esaten zigun, Andonigatik edozer gauza entzunagatik, jasotzeko burua eta egoteko harro gure anaiaz.

Ia ezer ez zaigu geratzen Andonirenik, ezta argazkirik ere; dena eraman zuten.

## 38. JON EREZUMA

Jon Erezumaren berri zuzena izan nahian bere arreba Errose Mirenengana jo dugu, eta halaxe eman dizkigu, zuzen eta artez, haren heriotzaren, eta etxekoek eta herritarrek egun haietan bizi izandakoen zertzelada jakingarriak:

> Jon gure nebak 24 urte zituen. 1988ko martxoak 14an Autzaganeko mendatean atzetik zetorren auto bateko bi paisanok alto eman eta dokumentazioa eskatu eta leihatilatik kontaktuko giltzak kentzera zihoazenean atearekin sakada bat emanda hanka egin zuen, paisanoetako bat Gotzone ahizparekin gelditu eta bestea atzetik segika, Jonek pendizetik salto eginda mendirantz arrapaladan ospa egin zuen, inoiz etxera gehiago ez etortzeko, atzetik segika zuen poliziak tiro egin zion, baina ez zuen harrapatu, antza. Gero jausi egin eta pistola galdu egin zuen.
>
> Orduz geroztik telebistak, irratiak eta prentsak ematen ziguten haren berri, bera eta Monteagudoren berri. 1991ko maiatzak 29 arratsaldez Viceko atentatua izan zen, eta segituan atentatuaren egileak Jon eta Joan Carles Monteagudo zirela esan zuten behin eta berriz, euren aurpegien argazkiak agertzen ziren informatiboetan. Horrek guztiak suposatzen zuen presioa, taberna, telebista… Hurrengo egunean goizean goiz pintxoak egin eta egunero moduan amak zabaldu zuen taberna. Goiz hartan tabernan 6-8 morroik, trajez jantzita, goiz osoa pasatu zuten kafeak eta pintxoak jaten, oso berbaldun, eta katalanak zirelakoan zegoen ama. Daborduko susmoa hartuta telebista itzalita eduki genuen. Eguerdi partean neu nintzen barran. Telefonoak jo zuen eta hartu

nuenean norbaitek, ahots ezezagun batek, "Los proximos sereis vosotros", esan zuen. Arratsalde horretan neba nagusiari etxeko atezain automatikotik esan zioten "Buenas noticias de Barcelona". Arratsaldeko 7ak inguruan, pintxoak eta txikiteo orduan, Kepa aurpegi larria zuela sartu zen tabernara "Jon eta besteak harrapatu dituzte, Jon bizirik dago". Dena bertan behera utzita etxera joan nintzen telebista piztu eta informatiboetakoa esatariak, "Juan Felix Erezuma ha ingresado cadaver en el Hospital Clinico de Barcelona". Horrela jakin nuen nebaren heriotzaz. Ama etorri zitzaidan burura. Tabernatik etxera hiru minutu daude eta zuzenean tabernara abiatu nintzen, taberna itxita pertsiana jaitsita eta barruan ama zegoen buruari heltzen pentsakor serio, negar egin barik begiak siku, aita non dagoen galdezka. Aita goizetik basora joanda zegoen. Floren nebak ez zuen nahi sinistu Jon zenik, Gotzone ahizpari shock baten modukoa eman zion. Aita berandu heldu zen tabernara, ilunduta. Sartu tabernara eta esan genionean, azkenaldian susmatzen zuen zoritxarra baieztatu baino ez zitzaion egin. Jende asko hurbildu zen tabernara batez ere ezker abertzaleko jendea, batzuk elkartasuna adieraztera, beste batzuk organizatzen hasi ziren ondorengo egunetan egin beharreko gestioak, nortzuk joan Bartzelonara, bidaiarako erreserbak, Gernikako ekitaldi-omenaldia, meza…

Bartzelonara joan ginen Floren, Rafa (lehengusua) eta Errose, goizeko lehenengo hegazkina hartuta, gurekin Floren Aoiz eta Arantza Zulueta etorri ziren. Beldur ziren *extrema derecha*ko jendea egongo zela guri itxaroten erasotzeko, baina ez zen horrela izan. Bartzelonara heldu eta taxia hartu, Bartzelona Klinikako mortuoriora eraman gintuzten, hantxe Jon zegoen lekura eraman, eta han ikusi genuen esku-ohe batean etzanda luze. Negar zotin artean forenseari galdetu genion zergatik

hain kolore horia zuen, odol tantarik gabe gelditu zela esan zigun. Berba egin nion, agurtu egin nuen besteen begiraden lotsa barik.

Ondoren joan ginen baltsamatu eta hilkutxak saltzen diren funeraria batera eta bertan zeukaten modelo, kalitate eta abar erakutsi, eta erabaki behar izan genuen zein erosi. Inoiz burutik ez zitzaidan pasako horrelako erabakiak hartu behar izango nituenik. Ordainketa diruz egin behar zen, eta ez genuen eraman hainbeste dirurik eta azaldu ziren lagunen artean batu genuen dirua, gaua zen eta diru-kutxen bila ibili ondoren hurrengo goizerako batu genuen dirua. Goizaldean hotelera bueltatu ginenean Pilar zegoen, katalandar emakume solidarioa, lore sorta handi bat zuela, besarkatu gintuen eta herri katalanaren izenean doluminak erakutsi zizkigun. Hurrengo egunean eguerdi aldera etxerako bidea hartu genuen.

Etxerako bidea oso luzea eta gogorra izan zen. Bartzelonako funerariako autoa Jonen gorpuarekin eta gu beste bi autotan atzetik gindoazen. Miranda de Ebro parean autopistan Guardia Zibilaren patrolak eta tanketa bat gure zain zeuden, funerariako autoari altoa eman eta agindu zioten tanketaren aurretik joateko gure autoak geldituz, urduritasun eta beldur handia pasa genuen, begi bistatik galdu genuelako. Bahitu zuten, eta ez genuen jakin zein zen egoera guzti horren helburua. Azkenean atzetik astiro-astiro bistatik ez galtzeko. Herriaren harrera Mirandan hasi zen, jendea errepidearen ondoan ikurrinarekin Jonen gorpua itxaroten zegoen azken agurra egiteko. Oso hunkigarria zen ikustea hainbat eta hainbat pertsona. Guardia Zibilak Basauriko kartzelaraino etorri ziren. Ez ziren ausartu, edo ez zuten nahi izan aurrera jarraitzea. Zornotzan lehenen-

go ongi etorria eskaini zioten, gelditu autoa, dantza eta txistua, jendearen berotasunean hasi ginen jasotzen besarkadak eta gurekin bat dagoela herria adierazi ziguten, asko lagundu zigun horrek, egun horiek pasa ahal izateko.

Ondoren Muxikan ere beste geldialdi bat. Hantxe ama eta aita zeuden, ama oso-osorik ikusten nuen. Jon gura zuen ikusi eta hantxe bide izkinan, urteetan ikusi barik izan zuen semearen hilkutxaren tapa altxatu eta bere aurpegia ikusteko irrikan ikusi nuen ama, azkenean etxera etorria baitzen betiko, zer edo zer esan zuen "ez dut barkatuko egin dizutena" edo antzeko zer edo zer. Aita isilik, eta besarkadak eman genituen. Autoetan sartu eta funerariako autoa aurretik genuela Gernikako sarrerara heldu ginen. Bertan Txabi abadea zegoen. Berba batzuk bota zituen eta oinez guztiok autoa aurretik zihoala astiro-astiro jendea batzen hasi zen, manifestazio handi isil bat osatuz. Sorozabalen musikak isiltasuna betetzen zuen. Herriaren erdigunera iritsi zen Jonen gorpua. Atera genuen eta lagunak sorbaldan eraman egin zuten Udaletxearen kanpoan dagoen plazaraino, Udalak ukatu egin baitzuen barrura sartzea.

Gernika elkartasuna adieraztera etorri zen jendez beteta zegoen, ikurrinak nonahi. Jon maitatua zela sentitu genuen. Jonek herriaren miresmena eta maitasuna hartu zuen. Omenaldia hunkigarria izan zen. Jon eta Joan Carlesen mezuak entzun genituen euren ahots goxo eta ausartaren bitartez. Ilunduta bukatu zen ekitaldia. Jonek ez zuen izan elizkizunik, Gernikako elizako abadeak ez zuen gura izan Txabi abadeak ematerik meza, eta orduan eztabaida gogorra izan zuen familiarekin. Abadeak esan zuen inork ematekotan berak emango

zuela meza, bestela ezer ere ez. Eta horrela izan zen, ez zen mezarik egon.

Jonen gorpua Basurtoko Ospitalera eraman genuen autopsia berri bat egiteko asmoarekin. Autopsiaren ostean Derioko hilerrian dagoen errausteko lekuan erre eta bere errautsak egun omenaldia egiten dugun Ibarrangeluko zelaietan haizeratu genituen.

# 39. BERNARD GOIHENETXE *MATALAS*

Ia lau menderen zubia igaroz iritsi da gureganaino Matalasen historia latza. Bertso bat utzi zigun, poema bat, bere epika handiaren eta ametsaren lekuko; belaunaldiz belaunaldi abestu dute euskaldunek, herri kantu bilakaturik, Matalasen letra hori, zuberotarraren aldarri ausarta behin eta berriz berpiztuz.

Bernard Goihenetxe, *Matalas*, Zuberoako Mithikilen jaio zen, eta Maule-Lextarren hil zuten 1661eko azaroaren zortzian.

1639an, Zuberoako herri-lur eta basoen jabetza beretzat hartzen du Luis XIII. errege frantsesak, eta salgai jarri, foruaren aurkako erabakian. Herrialdeko asanblada zorretan sartzera behartzen da orduan ondasun komunalak erosteko.1661ean, lurren erosle azaltzen da Arnaud Jean Peyre, Iruriko jauna. Lurrak eta eraikinak ez ezik, Mauleko gaztelua ere erosi zuen, bere handinahikeriaren ikurtzat agian. Uzta garaian uztak erosiz eta zergak igoz, herritarren haserreari gainez eragin zion Irurikoak.

Mithikileko seme izateaz gainera, bertako apaiz zen ordurako Matalas; horrek izango zuen, behar bada, zerikusirik 1661eko matxinada haren buru bera izan zedin. 7000 matxinaturen buru izan zela diote

batzuek. Kontra-gobernu bat jarri zuen abian 1661eko irailetik, zergak bildu eta lege eta ekonomi neurriak hartzeko eskumenarekin. Errege-administrazioarekin negoziatzeko saiakera ere egin zuen… Ekidin ezina izan zen talka.

Zuberotarren garaipen batekin hasi zen aurrez aurreko armatu hori, Ündüreinen, “Herria! Herria! Herria!” oihuen artean.

Baina urriaren 12an Sohütan geratzen dira matxinatuak, Zuberoako nobleziak eta Calvo kapitain mertzenarioak gidaturiko Bordeleko tropak zokoraturik.

Ihesera behartuta dago Matalas, baina hurrengo egunean atxilotu zuten, Urdiñarbe inguruan.

Mauleko gaztelura eraman eta heriotza zigorra ezarri zion Bordeleko Parlamentuak.

Azaroaren zortzian hil zuten Lextarreko erdiko plazan, lepatuta, eta soina laurdenkatu egin zuten. Gazteluko kanoietako batetik zintzilik ipini zuten Matalasen burua, baina herriko sarrerara eraman eta hantxe eskegi zuten gero, han herritarrentzat eskarmentagarriago izango zelakoan, noski, Frantzia handiaren eta herriko nobleen interesen aurka jaiki zen herritar lotsagabeari zer zegokion erakusteko.

Abenduaren azken egunean kendu zuten handik, ezkutuan, debekuak gaindituz isilpean lurperatzeko.

Herritar matxinatuaren gorpuari lurraren atsedena ukatzea, haren senide eta lagunei hiletak egitea debekatzea… agintearen larderiak,

harrokeriak, burua jasotzera ausartu den herritar apalari aginteak eta bere zerbitzari mertzenarioek dioten gorrotoak, ez du neurririk ez denboran, ez itsusian…

Hilobirik gabe, lurraren baitako atsedenik gabe, erkideen begi bistan usteldu eta usteltzearekin batera haien memoriatik ezaba zedin nahi zuten, noski, tiranoek.

Baina gaur oraindik abesten dute herritarrek Matalasek azken orduari begira idatzita edo errezitatuta utzi zuen aldarria, eta aldarri hura abesten den aldi bakoitzean berpizten da, agian, haren espiritua:

> Dolü gabe hiltzen niz
> bizia Ziberoarentako
> emaiten baitüt.
> Agian, agian, egün batez
> jeikiko dira egiazko
> ziberotarrak,
> egiazko esküaldunak,
> tirano arrotzen ohiltzeko
> eta gure aiten aitek
> ützi daikien lurraren
> popülüari erremetitzeko.

# **atara**miñe formatu txikian

---

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso
2003

---

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa
2004

---

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza
2005

---

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola)
2007

---

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta
2008

---

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza
2011

---

**Ametsen txokoan bizi naiz**
Ibon Muñoa
2011

---

**Fakin Xokona**
Oier Goitia Abadia
2012

**Liburu honek, maite dugun jendearen heriotzaz, hileta-erritoez, doluaz eta estatuek haiengana erakutsi izan duten logikaz dihardu.**

**39 ataletako asko euskal militante hilen gertukoek emandako testigantza zuzenak dira. Hiletak egin eta dolua eramateko garaian bizi izandakoak bilduak datoz bertan: nozitutako eragozpenak, jazarpena, mesprezua, baina baita jasotako begirunea eta elkartasun oldea ere.**

**Beste gainerako atalak, gai horiekin estu lotutako literaturatik, kronika historikotik, antropologiatik... ari dira. Isiltasun inposatuaren eta ahanzturaren larderiaren kontra beti.**

**Izan ere espetxeak ez du zertan idazlea mundutik atera, alderantziz baizik. Jokin Urain, bizitzea egokitu zaionaren lekukotza utzi beharraren ardurak ekarri izan du behin eta berriz idaztera. Hala ari da osatzen literatur ibilbide miresgarria. Esku artean duzuna da horren erakusgarri.**

***Hil den senide edo lagunari azken agurra eta omena egiten diogu hileten bitartez. Baina heriotza horrek inguruko biziongan uzten digun hutsunea eta eragiten digun samina osatzeko edo bideratzeko ere bada hileta errituala; bizion sentipenean hartzen du hilak atseden. Biziontzat dira hiletak.***

***Beharbada esan genezake aurrekoen borondatea bizi dela gugan.***

***Ez ziren alferrik pasa, zinez, eta ez gara pasako; gure oinatzak hor geratuko dira bidean, eta ondoren datozenek ezagutuko dituzte. Ez gara alferrik pasako, eta nahi ere horixe nahi genuke: beste esku batzuek gure lana eta beste bihotz batzuek gure itxaropena jasotzea.***

ataramiñe
www.literaturakoadernoak.org